2024ko irailaren 22a, igandea
XXII. urtea | 6.603. zenbakia | www.berria.eus | Prezioa: **1,90 euro**

Igandea




# ALEMANIAREN ESKUIN MUTURREAN

Turingian eta Saxonian emaitza onak izan ondoren, Brandenburgon irabazteko prest dago AfD. Ekialdeko herritarren bazterketa sentipena ustiatzen ari da.

HARIAN | 2-4

### EH Bildu
«Eskubide nazional guztiak» aitortuko dituen estatus baten alde egin du Otegik

EUSKAL HERRIA | 6-7

### Iritzi artikulua
Txibitek eta Pradalesek kontzertu ekonomikoen markoa defenditu dute

IRITZIA | 18

### Frantzia
Eskuinera lerratutako gobernu bat izendatu du Macronek, protesten artean

MUNDUA | 13

### Mikel Lorda Lopez
«Landare asko desagertu dira. Klima aldaketak eragina du; azpiegiturek, gehiago»

BIZIGIRO | 26-27

## NASAN

*CATE BLANCHETT: «EZ DA ALDAKETARIK EGONGO DENA HOMOGENEOA BALDIN BADA»*

GEHIGARRIA

# Ultraeskuina, geldiezin Alemanian

Turingian eta Saxonian lortutako emaitzak bultzada bat dira AfDrentzat 2025eko hauteskunde federaletarako; inkestetan, gaurko Brandenburgoko bozak irabazteko faboritoa da.

*Testua:* **GORKA BERASATEGI OTAMENDI**

Eskuin muturrak geroz eta babes handiagoa biltzen du Alemanian. Arrakasta izan du Turingia eta Saxonia landerretako bozetan, eta sendotzen ari da 2025eko irailean egitekoak diren hauteskunde federaletarako bidean. Bigarren Mundu Gerraz geroztik aurrenekoz, eskuin muturreko alderdi batek irabazi zituen Alemaniako lander bateko bozak, irailaren 1ean. AfD Alemaniarentzako Alternatiba Turingian nagusitu zen, eta bigarren indarra izan zen Saxonian, CDU Batasun Kristau-Demokratatik puntu bakarrera. Gaur izango dira Brandenburgoko estatu bozak, eta inkestek faboritotzat jotzen dute AfD. Gainerako indarrak ultraeskuinaren gorakadari erantzuten saiatzen ari dira, baina ez dute lortu haren hazkundea geldiaraztea.

Turingia, Saxonia eta Brandenburgo Alemaniako Errepublika Demokratikoa (1949-1990) osatu zuten bost landerren parte dira, eta, hain, zuzen, lurralde komunista ohi horretan, herrialdearen ekialdean, lortu du eskuin muturrak gotortzea. Babes zabala du: botoen %20tik gora, bost landerretan. Datorren urteko hauteskunde federaletarako Alemania mendebaldean ere indartzea lortuko duen, hori da orain galdera nagusietako bat. Jauzi horren arriskuaz ohartarazi du Ralf Streck kazetari alemaniarrak. «Mendebaldeko egoera soziologikoa, kulturala eta ekonomikoa ekialdearen antzera jartzen bada, gauza bera ikusiko dugu, ala okerragoa», ohartarazi du.

Ezin ahaztu, ekialdean indar handiagoa duen arren, AfDk ordezkaritza duela lander guztietako parlamentuetan, eta 77 aulki dauzkala parlamentu federalean —ganberako ordezkarien hamarren bat—. Litekeena da ultraeskuinak lurralde osoan duen presentzia areagotzea 2025eko bozetan. Hauteskunde federalei begirako inkestek goranzko joeran kokatzen dute, parlamentuko bigarren indar bihurtzeraino, CDUren eta CSU Batasun Sozial Kristauaren arteko koaliziotik hamabost puntu ingurura.

Oraingoz, gobernatzeko ateak itxita dauzka AfDk, gainerako alderdiak konprometituta baitaude hari agintzen ez uztera. Babes hesi horrek eragotziko dio Turingian boterea eskuratzea, lehen indarra izan arren. Oraingoz, konpromiso hori «irmoa» da, Strecken iritziz, baina ez du uste etorkizunean mantenduko denik. «Hemendik gutxira Espainiako Estatuan gertatu den gauza bera gertatuko da. Lehenengo, AfDk CDUren gobernu bati bide emango dio salbuespen gisara; gero, pixkanaka, eskuin muturra gobernuetan normalizatuko dute, herrietatik hasita».

**Kanpotik eragiten**

Eskuin muturra ez da agintera iritsi, baina argi gelditu da Alemaniako agenda politikoan nabarmen eragiteko gaitasuna duela. Turingiako eta Saxoniako bozen bezperan, eta Solingengo atentatutik astebetera, migrazio politikak gogortuko zituela iragarri zuen Olaf Scholz kantzilerrak —besteak beste, 28 afganiar deportatu ditu Alemaniak—. Aste honetan, Alemaniak kontrol neurriak handitu ditu bere mugetan, dokumenturik gabeko migratzaileen sarrera apaltze aldera. Eskuin muturraren gorakadari galga jartzeko neurri bat, 2025eko hauteskundeak ortzi mugan direla.

Scholzen koalizio gobernuak —SPD alderdi sozialdemokratak, berdeek eta liberalek osatzen dute— migrazioarekiko hartu duen jarrera Angela Merkelen gobernu kontserbadorearena baino gogorragoa izaten ari da. Kantziler ohiak Siriako gerratik ihes egin zuten 1,5 milioi errefuxiatu hartu zituen 2015ean, bere alderdi ba-




Manifestari bat, AfDren kontrako manifestazio batean, Dresden hirian. FILIP SINGER / EFE

Bjorn Hoecke AfDren Turingiako burua, lander horretako kanpaina ekitaldi batean. C. B. / EFE




AfDren jarraitzaile bat, *Bakearen alde, askatasunaren alde, bat gara* dioen kamiseta batekin. C. B. / EFE




rruko presioei men egin gabe. Ane Irazabal BERRIAko kolaboratzaile eta Berlindik berriemaile aritzen den kazetariaren hitzetan, erabaki «historikoa» izan zen hura. «Orduko errefuxiatuen gehiengoak lan kontratua eta bizitoki baimena du gaur egun».

Dena den, Irazabalek nabarmendu du Alemania eskulan kualifikatuaren beharrean zegoela, eta lehen errefuxiatu horiek «Siriako erdiko klasea» ordezkatzen zutela. «Milioi eta erdi errefuxiatu jaso ostean, akordio batera iritsi zen Turkiarekin, berriz ere mugak ixteko». Orain, harrigarriena da Scholzen gobernua ari dela «migrazioaren kontrako neurri gogorrenak hartzen», eskuin muturraren presioaren ondorioz. «Beste fase batean gaude».

Eskuin muturraren gorakada ez da kontu berria Alemanian. AfD alderdi euroeszeptiko modura sortu zen 2013an, unibertsitate giroan —akademiako adituak ziren kideetako asko—. Lehen urte horietan, haren diskurtsoaren ardatza zera izan zen, Europako Batasuneko kide zorpetuak erreskatatzearen kontrako mezuak. Baina pixkanaka aldatuz joan da haren izaera. Irazabalek nabarmendu du AfDk etekina ateratzen jakin duela azken krisietatik: errefuxiatuen krisia, 2015ean; COVID-19aren pandemia, 2020an eta 2021ean; eta Ukrainako gerra, 2022tik hona.

Ultraeskuinak errefuxiatuen iritsiera erabili du «atzerritarrak etsaitzat» jotzeko. Kanpotik joandakoak deskribatu ditu mehatxu gisa, bai Alemaniako herritarren ongizatearentzat, bai herrialdearen izaera kulturalarentzat eta bai elkarbizitzarentzat. Pandemia garaian, AfDk «ideia konspirazionistak eta negazionistak besarkatu zituen, betiere askatasunaren bandera altxatuz», eskubide murrizketak salatzeko. Ukrainako gerra hasi zenetik, berriz, Alemaniako «krisi ekonomikoa kapitalizatzen» ari da.



**«Gorakada Europa osoan da kezkagarria, baina guztien artean AfD da alderdirik muturrekoena»**

**ANE IRAZABAL**
Kazetaria



**«Mendebaldeko egoera ekialdekoaren antzera jartzen bada, gauza bera ikusiko dugu, ala okerragoa»**

**RALF STRECK**
Kazetaria

«Ukrainako gerraren lehen ondorioa krisi energetikoa izan zen, Alemaniako produkzio industrial guztia Errusiatik inportatzen zen gas merkean oinarrituta zegoelako. Krisi energetikoak inflazio handi bat eragin du, eta ekoizpen industriala moteltzea». Arazo ekonomikoek «beldurra» eragin dute herritarrengan. «Ezegonkortu egin du aldartea».

Ugaritu egin dira Ukrainari armak bidaltzen jarraitzea okerra dela uste dutenak —Alemania da Ukrainari arma gehien bidaltzen dizkioten estatuetan bigarrena, AEBen atzetik—, eta iritzi hori du «klase politikoaren zati handi batek» ere. AfD oso kritiko agertu da gobernuak Ukrainara bidaltzen duen laguntza militarrarekin eta Errusiari ezarritako zigor ekonomikoekin. Scholzi eskatu dio Kieven eta Moskuren arteko irtenbide negoziatu bat bultzatu dezala, Ukrainari gerran jarraitzeko baliabideak erraztu gabe.

**Erradikalizatzen**

AfD sortu zenetik, alderdiak eratu eta moldatu duen diskurtso politikoa «gero eta erradikalagoa bihurtu da», Irazabalen esanetan. «Eskuin muturraren gorakada Europa osoan da kezkagarria, baina esango nuke guztien artean AfD dela alderdirik muturrekoena». Migratzaileen eta islamaren aurka zabaldu dituzten mezuak direla eta, Alemaniako zerbitzu sekretuek zaintzapean dituzte ultraeskuineko indarra eta haren gazte adarra, erakunde estremistak diren susmoagatik. Alderdiaren Turingiako buru Bjoern Hoecke, esaterako, bi aldiz zigortu dute Alemanian, nazien lelo bat erabiltzeagatik mitin politikoetan.

AfDren diskurtsoa Alemanian zenbait tabu apurtzen ari dela uste du Streckek. «Hizkuntzarekin jokatzen dute. Muturreraino eramaten dute, eta gero gelditu egiten dira. Baina beti eramaten dute muga pixka bat harago. Orain demokristauek edo sozialdemokratek defendatzen dituzten zenbait jarrera AfDk soilik babesten zituen duela bost urte».

Horren adibide gisa aipatu ditu migrazio politikak. «Orain, sozialdemokratek proposatzen dituzte lehen eskuin muturrak eskatzen zituen neurriak, argi utzi beharrean mugak ixteak ez duela ezertarako balio». Eskuin muturra bide horretatik geldiarazten saiatzea estrategia okerra da, kazetariaren iritziz. «Modu horretara, ultraeskuinak irabazi du jada. Jendeak pentsatzen du AfDk izan duela arrazoia hasieratik, eta besteek beren jokabidea zuzendu dutela. Eta halakoetan badakigu: jendeak nahiago du originala bozkatu, kopia baino».

Ultraeskuinaren gorakada are handiago bat galgatu du Die Linke ezkerreko alderdiaren zatiketa batetik jaio den alderdi berriak: Sahra Wagenknecht Aliantzak (BSW). Arlo ekonomikoan ezkerreko politikak proposatzen dituen arren, neurri kontserbadoreak babesten ditu beste arlo batzuetan. Esaterako, migrazioa mugatzeko politika zorrotzagoen aldekoa da, indarrean diren neurriek Alemaniako langileen egoerari kalte egiten diotela argudiatuta. Bestalde, BSW ere kritikoa da Ukrainari laguntza militarra ematearekin, eta Kieven eta Moskuren arteko su eten bat sustatzearen aldekoa da, gerra akordio politiko baten bidez amaitzeko. BSW hirugarren indarra izan da Turingian eta Saxonian, AfDren eta CDUren atzetik.

Nolanahi den ere, migratzaileen kontrako diskurtsoak indartuta atera dira Alemanian azken estatu bozetatik, eta inork ez du modurik aurkitu eskuin muturraren gorakada geldiarazteko. Ez da nahikoa ultraeskuina boteretik kanpo uzteko babes hesia. Ezta AfD estremismoagatik zaintzeko hartu diren neurriak ere. Alderdiak agintarien kontrako haserre botoa erakartzen jarraitzen du, lehen aldiz gailendu da lander bateko hauteskundeetan, eta ez dirudi haren agenda politikoa erosteak gauzak hobetuko dituenik. Herritarren babesgabetasun sentsazioa arindu ezean, 2025eko bozetan beste koska bat gora egiteko bidean da AfD. ●

# «Ekialdean sentsazioa dute mendebaldeak erabakitzen duela zer egin behar duten»

## FRANCO DELLE DONNE

*Analista politikoa*

Alemania 1990ean bateratu bazen ere, ekialdearen eta mendebaldearen arteko aldeek hor diraute. Horretaz eskuin muturra nola baliatzen den azaldu du Delle Donnek.



BERRIA

**Aitor Garmendia Etxeberria**

Alemania ekialdeko biztanleek uste dute bigarren mailako herritarrak direla oraindik ere. Franco delle Donne (Buenos Aires, 1983) analista politikoaren arabera, irudipen horrek «eragin handia» izan du eskuin muturrak Turingia eta Saxonia landerretan irailaren 1eko bozetan lortutako emaitzetan. Delle Donne aditua da eskuin muturrean, eta, batez ere, AfD Alemaniarako Alternatiba alderdia ikertu du. *Epidemia Ultra* podcastean eskuin muturraren inguruko dibulgazioan aritzen da, eta komunikazioan doktorea da Berlingo Unibertsitate Askean.

**Zer neurritan daude lotuta Alemaniako 1990eko bateratze prozesua eta ekialdean AfDk lortu dituen emaitzak?**
Eragin handia du. Bateratzea gertatu zenetik igaro dira 30 urte baino gehiago. Ekialdearen zein mendebaldearen arteko desberdintasunak murriztu egin dira, izan ekonomian, gizartean edo kulturan. Galdera da ea aldaketa hori sumatzen den; eta nabaritzen ez bada, arazo bat dago. Biztanleriaren zati batek, batez ere Alemania ekialdean, sentsazioa du mendebaldeak erabakitzen duela ekialdeak egin behar duena.

Hori erakusten du duela hiru asteko hauteskundeen aurretik egindako inkesta batek. Galdera hau egin zieten hautesleei: «Zenbateraino zaude ados baieztapen honekin: 'Ekialdeko Alemaniako biztanleak bigarren mailako biztanleak dira gaur egun ere'». Ados agertu ziren hautesleen %75; hau da, lau herritarretik hiru. Gainera, antzeko portzentaje batek uste du mendebaldeak erabakitzen dituela herrialdeko politika eta ekonomia; ados agertu zen, halaber, ekialdearen eta mendebaldearen arteko desberdintasun kulturalak gaur egun ere oso handiak direlako baieztapenarekin. 30 urteren ostean ere hor diraute desberdintasun horiek, herritarren pertzepzioaren arabera.

**Soilik biztanleen pertzepzioan diraute desberdintasunek?**
Hitz egin daiteke baliabideen transferentziaz, ekialdeko azpiegituren areagotzeaz... Baina desberdintasunek hor diraute, batez ere eliteen kontuan: mendebaldeko jendea da erabakiak hartzeko postuetan dagoena. Ez politikan soilik, baita ospitaleen edo unibertsitateen zuzendaritzetan ere. Hori enpresa publikoei dagokienez, baina sektore pribatuan ere egoera antzekoa da. Mendebaldearekin alderatuta, oso enpresa garrantzitsu gutxi daude ekialdean. Egon badaude, baina askoz ere gutxiago, eta horietan ere zuzendaritza postuetan daudenak, orokorrean, mendebaldekoak dira. Horrek eragindako sumindura eskuin muturrari emandako botoetan islatzen da; baita ezker kontserbadore populista berriari, Sahra Wagenknechtek zuzentzen duen alderdiari [BSW aliantza] emandakoetan ere.

**Eskuin muturraren diskurtsoak sumindura hori du oinarri?**
Beren komunikatzeko modua populismoaren eskuliburuan oinarritzen da. Hautesleei mintzo zaie esanez: «Duzuena baino askoz gehiago merezi duzue, eta horren erantzuleak eliteak zein zuen aurka daudenak dira».

Gizartea bitan banatzen dute, elkarren aurka dauden bi taldetan. Ideia horretatik abiatuta, eskuin muturrak bere burua aurkezten du herriaren asmoak ulertzeko, helarazteko eta buru-tzeko gai den aktore politiko bakar gisa. Hau da, herriak merezi duena lortzea oztopatzen duena paretik kentzeko gai dela diote: izan politikariak, korporazio handiak, lobbyak edota migranteak. Gainera, diote eurek baino ez dutela ausardia orain gutxi arte politikoki zuzena ez zena esateko. Hori da eskuin muturraren beste komunikazio estrategia bat: *mainstream*-aren oposizio gisa posizionatzea.

**Migrazioari arreta berezia jartzen zaio Alemaniako agenda politikoan, eta eskuin muturra mezu horiez baliatzen ari da ekialdeko landerretako hauteskundeetan.**
Ez daukat datu zehatzik, baina ekialdean dagoen immigranteen portzentajea txikiagoa da herrialdeko batezbestekoa baino. Ikerketa batzuek landu dute hori, hau da, atzerritarren mehatxu handiagoa sentitzea atzerritar gutxi dauden eremuetan. Segurtasun falta sumatzen du jendeak; baita, eskuin muturrak esaten duen moduan, atzerrikoa norbere nortasuna irensten ari dela ere. Berdin du uste horiek egia diren ala ez, jendea sinetsita dago gertatzen ari dela edo gertatuko dela.

**AfDk ba al du berezitasunik Europako eskuin muturreko beste alderdiekin konparatuz?**
Antzekotasun asko dituzte, baina AfDk baditu ezaugarri berezi batzuk ere. Europako beste alderdi ultraeskuindar batzuekin alderatuta, AfDk ez du lider karismatikorik edo mesianikorik. Giorgi Meloni du Italiako Anaiak alderdiak; Marine Le Pen, Frantziako RN Batasun Nazionalak; eta Geert Wilders, Herbehereetako PVVk. AfDn badago lider ezagunik, Bjoern Hoecke adibidez, baina ez du beste herrialdeetakoek bezalako pisurik.

**Hirietan lortzen du boto gutxien eskuin muturrak. Zergatik?**
AfDk indar handiagoa du landako guneetan. Ekialdeko azken hauteskundetan, hirietan ahulxeagoa izan da, nahiz eta horietan ere babes handia lortu duen. Batez ere hiri bizietan eta unibertsitateak daudenetan lortzen ditu boto gutxien. Izan ere, aldagai funtsezko bat da despopulatzea. Eskuin muturrak boto gehiago lortzen du hutsik geratzen ari diren lurraldeetan, gazteek alde egiten dutenetan.

**Turingian eta Saxonian fenomeno hori gertatzen da?**
Bai, lander horietan badaude despopulatzea pairatzen duten guneak.

**Enplegu faltak eragiten du despopulatzea?**
Industria edo lan gutxi egotea izan liteke fenomeno hori eragiten duten faktoreetako bat, baina eragina dute eskaintza kulturalaren gabeziak edota aniztasun faltak ere.

**Gazteek alde egindako guneetan lortzen du AfDk boto gehien, baina gazte askok ere babesten dute eskuin muturra. Alemaniako iragana ahazten ari da?**
Izan liteke, izan liteke hezkuntza politikoa falta izatea. Horrez gainera, sare sozialak modu eraginkorragoan erabiltzen ditu eskuin muturrak, eta alderdi tradizionalekiko etsipenak ere badu zerikusia. ●



«Ekialdean dagoen immigranteen portzentajea txikiagoa da herrialdeko batezbestekoa baino»

«Eskuin muturrak boto gehiago lortzen du hutsik geratzen ari diren lurraldeetan, gazteek alde egiten dutenetan»

# EH Bilduk xede du estatus berri baterako itunak «herritarren nahia» errespetatzea

→ Otegiren esanetan, eredu autonomikoak «porrot» egin du, eta bestelako harreman eredu batean sakontzeko «akordio zabal» bat behar da: **«Amaitu da denentzako kafea»**.

→ **Konferentzia Politikoan**, aho batez onartu dute III. Kongresua arautzeko proposamena.




Otegi, EH Bilduren Konferentzia Politikoan egindako hitzaldian, atzo eguerdian. JAIZKI FONTANEDA / FOKU

**Iosu Alberdi**

DONOSTIA— EH Bilduren Konferentzia Politikoak bi helburu nagusi izan ditu. Batetik, urte politikorako ildo politiko eta estrategikoa zehaztea, eta, bestetik, koalizioaren hirugarren kongresu prozesuari hasiera ematea. Atzo Donostiako Tabakaleran egindako bilkuran, militanteek aho batez eman zioten baiezkoa Mahai Politikoak III. Kongresurako proposatutako araudiari, eta, beraz, jada hasi da otsailaren 8an amaitzekoa den bidea. Bitarte horretan eta urte politikoa bukatu arte, bi elementu «estrukturalek» finkatuko dute koalizioaren ildoa, Arnaldo Otegi koordinatzaile nagusiaren esanetan: neoliberalismoaren eta Espainiako Estatuarekiko harreman ereduaren «porrotak», eta horri eman beharreko erantzunek. «Neoliberalismoa gainditu behar da, eta Euskal Herriak, burujabetzara bidean, nazio aitortza eta bere eskubide nazional guztiak onartuko dituen estatus bat behar du».



Koalizioko zenbait ordezkari, atzo, Tabakaleran. EH BILDU

Koalizioko kideen aurrean egindako hitzaldian, Otegik azaldu zuen «egiaztatuta» dagoela neoliberalismoak «porrot» egin duela: «Zerbitzu publikoak, gure bizitza eta gure balioak degradatzea eragin du, eta hori Euskal Herrian ere gertatu da». Horri aurre egiteko, «politika antineoliberalak» defendatu zituen, eta sektore publikoaren lidergoaren pean gauzatu behar direla esan: «Ez bakarrik sektore publikotik abiatuta, baina hark badu norabide estrategiko bat finkatzeko ardura». Azaldu zuen hori dela EH Bilduren proposamenen oinarria, besteak beste, zerbitzu publikoak «duintzeko», klima larrialdiaren aurkako «politika eraginkorrak» egiteko, ehun industriala «lurrari eta nazioari» lotzeko, genero arrakala gainditzeko eta aberastasuna banatzeko.

Nazio auziari dagokionez, berriz, EH Bilduko buruak Euskal Herriaren eta Espainiako Estatuaren arteko harreman ereduaren hutsuneak izan zituen hizpide. Haren esanetan, hutsu-



«Euskal Herriak nazio aitortza eta bere eskubide nazional guztiak onartuko dituen estatus bat behar du»

«[Kongresu prozesuan] Agerian utziko dugu estatu bokazioa duen mugimendu bat ordezkatzen dugula»

**ARNALDO OTEGI**
EH Bilduko koordinatzaile nagusia

ne bakarrak ez dira Foru Hobekuntza eta Gernikako Estatutua ez betetzea eta Euskal Herriaren «potentzialtasuna mugatzea». Zehaztu zuen egungo harremanak ez dituela asetzen Euskal Herriaren «nazio eta gizarte interesak», ez duela estatuaren «izaera plurinazionala» aitortzen, eta ez duela «nahikoa botere politiko» ematen erronkei erantzuteko: «Amaitu da denentzako kafea. Amaitu da gure nazioaren interesak egitura autonomiko baten pean sartzen dituen eredua».

EH Bilduk elkarrizketarako deia egin du, helburutzat hartuta «iraungitako eredu» hori gaindituko duen beste bat osatzea: «Euskal herritarren nahia eta borondatea errespetatuz, akordio zabal bat lortu behar da Euskal Herrian, ahalik eta zabalena, gure nazio aitortza, eskubide nazionalak eta beste harreman eredu bat martxan jartzeko». Otegik nabarmendu zuen akordio horrek «herritarren borondate demokratikoa» errespetatu behar duela: «EH Bilduk argi eta garbi planteatuko du Euskal Herria nazio bat dela, eta errespetua zor zaiola».

**«Ariketa militantea»**

Kongresuari dagokionez, ez da ezustekorik espero, eta aurreikus daiteke Otegik berak hirugarren agintaldia egingo duela koalizioko koordinatzaile nagusi gisa. Hala, koordinatzaileak «lasai» baina «anbizioz» hartu beharreko «ariketa militante» gisa definitu zuen prozesua. Anbizioz, «ezohiko testuinguru» batek «ezohiko neurriak» hartzea eskatzen duelako. «Arrakastaren arrazoietako bat izan da eszenatokiak aurreikustea, ongi aztertzea eta horiekin koherente jokatzea. Hori egingo dugu aurrerantzean ere», esan zuen.

Otegiren esanetan, kongresuak balio behar du koalizioaren «komunitate militantea egokitzeko eta eguneratzeko». Baita hura «herritarren zerbitzura egongo den tresna» gisa aurkezteko ere. Argudiatu zuen haien borondatea dela ahalik eta tresna zabalena eta eraginkorrena izatea «herri honen interes nazional eta herritarrak defendatzeko». Horiek hala, EH Bildu «gobernu alternatiba» gisa aurkezteko proposamenak egin nahi ditu Otegik: «Agerian utziko dugu estatu bokazioa duen mugimendu bat ordezkatzen dugula».

Bide horretan, Otegik uste du badituztela «pozik» egoteko arrazoiak: «Hauteskunde ziklo arrakastatsu batetik gatoz». Emaitzak aztertzeko orduan, baina, ez zuen eskuratutako ordezkari edo gobernu kopuruetan zentratu nahi izan, botoetan izandako gorakadan baizik: «Euskal Herrian gero eta jende gehiago dago bere botoarekin babesa ematen diguna, eta gure proiektu herritarra babesten duena».

Gorakada horrek, baina, berarekin dakar «arduraz» jokatu beharra ere, koordinatzaile nagusiak azaldu zuenez. Eta jokatzeko modu horri «*EH Bildu style*» deitu zion, hau da, EH Bilduren estiloa. «Euskal Herriak merezi duen mailako eztabaida politikoa izateko» xedea duen estilo bat: «Eta ez fribolitatea, probokazioa, zarata eta lokatza».

Hain zuzen, jarrera hori urte politikoaren hasieran egindako «*cum laude* adierazpenekin» alderatu zuen. Hitz horiek erabili zituen Otegik PSE-EEko idazkari nagusi Eneko Anduezak EAErako estatus politikoaren inguruko eztabaidaz esandakoak definitzeko. Eta adierazpen berean, kritikatu egin zituen EAJren EBBko presidente Andoni Ortuzarrek abuztuan Zarauzko (Gipuzkoa) mitinean egindako adierazpenak ere. Anduezak adierazi zuen EAJk eta EH Bilduk Eusko Legebiltzarrean duten gehiengoak ez duela gizartearen «pluraltasuna» ordezkatzen. Ortuzarrek, berriz, EH Bilduri egotzi zion «arduragabe» jokatzea, Eusko Legebiltzarrean aurkeztutako ekinaldi sorta dela medio.●

# EAJk «indarberrituta» atera nahi du Alderdi Egunetik

→ Irailaren 29an ospatuko dute, Forondan, eta **barne prozesuari** hasiera emango diote.

**Aitor Biain**

EAJk iraileko azken igandean ospatuko du 48. Alderdi Eguna, Forondan (Araba), *Alderdia gara* lelopean. Ospakizun egun «oso berezia» izango dela azaldu dute jeltzaleek, egun horretan abiaraziko baitute barne antolaketa berritzeko prozesua. Horregatik, bada, alderdia bera izango da protagonista egun horretan: «Gure garaia delako, alderdiaren garaia; eta alderdia geu gara, alderdikideak». Mireia Zarate EBB Euzkadi Buru Batzarraren idazkariak eta EGIko hainbat kidek aurkeztu zuten ekitaldia, atzo.

Jeltzale izatearen «harrotasuna» aldarrikatuko dute, eta militantzia batzeko aukera baliatu: «Gure ibilbideaz harro gaudelako: harro gaude gure ordezkariez, baina, batez ere, gure jendeaz, gure alderdikideez, gure militantziaz, EAJ osatzen duten guztiez».

Forondan biltzeko deia egin diete alderdikideei, «inoiz baino batuago egoteko» egun horretan. Izan ere, alderdiarentzat garrantzitsua izango dela adierazi zuten, ez soilik EBB Euzkadi Buru Batzarreko kideak aukeratzea tokatuko zaielako, baizik eta hurrengo urteetarako ildo politikoa zehaztea egokituko zaielako. Eta, hain zuzen, batuta eta ahaldunduta heldu nahi diote lan horri: «Denok egon behar dugu bertan, indarberrituta atera gaitezen Forondatik; ilusioz, indarrez eta gogoz beteta hel diezaiogun Batzar Nagusiraino eramango gaituen barne prozesuari».

**Aldarrikapena eta festa**

Azterketa politikoa egiteaz gain, irailaren 29an Forondan antolatu duten ekitaldiaren xehetasunak eman zituzten atzo. Ohi bezala, festa eta aldarrikapena uztartuko dituzte, eta haurrentzako eta helduentzako ekintza ugari izango dira: puzgarriak, *jumping* gunea, zinema, tirolina, rokodromoa, paintballa, herri kirolak, erromeria, disko festa...

Jai guneak 130.000 metro koadro izango ditu, 25.000 metro koadro hartuko dituzte karpek, eta gainerakoa aparkalekuetarako eta zerbitzuetarako erabiliko da. Gutxi gorabehera 20.000 bazkari zerbitzatzea espero dute. Denera 90 bat boluntario ari dira antolaketa lanetan. ●




**FORONDA.** Atzo egin zuten aurkezpena. BERRIA

# Kattalin Elizalde kolegioa estreinatu dute Senperen, 114. ikastola

- Seaskako bosgarren kolegioa estreinatu dute. **131 ikaslerekin** ireki ditu ateak, aurten.
- Ikastolen Elkartea aukeraz baliatu da ikasturte hastapeneko ekitaldi nagusia egiteko.

**Iñaki Etxeleku**

SENPERE— Ikastolen Elkarteko 114. ikastola da Senpereko Kattalin Elizalde kolegioa. Seaskarentzat, 39.a. Urte bat du eraikin berriak, eta haren aitzinean egin zuten estreinatze ekitaldia, atzo goizean. Euskadiko Orkestra Sinfonikoko Itziar Prieto eta Ortzi Oihartzabal biolin jotzaileek ireki zuten ekitaldia, musikaz. Ikastoletako, euskalgintzako eta kulturgintzako ordezkariak, hezkuntza eta gizarte eragileak, sindikatu eta alderdi politikoetako ordezkariak, eta hautetsi andana bildu ziren kari horretara.

Nekane Artolak hartu zuen hitza lehenik, Ikastolen Elkarteko buruak, ikastolen kooperatibak ikasturte hasierako ekitaldi nagusirako aprobetxatu baitu kolegio berriaren estreinaldia. Ekainaren 22an Iruñean egin batzar orokorrean hartu erabakiak oroitarazi zituen Artolak: «Burujabetza teknologikorantz jotzea, ikasleen euskara mailan eta euskal kulturaren ezagutzan eragitea, eta ikastoletako profesionalei soziolinguistikako formazioa ematea euskarari dioten atxikimendua indartzeko», besteak beste.

Horrez gain, elkartekoek nahi dute ikastolak aukera erreala izatea Euskal Herriko familia guztientzat, eta bereziki «zaurgarriak direnentzat». «Herritik jaio ginen, eta herriari zor gatzaizkio», adierazi zuen Artolak, eta elkarlanerako deia zabaldu. «Herri hau eraikitzen jarraituko dugu hezkuntzatik eta euskaratik abiatuta», bukatu zuen.

Mixel Bidegain Kattalin Elizalde kolegioko buraso eta lehendakariak bukatu zuen ekitaldia, hitz bakarraz laburbilduz erran gogo zuena: «Milesker». Kolegioa zutik ezartzeko parte hartu zuten guztiei igorri zizkien eskerrak. Bereziki eskertu zuen kolegio berriko zuzendari Iñaki Lekuona. Duela urte bat 82 ikaslerekin sartu ziren haia-haia kolegio berrian, eta irail honetan 131 ikaslerekin abiatu dute ikasturtea. «Urte bateko gibeltasunarekin, biziki pozik gara hemen izateaz, baldintza biziki onetan», azpimarratu zuen Bidegainek. «Harrotasuna» ere aipatu zuen, Senpere aldeko herritarren arteko eragile bilakaturik.

## Hautetsiak, beti alde

Kolegioaren estreinaldi ekitaldia oren bateko berantarekin hasi zen, kolegioen diruztatzea betekizunetan duen Departamendu Kontseiluko lehendakari Jean-Jacques Lasserreren beha egon baitziren.

Lasserre agertu artean, Jean-Rene Etxegarai Euskal Elkargoko lehendakariari utzi zioten hitza. Ikastolen «etengabeko hazkundea» aitortu zuen Etxegaraik. Kattalin Elizalde Seaskako bosgarren kolegioa da, eta oroitarazi zuen Beñat Etxepare lizeoa jada ttipiegia bihurtu dela. Jakinarazi zuen lizeoa dagoen gunean eraikinen handitzeko baimena eman berri duela gutun bidez: «Handitze horri bide emateko, bai Baionako Herriko Etxea bai Euskal Elkargoa hor izanen dira».

Gero, Ipar Euskal Herriko bilakaera demografikoa izan zuen hizpide Etxegaraik. Sortze tasa apalaren ondoan, kanpotik etorri jendearekin den balantza demografiko positiboa goraipatu zuen. «Kanpoko ekarpenik gabe, demografia apalduko litzateke». Ikastoletako burasoen artean etorri berri horietarik ere badela adierazi zuen Etxegaraik, eta euskarari rol bat ikusi dio: «Euskara kohesio eragilea da gure lurraldean. Itsua edo elkorra behar da izan horri ez ohartzeko».

Erakutsi nahi izan du badakiela erakunde publikoek beren egitekoa badutela. «Esku hartzea sekula baino gehiago indartu behar dugu hizkuntza politikan». Elkargoko buruak beste behin erran zuen EEP Euskararen Erakunde Publikoko aurrekontua handitu behar dela.

## EEPren etorkizunaz

Jean-Jacques Lasserre Paueko Departamendu Kontseiluko buruak nolabait iharduki zuen bere hitzartzean —departamendua da EEPko bere zatia emendatu nahi izan ez duen bakarra—. Gogoratu zuen departamenduek ezin dutela gehiago zergarik altxatu, aurrekontu murriztuak dituztela eta lehentasuna gizarte politiketan dutela. EEPren auziari begira, Senperen bildu entzuleei erran zien «biziki jenatuak» direla, baina Lasserrek dudak kasatu nahi izan ditu euskarari dagokionez: «Helburu bera dugu».

Mementoko pentsaketa bat ere bota zuen, erakunde publikoek duten hizkuntza politikaren antolaketari loturik: «Berdin, tenorea da gogoeta sakon bat abiatzeko [euskarari] eman beharreko ahalei buruz». Hogei urteko ibilmoldearen ondotik, «eredu berarekin segitu behar ote da?», galdetu zuen Lasserrek. «Egiturak atxiki behar ote dira horiek beren burua galdekatu gabe?». Ez zuen zehaztu EEP erakundeaz mintzo zenez; eta Maider Behotegi bere gehiengoko departamendu kontseilari eta EEPko lehendakaria ez zen hor, erantzuteko.●



Nekane Artolaren hitzaldia, Kattalin Elizalde kolegioaren estreinatze ekitaldian, atzo. GUILLAUME FAUVEAU








# Araban egin nahi dituzten proiektu fotovoltaikoak salatu dituzte herritarrek

→ Horrela Ez eta Gorbeialdea Defendatu herri plataformek ekintza sinbolikoa egin dute.

→ **411 gurutze jarri dituzte** Lubinaoko lursail batean, «Araba osoaren ordezkari gisa».

**Isabel Jaurena**

«Energia berriztagarriak etorkizun jasangarri baten funtsezko osagai dira, baina ez kosta ahala kosta, ez nolanahi. Gure ustez, premiazkoa da erakundeek, herriekin batera, gure paisaiak, kultura eta bizimodua errespetatuko dituen eredu bat diseinatzea». Adierazpen irmoa egin dute Arabako Horrela Ez eta Gorbeialdea Defendatu herri plataformek. Azaldu dute joan den hilabete hasieran Eusko Jaurlaritzak 22 «poligono fotovoltaikoren» proiektuak argitaratu zituela, eta horien xedea ez dela Arabaren «garapen iraunkorrari» bide ematea. Kontrara, salatu dute «etekin ekonomikoa» dutela helburu, «landa ingurumenaren eta nekazaritza ingurumenaren kaltetan».

Proiektu horien kontra daudela erakusteko, herri plataformek agerraldia egin zuten atzo, Lubinao kontzejuan, Araban. Ekintza sinboliko batekin irudikatu zuten salaketa: 411 gurutze jarri zituzten herriko lursail batean, «Araba osoaren ordezkari gisa». «Ez gara besoak gurutzatuta geratuko industriak gure lurrak bereganatzen dituen bitartean deskarbonizazioaren mozorropean, benetako konpromisorik gabe trantsizio energetiko ez-espekulatibo eta justu bat aurrera eramateko».

Erran zuten gisa horretako proiektu fotovoltaikoak gero eta gehiago direla, baina lurraldea ez dagoela salgai: «Amore ematen ez duzuen bitartean, aurrean izango gaituzue». Haien irudiko, egungo egoerak argi erakusten du administrazioak ardatz gisa hartutako energia ereduak ez dituela «errespetatzen eta ulertzen landa eremuaren errealitatea eta ingurumenaren eta gizartearen balioa».

**Zubiak eraiki**

Eusko Jaurlaritzari eta Arabako Foru Aldundiari ere igorri zieten mezua: «Zubiak eraiki nahi ditugu». Hausnarketa eredu partekatu baten alde egin nahi dute, eta energia eredu bat adostu. Betiere, energia berriztagarrietarako trantsizioa «arduratsua» izan dadin, eta ingurumena eta jendea «errespetatu» ditzan.

Ordea, salatu zuten administrazioa «mezu kontraesankorrak» igortzen ari dela, herritarrak «enganatzeko eta proiektuen aurkako erresistentzia ahultzeko». Baina ez daude etsitzeko prest: «Herritarrak informatuta eta prestatuta gaude». ●

## HITZ GUTXITAN

### Raquel Marti: «Segi Gazari buruz hitz egiten»

TUTERA— «Ez gaitezen ohitu Gazan gertatzen ari den horretara». Raquel Martiren hitzak dira, UNRWA Palestinar iheslariei laguntzen dien agentziako zuzendariarenak. Tuteran izan zen atzo, Nafarroako Gobernuak omenaldia egin baitzion UNRWAri. Aurrerantzean ere Palestinaz hitz egiteko deia egin zuen.

### Ekaitzek gogor jo dute Nafarroako herri batzuetan

IRUÑEA— Eltzaburun (Ultzama) metro koadroko 96,4 litro euri bota zituen hiru orduko tartean, atzo arratsaldean, eta urak hazita ibili ziren han, Auzan, eta Ultzaman. Sakanan, A-10 autobidea itxi zuten Arakil parean, urak hartu zuelako. Iruñean, berriz, festetako ekitaldi batzuk bertan behera utzi zituzten.

### Pastor eta Cordero omendu dituzte Donostian

DONOSTIA— Antonio Pastor eta Moises Cordero guardia zibilak hil zituen ETAk 1979an, eta horiek omendu zituen atzo Donostiako Udalak. Herrerako Guardia Zibilaren komisariako atarian hil zituzten, eta leku berean omendu ditu udalak, nahiz eta komisaria hori eraitsita dagoen aspaldidanik.



Etxabarria eta Martinez, atzo, Gasteizen. ENDIKA PORTILLO / FOKU

### Eusko Jaurlaritzak eta Gasteizko Udalak COVID-19aren biktimak omendu dituzte

GASTEIZ— 8.000 pertsonak baino gehiagok galdu zuten bizia COVID-19ak jota Araba, Bizkai eta Gipuzkoan, eta horiek omendu zituzten atzo Gasteizko Sempervirens parkean. Alberto Martinez Eusko Jaurlaritzako Osasun sailburua eta Maider Etxebarria Gasteizko alkatea izan ziren ekitaldian, eta loreak eskaini zizkieten biktimei, haien omenez landatutako sekuoiaren azpian.




Gasteizko Probintzia plazan egin zuten omenaldia, atzo. BERRIA

### Lore eskaintza egin dute Gasteizen, frankismoak Araban hildakoen omenez

**MEMORIA**— 1936ko irailaren 18an hil zuten tropa frankistek Teodoro Olarte Arabako Aldundiko Kudeaketa Batzordeko lehendakaria, beste bi diputaturekin batera. 88 urte igaro dira egun hartatik, eta lore eskaintza egin zuten atzo frankismoak Araban errepresaliatu eta hildakoen omenez. Gasteizen egin zuten ekitaldia, *In Memoriam* monolitoaren aurrean.

# Argentina, koloniaren garaira itzultzen

RIGI sistemaren bitartez, Argentinako Gobernuak baldintzak samurtu dizkie herrialdean inbertitu nahi duten multinazionalei. Eskatzen zuten guztia eman diela salatu dute kritikoek, eta ingurumenari eta industria propioari kalte egingo diela.



Edukiontziak Buenos Airesko portuan, artxiboko irudi batean. ENRIQUE GARCIA MEDINA / EFE

**Cecilia Valdez**

Javier Milei Argentinako presidenteak jada badauka atzerriko inbertsioak erakartzeko tresna bat. Inbertsio Handietarako Pizgarrien Erregimena izenekoa da, gaztelerazko RIGI laburduraz ezaguna. Joan den abuztuaren amaieran onartu zuen, Oinarrien Legearen barruan, eta, haren bitartez, 30 urtez zerga eta tasa txikiagoak eskainiko dizkiete Argentinan 200 milioi dolarretik gorako inbertsioak egiten dituztenei, honako sektore hauetan: basogintza, turismoa, azpiegiturak, meatzaritza, teknologia, siderurgia, energia, petrolioa eta gasa.

Argentinako Gobernuaren arabera, RIGIren bitartez garapen ekonomikoa handituko du, lehiakortasuna handitu, eta esportazioak ugaritu. Baina kritika asko ere entzun behar izan ditu, askoren ustez herrialdea lehengaien esportatzaile huts bat bilakatzeko arriskua duelako, eta balitekeelako enpresa multinazionalen esku uztea sektore osoak, bertako sistema ekonomikoari onura gutxi utzita.

Erregimenak erabat liberalizatu nahi du merkatua, eta Argentinako Gobernuaren eta probintzietakoen esku hartzeak ahalik eta gehiena murriztu, azken horiek diren arren baliabide naturalen jabeak. Aldi berean, esportaziorako eta inportaziorako prezioak parekatuko ditu. Horren bitartez, herrialde barruko prezioak nazioarteko merkatuetakoak izango dira, eta Argentinako kontsumitzaileek petroliorik ez duten herrialdeetakoen prezioan ordainduko dute erregaia.

Multinazionalak erakartze aldera, hainbat neurri ditu RIGI erregimenak: enpresek ordaintzen duten irabazien gaineko zerga %35etik %25era txikituko da, ordaindutako BEZa bizkor itzuliko zaie, egindako esportazioengatik ez dute tasarik ordainduko, eta 30 urtez bermatuko zaie ez dagoela aldaketarik haien gaineko zergetan eta aduana kontuetan.

### Espero zenaren gainetik

Atzerriko konpainiek eskatzen zutenaren gainetik dago Mileik emandakoa. Izan ere, RIGIn eta hidrokarburoen sektorean araudian egin diren azken aldaketak multinazional horiei beraiei aholkatzen dieten talde juridikoek idatzitakoak dira. Gehienez zer lortu nahi zuten jarri zuten mahai gainean, ondorengo negoziazioetan fintzeko, baina azkenean proiektuek ia-ia eztabaidarik gabe egin zuten aurrera, ez baitzen benetako negoziaziorik egin.

RIGIren aurretik ere zenbait zerga abantaila bazituzten energia sektoreko proiektu handiek, hala nola GNL gas natural likidotuaren plantak (Petronas-YPF), gasbideen hedapenak (TGS), Vaca Muertako eta Palermo Aikeko hobien ustiakuntzak (CGC-YPF), eta kobre, litio eta potasio meategi berriek. Orain, onura horiek handitu egingo dira.

Baliabide naturalen jabeak probintziak direnez, haien esku dago RIGI sistemarekin bat egitea ala ez. *El Cronista* egunkariaren arabera, probintziak oso zatituta daude. Baiezkoa eman dute Rio Negro, Mendoza, Chubut, San Juan, Jujuy eta Tucuman probintziek, eta zer egin aztertzen ari dira Cordoba, Buenos Aires Hiria eta Santa Fe. Buenos Airesko probintziak, Panpak eta La Riojak, berriz, dagoeneko iragarri dute ez direla sisteman sartuko. Buenos Aires probintzia, zeina peronisten esku baitago, bere sistema propioa lantzen ari da.

### Aurrekariak

Kanpoko inbertsioak erakartzeko antzeko erregimenak jarri dituzte indarrean Hego Amerikako beste herrialde batzuek, hala nola Txilek eta Peruk. Baina sektore jakin batzuetarako mugatu dituzte, hori baita, aditu askoren arabera, halako sistemek ongi funtzionatzeko baldintzetako bat. Argentinan, ordea, industria mota askok baliatu ahal izango dituzte pizgarriak.

Ingurumenaren gaineko kezkak eragin ditu RIGI sistemak. Enrique Viale Ingurumen Abokatuen Argentinako Elkarteko presidentearen arabera, kezkagarriena ez da legeak ez aipamenik egitea ingurumenari, baizik eta eredu estraktibista «paroxismoraino» eramaten duela. Argentina Espainiaren kolonia bat zen garaira itzultzen du, haren iritziz, eta gerta daitekeen «arpilatzea», garai modernoetan, soilik Nigerian eta Angolan ikusi izan da.

RIGI eta hidrokarburoen sektorea arautzen dituen araua dira Oinarrizko Legearen (Ley de Bases) puntu nagusietako bi. Haien ondorioz, egiturazko aldaketa bat egingo da Argentinako erregai fosilen industrian. Orain arte, petrolioa eta gasa ustiatzearen helburu nagusia zen Argentina bera hornitzea. Baina, Alfredo Zaiat ekonomistak nabarmendu duenez, litekeena da Mileiren politikak hankaz gora jartzea eskema zahar hori, eta Argentina petrolio eta gas esportaziorako plataforma handi bat bilakatzea. Izan ere, hidrokarburoak ustiatzen dituzten enpresen esku geratuko da zer egin haiekin, eta, barne merkatuan eta atzerrikoan prezioak berak izanik, esportazioa hobetsiko dute. ●

# Zulatu, maitea, zulatu



GEURE KONTU
Iker Aranburu

Azken asteetan gasolindegira joan direnek poz txiki bat izan dute. Garestitu beharrean, behera doa gasolinaren eta gasolioaren prezioa, eta, horrenbestez, euro batzuk aurreztu dituzte auto eta kamioi gidariek. Norbaiti eskerrak emateko gogo handia izatekotan, ez diezazkietela Repsoli, Totali edo Eroskiri eman, haiek petrolio merkatuaren gorabeherak besterik ez dituztelako islatzen, *bihar eta berandu* gainera. Erregairen merkatzeak protagonista nagusi bat du: Ameriketako Estatu Batuak.

Etxe Zuriko giltzak berreskuratzeko ahaleginean Donald Trumpek baliatzen dituen argudioetako bat da berarekin alfonbra gorria izango dutela petrolio konpainiek. «*Drill, baby, drill*» oihua darabil bere mitinetan («zulatu, maitea, zulatu»), erakutsi nahian oraingo administrazioa traba baizik ez dela izan erregai fosilen industriarentzat.

Eta egia da energia berriztagarriak sustatzeko ahaleginetan, Joe Bidenek izan dituela tirabira batzuk petrolio konpainiekin, baina are egia handiagoa da tirabira horiek ez dietela oztopo handirik eragin: AEBetako hidrokarburoen industriak inoiz baino gehiago ekoizten du.

Petrolioaz pentsatzean, ohikoa izaten da Arabiako xeke baten tunika eta zapi zuria burura etortzea, baina JR Ewing modernoen antzera, cowboy txapela dute petrolioaren gaur egungo nagusiek. AEBak izan dira azken urteetan petrolio gehien ekoitzi duen herrialdea, alde handiz gainera: iaz, batez beste, 19,3 milioi upel atera ziren egunero herrialde hartatik, munduko ekoizpenaren %20 ,1. Oso atzean ditu Saudi Arabia (%11,8) eta Errusia (%11,5). Are gehiago: 2013tik 2023ra izan den ekoizpen gehigarri guztia, hamar milioi upel, AEBei esker gertatu da.

Petrolio horren zati handi bat Permian izeneko eskualdetik dator, Texastik Mexiko Berrira zabaltzen den basamortu itxurako lautada batetik. Frackingaren teknikaren bitartez ustiatzen dute hango lurzoruan harrapatuta dagoen gasa eta petrolioa, eta horrek badu ezaugarri bat: behin zulatzen hasita, agortu arte zulatu behar dela. Hau da, ezin dela ekoizpena geratu prezioa asko apaltzen bada.

Hori ari da gertatzen gaur egun —azken asteetan %25 merkatzera iritsi da, baina ostegunean eta ostiralean berriro egin du gora—, eta asko estutu ditu konpainien irabaziak, baina *drill, drill, drill* jarraitzen dute. Are gehiago, hurrengo hilabeteetan ekoizpena gehiago handituko dela espero dute, azken hilabeteetan erdizka ustiatutako putzu batzuk ekoizpen betean hasiko direlako. Kontua da petrolioaz ez ezik, gasa ere ateratzen dela Permiango putzuetatik, baina, 2018az geroztik ekoizpena hirukoiztu denez, merkatua eta azpiegiturak ez dira gai izan dena xurgatzeko. Ondorioz, prezioak amildu dira, eta udan negatiboak ere izan dira —ekoizleek ordaindu dute gas hori gainetik kentzeko—.

Baina egoera aldatzera doa orain, gasbide berri bat irekitzera baitoaz gasa Mexikoko golkora bideratu eta handik esportatzeko. Behin martxan dagoenean, hilabete batzuetan gehiago handituko da Permiango ekoizpena, eta horrek gehiegizko produkzioa eragingo du munduan. Noiz arte? Prezioak gehiegi jaitsi eta putzu berriak zulatzea errentagarria ez den arte.

**Kartelaren ezina.** AEBetako ekoizpena handitzeak agerian utzi du beste ekoizleak ez direla gai merkatua kontrolatzeko. Garai ez oso urrun batean, LPEE Lurralde Petrolio Esportatzaileen Erakundearen doinura egiten zuen dantza sektoreak. Baina, orain, Errusiaren eta beste batzuen laguntza izan arren, LPEE + talde berria huts egiten ari da prezioa finkatzeko ahaleginetan.

Iazko udaberrian, ekoizpena gutxitzeari ekin zioten kartelak eta haren aliatuek, Brent upela ehun dolarrean salerosten zela ziurtatu nahian. Huts egin eta 90 dolarrean jarri zuten muga, baina horretan ere huts egiten ari dira. Azken asteetan 70 dolarren bueltan aritu da.

Horiek horrela, merkatu kuota berreskuratzeko ekoizpena pixka bat handitzeko asmoa zuten orain. Prezioen jaitsierak, ordea, iturria erdi itxita uztera behartu ditu. Eta haiei sartzen ez zaien dirua AEBetako ekoizleen patriketara sartzen ari da. ●



Bakarrizketa

## Arrakasta tuperrean ere iraungitzen denean

Irune Lasa

Aurrena izateak ez du arrakasta bermatzen, ezta arrakastak ere aurrena izatea. .

**1 | Erruki, mesedez: igandea da. Horrelako esaldi sakonik ez.**
Bai, agian sakonegi jarri naiz tuperrez hitz egiteko, kontatzeko Tupperware konpainiak porrot egin duela.

**2 | Tupperware, *tuperbare*, tuper... Hara! Ez nekien marka bat zenik.**
Tupperware izan zen lehena elikagaiak iraunarazteko eta garraiatzeko plastikozko kutxak merkaturatzen AEBetan, 1950eko urteetan. Hainbestekoa izan zen arrakasta, markaren izena produktuaren izen generikoa bihurtu baita munduko hainbat bazterretan, baita euskaraz ere.

**3 | A bai, klinexekin bezala.**
Adibide asko daude. Klinexak (Kleenex marka), belkroak (Velcro), jeepak, post-it orriak, zeloa (Celo), aspirinak (Aspirine), baselina (Vaseline), jacuzziak...

**4 | Zuk esan bezala: horiek aurrenak izan ziren, eta arrakasta itzela izan zuten, hiztegietan sartzerainokoa.**
Baina arrakasta lizundu daiteke, nahiz eta tuperrean sartu. Egia da Tupperwarek arrakasta izan zuela zenbait hamarkadaz, batez ere Tupperware festengatik. Enpresaren sortzailea eta jabea Earl Tupper zen, baina Brownie Wise emakume dibortziatuaren ideia izan zen haiek etxekoandreei erakusteko festak antolatzea bere etxean. Salmenta handiak zituztela ikusita, emakume gehiago errekrutatu zituen gauza bera egiteko, eta salmenta sare handi bat antolatu zuen AEBetan. Hala ere, 50eko urteen amaieran, Tupper eta Wise haserretu egin ziren, eta Tupperrek enpresa saldu zuen, Wise kaleratu eta gutxira. Konpainiak, hori bai, aurrera jarraitu zuen.

**5 | Eta zergatik egin du porrot?**
Hozkailuan denbora gehiegi egin zuen Tupperwarek; esan daiteke arrakastaren goxotasunean lo hartu zuela; batetik, festa bidezko salmentekin jarraitu du; hori izan du produktuak merkaturatzeko bide nagusia duela oso gutxira arte, eta, bitartean, garaiak aldatu egin dira, besteak beste etxeko lanetan soilik aritzen diren emakumeak gutxiengoa direlako orain; gaur egun, tuperrak eta halakoak dendetan, supermerkatuetan eta online erosten ditu jendeak. Hor Tupperware ez da aurrean ibili.

**6 | Zerbait saltzeko etxeko festa batera joatea... ez da arraro samarra?**
Bai, nahiz eta garai batean normalagoa zen hori egitea edo norbait zure etxera etortzea xurgagailua erakutsi eta saltzera. Dena den, Tupperwarek ikuspegi aldetik egindako huts horri beste bat ere gehitu behar zaio: lehiakideek, Tupperwarek ez bezala, produktuak hobetzen jarraitu dute, kutxa arinagoak edo merkeagoak ekoitziz, edo kristalezko modelo *osasuntsuagoak* merkaturatuz. Negozioetan maiz gertatzen da hori, hau da, aurrenaren atzetik datozenek arrakasta handiagoa izatea gerora, hobeto egokitu direlako aldaketetara. ●

# Bi hilabeteko blokeoaren ondoren, eskuinera lerratutako gobernu bat osatu dute Frantzian

→ Michel Barnier lehen ministroak proposatutako gobernuaren aurkako **protestak** izan dira herrialde osoan; **Macron kargutik kentzeko** aldarriak nagusitu dira horietan.

**Maddi Iztueta Olano**

Michel Barnier Frantziako lehen ministro izendatu berriak hiru aste behar izan ditu Emmanuel Macron Frantziako presidenteak irailaren 5ean eskatutakoa bete eta gobernu bat osatzeko. LR Errepublikanoak alderdiko politikariak macronisten eta eskuineko alderdien sostengua lortu du horretarako, eta hala jakinarazi zuen, atzo iluntzean, Eliseoko bozeramaile Alexis Kholerrek. Uztailaren 7an Asanblearako bozak egin eta bi hilabeteko blokeoa izan ondoren, eskuinera lerratutako gobernu bat osatu dute Frantzian.

Gobernu berriko pisu handieneko ministerioei dagokienez, LRko Bruno Retailleau izango da Barne ministroa —hortaz, hark izango du migrazioaren ardura ere—, Modemeko Jean-Noel Barrot Atzerrikoa eta Antoine Armand macronista Ekonomiakoa. Bestalde, zenbait macronistak aurreko agintaldian izandako karguei eutsiko diete, hala nola Sebastien Lecornu Defentsa ministroak. Bihar egingo dute ministroen lehenengo bilkura, 15:00etan.

Aukeraketa batzuek, ordea, barne ika-mikak eragin dituzte gobernuan parte hartuko duten talde parlamentarioetan, besteak beste Modemen, iritzita Barnierrek izendatutako zenbait ministro eskuin muturrekoak direla, hala nola Retailleau eta Laurence Garnier. Frantziako hedabideek azken egunetan kaleratutako informazioaren arabera, Barnierren asmoa zen Garnier Familia ministro izendatzea, eta horrek kritika ugari eragin zituen, sexu berekoen arteko ezkontzaren aurka baitago. Azkenean, Estatu idazkaria izango da.



**PROTESTA.** Frantziako gobernu berriaren aurkako protesta bat, atzo, Parisen. ANDRE PAIN / EFE

Agintaldian gidalerro izango dituen lehentasunei dagokienez, frantziarren «bizi kalitatea» hobetu asmo du Barnierrek, lehen ministroaren bulegoak komunikatu baten bidez iragan ostegunean adierazi zuenez, eta, horretarako, saiatuko da zerbitzu publikoen funtzionamendua hobetzen; batez ere, hezkuntzarena eta osasunarena. Horrez gain, herritarren «segurtasuna bermatzea» izango da harentzat erronka handienetako bat, eta migrazioa «kontrolatzea» izango du agintaldiko helburuen artean.

Ezkerreko koalizioak birritan leporatu die bai Macroni bai Barnierri «demokraziaren aurkako kolpe bat» ematea, argudiatuta NFP Fronte Popular Berriak lortu zuela eserleku gehien iragan uztailaren 7ko Frantziako Asanblearako bozetan, eta, hortaz, koalizio horretako norbaitek izan behar lukeela lehen ministro. Antzeko kritika bat egin zuen atzo Frantzia Intsumisoa alderdiko eurodiputatu Manon Aubryk, Macroni egotzi baitzion «estatu kolpe bat» ematea eta «ultraeskuinera» lerratzea: «Herrialdea gobernatzeko modurik onena bihurtu da bozak galtzea».



«Barnierrek ez dauka etorkizunik. Ez du gainditukо zentsura mozioa. Horra egia»

**JEAN-LUC MELENCHON**
Frantzia Intsumisoa alderdiko burua

Hala, ekologisten eta ikasleen eta feministen mugimenduen sostenguarekin, mobilizazioak antolatu zituzten atzo herrialde osoan; milaka herritar atera ziren kalera dozenaka hiritan, hala nola Parisen eta Bordelen. Macron kargutik kentzearen aldeko aldarriak izan ziren nagusi. Ezkerraren kritiken harira, Yael Braun-Pivet Frantziako Asanbleako presidente macronistak esan zuen «oreka bermatzen» ahalegindukо dela.

**Hurrengo erronka**

Gobernua osatuta, Barnierrek lortu du Macronen eskaera betetzea, baina ez du irudi kabinete horrek «egonkortasuna» eta «batasuna» bermatuko dituenik Frantziako politikan. Izan ere, ezkerreko koalizioak esana du Barnierren gobernuaren aurkako zentsura mozio bat aurkezteko asmoa duela, eta ikusteko dago gobernu berriak proba horri aurre egiteko nahikoa babes izango ote duen, horretarako ezinbestekoa bailukete RN Batasun Nazionala alderdi ultraeskuindarraren sostengua.

Frantzia Intsumisoko buru Jean-Luc Melenchonek asmo hori berretsi zuen atzo, alderdiak antolatutako protestetako batean, Marseillan, prentsari egindako adierazpenetan: «Barnierrek ez dauka etorkizunik. Haren patua da Frantziako Asanblean garaitua izatea, ez du gaindituko zentsura mozioa. Horra egia». ●

# Nahita edo nahi gabeko gerra bat



**LEKU-LEKUTAN**
Olatz Arrieta

Gaigalava Letoniako herriak 745 biztanle ditu, eta hara iritsi da Iranen egindako gerra drone bat. Burdinazko txoriak lehergailua zeraman, baina indargabetu egin dute, eta ez du kalterik eragin. Letoniako Gobernuaren arabera, Errusiatik Ukrainaren aurka jaurtitako dronea da, baina huts egin eta gero, nahi gabe, Bielorrusian barrena sartu da mugatik 85 kilometrora dagoen herrian, Gaigalavan.

Letoniako ordezkari militarrek NATOri eman diote, berehala, gertaeraren berri, dronea Errusiak nahita bidalitakoa ez dela izan azpimarratuta. Nahita edo nahi gabe. Hitzen aukeraketa erabakigarria da Ukrainako gerra Europan zabalduko den ala ez erabakitzeko. Dotrina ofizialaren arabera, NATOko lurraldera nahi gabe Errusiaren armak sartzea akats militarra da, baina nahita jaurtitzea erantzun beharreko eraso militar zuzena litzateke NATOrentzat.

Orain dela egun batzuk, Moskun, Ukrainatik bidalitako Mendebaldeko teknologiarekin egindako drone batek emakume bat hil zuen, eta hainbat eraikin hondatu zituen. Nahita egindakoa dirudien erasoari garrantzia kendu dio Errusiako Gobernuak, herritarrak ez izutzeko.

«Erasoren bat nahita izan bada ere, hobe nahi gabe izan dela esatea». Esaldi hori gai militarretan aritzen den aditu bati entzun nion Ukrainako inbasioa hasi zen urtean. Antza, inork ez omen du nahi gerra zabaltzerik. Ez NATOk, ezta Errusiak ere. Aliantza Atlantikoaren egoitzan, Bruselan, Errusiako aginte militarrarekin zuzenean komunikatzeko sistema daukate krisi uneetan, droneak eta beste arma batzuk iristen direnean gaizki-ulertuak ondo argitzeko. Pentsatu nahi dut Ukrainaren kontra zuzendutako erasoak NATOren lurraldera iristen direnean «nahi gabe izan da, ezta?» galdetuko duela Pentagonoko militarren batek. Eta Moskun dagoen soldaduak «bai, noski» erantzungo diola, auzia itxita utziz. Gerra Hotzaren garaian, telefono gorriarekin egiten zuten nahita edo nahi gabe izan den galdetzeko komunikazioa: Orain, baina, Washingtonen eta Moskuren arteko zuzeneko komunikazioan ez dago telefonorik, ordenagailuz komunikatzen dira bi aldeak, idatziz, mezua argi gera dadin.


Errusiako armadako bi soldadu eraso bat egiten, irailaren 17an. EFE

> Dronea noiz eta nola erabili gizakiek erabakitzen dute, batez ere. Laster, ordea, adimen artifizialaren esku utziko dute erabakia gerraren alde batean, baita bestean ere

Dronea noiz eta nola erabili gizakiek erabakitzen dute, batez ere. Laster, ordea, adimen artifizialaren esku utziko dute erabakia gerraren alde batean, baita bestean ere. Itxaropena daukat hori gertatu aurretik Ukrainako gerra amaitu egingo dela eta ez dugula Europa mailako gerra klasikorik izango. Beste gerra mota, hibridoa, jada bete-betean daukagu Europan: azpiegituretan sabotajeak egiten ari dira, eta desinformazio kanpainak erraldoiak dira, nahita. ●




## Junquerasek ERC «erreskatatzea» du helburu

BARTZELONA— Katalunian iragan maiatzean egindako parlamenturako bozetan hartutako kolpearen ondoren, hausnarketa prozesu betean dago ERC Esquerra Republicana, baita datorren azaroaren 30ean egitekoak diren ezohiko kongresu nazionalari begira ere; orduan erabakiko baitute nork hartuko duen alderdiaren presidentetza. Ekainera arte kargu hori izan duenak, Oriol Junquerasek, espero du berriro ere ardura horri heltzeko nahikoa babes lortzea, atzo iluntzean egindako agerraldian adierazi zuenez, eta esan zuen bere helburua ERC «erreskatatzea» dela.

Ezker Nazional Berriak ere atzo egin zuen agerraldia. Xavier Godas da talde horren hautagaia, eta, Kataluniako hedabideen arabera, hark ditu Junquerasi aurrea hartzeko aukera gehien.

## Israelek ostiralean Beiruten hildakoak 37 dira

BEIRUT— Libanoko Osasun Ministerioak atzo jakinarazi zuenez, Israelgo armadak 37 pertsona hil zituen herenegun Beiruten aurka egindako bonbardaketetan. Hezbollahren arabera, eraso horietan milizia xiitako hamasei kide hil ziren. Gazan, berriz, 22 pertsona hil zituen Israelek atzo, eskola inguru bat bonbardatuta.



**9**
**Musika.**
«Pop espiritualez» osatutako diskoa kaleratu du Elsa y Elmar musikari kolonbiarrak.



**11-12**
**Literatura.**
Diktadura garaian bahitutako Silvia Labayruren istorioan oinarrituta, 'La llamada' idatzi du Leila Guerrierok.

**berria**
2024ko irailaren 22a, igandea

# NASAN

Cate Blanchett, Donostia saria eskuan duela. GORKA RUBIO / FOKU

'Rumours' satira politikoa aurkeztu, eta **Donostia saria** jaso du **Cate Blanchettek**.

## Senaren «erregaiari» segika osatutako ibilbidea



«Zure lana estimatzen dutenean, sariek sakoneko esanahi bat dute. Ez ditut arinkeriaz hartzen»

«Onartutako pertsonaia bakoitza aurretik onartutakoaren antidoto bat da; ustekabean harrapatzen zaituzte»

**CATE BLANCHETT**
Aktorea



Cate Blanchett, atzo, Donostiara heldu berritan. JAVIER ETXEZARRETA / EFE

Bere ibilbide propioak «harritzen» duela aitortuta jaso du **Donostia saria** Cate Blanchettek.

# Blanchett: «Soiltasunak esfortzu itzela eskatzen du»

**Itziar Ugarte Irizar**

Cate Blanchett aurten heldu da lehenengoz Donostiako Zinemaldira, baina ez edonola: aurtengo kartel ofizialeko protagonista eta 72. aldiko Donostia sariduenetako bat baita. Jaialdiaren arabera, «zinematografia garaikideko interprete garrantzitsuenetako bat da» aktore australiarra, eta haren filmografia zabala da horren erakusgarri argiena. Martin Scorsese (*The Aviator*), David Fincher (*The Curious Case of Benjamin Button*), Alejandro G. Iñarritu (*Babel*), Woody Allen (*Blue Jasmine*), Todd Field (*Carol*), eta beste hamaika zuzendari entzutetsurekin egin du lan, eta filmez film osatu duen bide horrek bera ere harritzen duela onartu du Donostia saria jaso aurreko prentsaurrekoan: «Egin duzun lana estimatzen dutenean, sariek sakoneko esanahi bat dute. Ez ditut arinkeriaz hartzen; harritu egiten naute, baita nik zineman ibilbide bat egin izanak ere. Antzerkia izan da nire maitasun benetakoa; han, zuzen-zuzenean gertatzen da dena; zineman, ezin da jakin zenbat begi parek ikusi duten zure lana».

Ororen gainetik, aktore lanaren inguruan aritu da Blanchett (Ivanhoe, Australia, 1969); zeren arabera onartzen duen lan berri bakoitza —«senak eramaten nau, erregaia balitz bezala»—, zer arrasto utzi dioten jokatutako pertsonaia askotarikoek. «Hori modu inkontzientean gertatzen da», adierazi du. «Onartzen duzun pertsonaia bakoitza aurretik onartutakoaren antidoto moduko bat da, eta, zenbaitetan, heltzen zaizkizun lan eskaintzek ustekabean harrapatzen zaituzte, zugan ikusi dutelako zuk zerorrek ikusi ezin dezakezun zerbait».

Duela bi urte, Fielden zuzendaritzapean filmatutako *Tar* filma jarri du horren adibidetzat. Orkestra zuzendari baten rola jokatu zuen hartan Blanchettek, eta hura lantzea «mendi ikaragarri bat igotzea» izan zela kontatu du. «Nik ez nekien mendi hori nola igo; benetan larri nengoen. Urteen poderioz, baina, beldur hori emozio bihurtzen ikasi dut. Nahiago nuke geopolitikan ere hori gertatuko balitz».

Gozatu, zer pertsonaia jokatzen gozatu duen gehien galdetuta, antzerkira itzuli da aktorea, eta bere egin du berriki Clarice Linspector idazle brasildarrari irakurritako ideia bat: «Hark esaten du sinpleak diruditen gauzek prestakuntza handia behar dutela, eta ados nago. Soiltasunak esfortzu itzela eskatzen du».

### Merkelen larruan

Saria jasotzeaz gain, Guy Maddin eta Evan eta Galen Johnson anaien zuzendaritzapean egindako *Rumours* filma ere aurkeztu du Zinemaldian aktoreak. G7ko bilera bat dauka abiapuntutzat filmak, eta Alemaniako kantzilerraren rola jokatzen du bertan Blanchettek —Angela Merkel gogora ekartzen duen pertsonaia—. Ezusteko bideetatik garatzen den satira politikoa da, eta beste muturrean dago aurten estreinatu den Blanchetten beste lanetako bat: Alfonso Cuaronek zuzendutako *Dislaimer* telesaila. Bi kasuetan, baina, pertsonaia «bigarren mailakoa» iruditu zitzaiola azaldu du aktoreak, eta gehiago interesatu zaizkiola bi proiektuek proposatzen duten «ariketa formala».

2004ko *Coffee & Cigarettes*-en ostean, Jim Jarmuschekin lan egitera itzuli da berriki Blanchett —*Father, Mather, Sister, Brother* deituko den filmean—, eta zinema independentearen inguruan galdetu diote haren aitzakian. Zinema jaialdiek halako filmentzat duten zeresana azpimarratu du aktoreak: «Lehen bezala gaur, Jimentzat oso da zaila film bat egitea. Akaso, filma egiteko dirua lortu bai, baina gero film horiek ez dira ikusten. Zinemaldien zeregina benetan garrantzitsua da halako filmentzat, kontzientziazio moduko bat eragiten dutelako».

### «Ez naiz damutzen»

Maiatzean, Cannesko jaialdian, Blanchett Palestinako banderaren koloreak zituen soineko batekin agertu zen alfonbra gorrian, eta espero izatekoa zen hark sortutako polemikaren inguruan ere galdetuko ziotela Donostian. Hala erantzun du: «Ezin naiz biluzik agertu. Soineko hori eraman nuen, ez naiz damutzen. Giza eskubideen urraketa asko gertatzen dira, badugu haien berri, baina ezin ditugu ukitu ere egin. Mundua oso konplikatua da, eta protestarako eskubidea oso garrantzitsua da, ikuspuntu guztiak entzun ahal izatea. Hala ere, zauri asko daude nik alfonbra gorrian zerbait jantzita edo hemen zerbaiten aldeko adierazpenak eginda konpondu ezin direnak».

Klima larrialdiaren inguruan, bestalde, aktoreak azpimarratu du zinemaren industriak «modu jasangarriago batean lan egiteko» urratsak egin beharko lituzkeela —«klima hondamendia hor dago, baina aldaketak oso mantso egiten ditugu»—; eta *Carol* filmean jokatutako rola gogoan —aktorearen interpretazio ikonikoenetako bat—, LGTBI komunitatearen ikusgaitasunean «poliki, baina aurrera» egin izana txalotu du. «Berdin gertatzen da inklusibitatearekin. Edozertaz ari garela ere, ez da aldaketarik egongo dena homogeneoa baldin bada». ●

# Euskal zinemaren kalitatearen aldarria egin du 'Tasio' filmak

Donostiako 72. Zinemaldiko Klasikoak saila inauguratu du 'Tasio' filmak. Lan horren zuzendari Montxo Armendarizek, hunkituta, filmaketan parte hartu zuten guztiak izan ditu gogoan; **Euskadiko Filmategiko saria jaso du** proiekzioaren aurretik.



*Tasio* filmeko aktoreak eta Montxo Armendariz zuzendaria, proiekzioaren aurretik.
—JON URBE /FOKU

Garbine Ubeda

Tasio zaharberrituak maiatzean egin zuen benetako estreinaldia, Cannesko zinema jaialdian, baina Donostiakoak jakin-min handia piztu du, estreinaldiak adinakoa; besteak beste, Zinemaldian berean ikusi zuelako argia duela berrogei urte, eta orduko hartan eragindako lilurak eta jasotako sariek —tartean, Zilarrezko Maskorra— Euskal Herriko zinemaren zedarri bihurtu zutelako filma.

Montxo Armendariz zinema zuzendariaren opera primak Anastasio Otxoa Ruiz (Zuñiga, Nafarroa, 1916-Valderrota mendia, 1989) ikazkin eta ehiztariaren bizitza eraman zuen fikziora 1984an, eta harekin batera, hainbat balio nabarmendu zituen, dokumentu etnografiko eta antropologikotzat ere jo zitekeen lan hartan: natura, iraupeneko ehiza, ofizio zaharrak, adiskidantza, herri txikien balioa, norberaren senari jarraitzeak duen garrantzia.

Armendarizek berak esana da «isileko askatasuna, arauen eta konbentzioen kontra ezkutatzen den askatasuna» dela filmaren funtsa. Beste hainbat balio ere gehitu zaizkio geroztik, batik bat urteotako gertaeren, aldaketen eta egoeraren ondorio; nagusiki ekologikoak —ingurumena zaindu beharra, basoaren garrantzia—, baina baita humanoagoak ere: esaterako, belaunaldien arteko transmisioaren garrantzia.

### Gazteei begira

Tasio zaharberritzeko asmoa Euskadiko Filmategian ernaldu zen. «Film horri, hain garrantzitsua izanik, beste bizialdi bat eman nahi genion», azaldu du Joxean Fernandez zuzendariak. Ez du ikustekorik, baina, duela berrogei urte batu zituen ikus-entzuleen nostalgiarekin. Dokumentua behar bezala jasotzeko eta teknika berrietara egokitzeko baino gehiago, helburu jakin bat betetzeko jarri zen martxan Filmategiko lantaldea: filma berriro pantaila handietara itzul zedin, eta, batik bat, «gazteengana hel zedin, harrapa zitzan». Hain zuzen ere, hori litzateke «politena», Fernandezentzat.

Zinemaldira heldu baino lehen izan dituen proiekzioak gogoan, buruan zerabilten «pokerra» bete dela azaldu du Filmategiko zuzendariak: «Cannesera joan da, pelikulak erakusteko leihorik onenera hain justu; gero, Bolognako II Cinema Ritrovato jaialdira, eta Donostiakoaren ostean, Lyongo Lumiere zinema jaialdira joango da». 2025ean, bestalde, Euskal Herrian ez ezik, Frantzian barrena ere ibiliko da, hango banatzaile batek proiekzio eskubideak erosi baititu. Fernandez pozik agertu da: «Orain logikoa iruditzen baldin bazaigu ere, lorpen hori ez zen batere agerikoa. Oso harro gaude».

Filma proiektatu den toki guztietan zirrara eragin duela azaldu du, gainera: «Cannesen esan ziguten Marcel Bagnolen tankera hartzen ziotela; Italian, Ermano Olmirena hartu zioten, eta beste zenbaitek azpimarratu digute Akira Kurosawaren edota Taviani anaien *Padre padrone*-ren usaina dariola». Fernandezek badu azalpenik horretarako: «Pelikula oso hemengoa da, baina era berean oso unibertsala, horregatik ulertzen da hain ongi atzerrian, emango zaizkion interpretazioak toki batetik bestera aldatuko badira ere».

### Pribilegioa

Montxo Armendarizek hitz apalak eskaini ditu Donostiako Zinemaldian, txalo zaparrada luzea jaso ostean eta filma proiektatu aurretik: «*Tasio* nire lehen film luzea izan zen. Zinema estudiatu gabekoa nintzen, eta grabaketan beldurtuta nengoen, eta oso urduri, gainera».

Duela berrogei urte batutako lantalde tekniko eta artistikoari eskaini dio bere eskerrik beroena: «*Tasio* honaino iritsi izanaren meriturik handiena haiena da: haien profesionaltasunik gabe ez zatekeen gauza bera izango». Grabatzen aritu ziren herrixketako biztanleen ekarpena ere «ordainezina» izan zela aipatu du, batez ere «eguraldiak laguntzen ez zuenean edo animaliek arazoak sortzen zituztenean, eta askotan gertatzen zen halakoren bat».

Berrogei urteren buruan Donostiako Zinemaldira berriz etortzea «pribilegioa» dela ere aitortu du, eta, halaber, «oso berezia eta hunkigarria» dela nabarmendu, filmaketan parte hartu zuten guztien izenean. Bere xerarik handiena, berriz, «jada ez dauden horiei» eskaini die, bereziki Elias Kerejetari eta Anastasio Otxoari, bizitza errealeko Tasio zenari.

Aldarri baten forma hartu dute Armendarizen azken hitzek: «Amaituko ahal dira gerra guztiak eta genozidio guztiak, behingoz bakean bizi ahal izan gaitezen».

Tasio Nafarroako Ameskoa eta Lana bailaretan grabatu zuten, Urbasa mendilerroaren magalean. Montxo Armendariz zuzendariaren esanetara, Patxi Bisquert, Amaia Lasa eta Paco Sagarzazu aktoreak aritu ziren, besteak beste. Elias Kerejeta ekoizleak bere gain hartu baino lehen, hainbat ezezko jaso zituen proiektuak. ●

# Inpunitatearen aurkako ekintza politikoa



‘Soy Nevenka’ aurkeztu du Iciar Bollainek Sail Ofizialean, politikari batek egindako sexu jazarpenean oinarritutakoa. Edward Bergerrek, berriz, ‘Conclave’ thrillerra erakutsi du.

**Mikel Lizarralde**

Hainbat hilabete eman ondoren Ponferradako Udaleko (Espainia) ogasun sailean zuen zinegotzi postura agertu gabe, 2001eko martxoan Nevenka Fernandezek komunikabideak deitu zituen bere herrira. Abokatua zuen ondoan, eta haren babesarekin kontatu zuen urtebetez Ismael Alvarez alkatearen (PPkoa) sexu jazarpena jasan zuela hala lanean nola handik kanpo. Hilabeteren buruan, salaketa jarri zuen epaitegietan, eta handik urtebetera iritsi zen epaia: Alvarezi zigorrik txikiena ezarri zioten sexu jazarpenagatik: 6.480 euroko isuna eta Fernandezi ordaindu beharreko 12.000 euroko kalte ordaina. Fernandezen salaketak oihartzun handia izan zuen komunikabideetan bere garaian, eta ez ziren gutxi izan haren sinesgarritasuna zalantzan jarri zuten kazetari ezagunak. Ponferradan bertan, areagotu egin ziren alkatearen aldeko babes agerraldiak, eta biktimak, azkenean, presio sozialak bultzatuta eta lanik aurkitzen ez zuela ikusita, Espainiatik alde egin behar izan zuen.

Kasua gertatu zenetik hogei urte baino gehiago igaro diren honetan, Iciar Bollain zinemagile espainiarrak *Soy Nevenka* aurkeztu zuen, atzo, Sail Ofizialean. Ondoan izan zituen bi protagonista nagusiak, Mireia Oriol eta Urko Olazabal, eta baita filmaren ekoizleak ere, Juan Moreno eta Koldo Zuazua.

Hain zuzen ere, ekoizleek Nevenka Fernandezen kasua film batean kontatzeko proposatu ziotenean, Bollainek bere buruari galdetu zion ea egokia izango litzatekeen istorio hura gaur egun kontatzea. Izan ere, dokumental batean (*Nevenka*) eta Juan Jose Millasen liburu batean (*Hay algo que no es como me dicen*) jasota zegoen Fernandezen kontrako jazarpenaren lekukotza dagoeneko, baina zinemagileak garbi ikusi zuen aurrera egin behar zuela proiektuarekin: «Aukera ematen zuen ikusteko gaur egun non gauden». Bollainek Isa Campo izan du lagun gidoia idazteko orduan, eta azken horrek ere filmaren egokitasuna nabarmendu zuen: «Aurrera egin dugu, baina mekanismo sozial batzuk hor daude oraindik ere».

Filma hainbat ikuspuntutatik planteatu zitekeen arren, Bollainek jazarpenean jarri nahi izan du arreta. «Zentratu gintezkeen epaiketan, baina ez, jazarpena detaile guztiekin kontatu nahi genuen. Eta nahi genuen ikusleak biktima laguntzea bidaia osoan». Horri lotuta, Campok argudiatu zuen batzuetan biktimaren bertsioa zalantzan jartzen dela oraindik ere: «Beti dago biktimaren bertsioa osorik kontatzea oztopatzen duen arrakalaren bat».

Alde horretatik, Bollainek «ekintza politiko» gisa definitu zuen filma, eta gogora ekarri zuen kasua ezagun egin zenean gertatutakoa: «Herri osoa irten zen erasotzailea babestera. Eta guk uste dugu arreta erasotzaile horren gainean jarri behar dugula. Filmak badu horretan laguntzeko asmoa ere».

**Gizonentzat**

Proiektu berri hau *Maixabel* filmak izandako arrakasta handiaren ondoren iritsi zaio Bollaini, eta, orduko hartan bezala, Koldo Zuazua euskal ekoizlearekin eta Urko Olazabal aktorearekin egin du lan. «Urko *Maixabel*-en ezagutu nuen, eta, castingera iritsi zenean, banekien eman zezakeela hoztasun puntu hori. Baina gizon populista baten rolean ikusi behar nuen. Interpretazio zoragarriak eman dizkigute bi aktoreek», aipatu du, Olazabalen eta Oriolen lana goraipatu nahian.



Euskal aktoreak aitortu du psikologiako eskuliburuak irakurri behar izan dituela Ismael Alvarezen lekuan jartzeko, «jazartzaileen patroiak» ezagutzeko, eta gizonengan jarri du arreta: «Konturatu naiz gure egunerokoan min handia egin diezaiekegula emakumeei. Gure existentziak berak emakumeak kutsatzen ditu». Horri lotuta, filma emakumeentzat, baina batez ere gizonezkoentzat dela iritzi dio Olazabalek: «Guretzat, ikasketa bat da; gure jarrerari buruzko ondorioak atera behar ditugu gizonezkook».

Oriolek, berriz, adierazi du emakume ugarik bizi izan duten egoera bat islatzen duela filmak, eta «bi Nevenka» erakutsi, jazarpenaren aurrekoa eta ondorengoa: «Egoera beldurgarri horren ondoren, puskatu egiten da. Haren duintasun zentzuari eusten saiatu naiz».



**«Jazarpena detaile guztiekin kontatu nahi genuen. Eta nahi genuen ikusleak biktima laguntzea bidaia osoan»**

**ICIAR BOLLAIN**
Zinemagilea

**Aulki jokoan Vatikanoan**

Pauso azkarrez eta arnasestuka sartu da eraikinera Lawrence kardinala; ustekabean hil da aita santua. Hatzetik eraztuna erantzi diote hilotzari, eta, berehala, ordezkoa hautatzeko prozesuaz hasi dira hizketan ohearen inguruan bildutako elizgizonak. Lawrenceri egokitu zaio konklabea antolatzeko ardura, eta prestaketetan hasi orduko heldu zaizkio lehen esamesa eta zurrumurruak belarrietara.



←Edward Berger zinemagile alemaniarrak *Conclave* erakutsi zuen atzo Urrezko Maskorra lortzeko lehian.
JON URBE / FOKU

↑Mireia Oriol, Iciar Bollain eta Urko Olazabalek *Soy Nevenka* filma aurkeztu zuten, atzo, Sail Ofizialean.
JON URBE / FOKU

Eta behin kardinalak Vatikanoan itxita, bata bestearen atzetik joango dira eztabaidak berotuz, botere borrokak gogortuz, konspirazioak saretuz, sekretuak azaleratuz eta anbizioak agerian geratuz. Eliza katolikoaren erritual zahar eta ezkutuenetako baten bueltan eraiki du *Conclave* thrillerra Edward Berger zinemagile alemaniarrak, eta Sail Ofizialeko lehian erakutsi. Kursaalen arratsaldean bildutako ikusleriak harrera beroa egin zion.

Robert Harrisen izen bereko nobela du oinarri filmak. Ralph Fiennes aktoreak jokatu du Lawrence kardinalaren rola —Stanley Tucci, John Lithgow, Isabella Rossellini eta Sergio Castellitto ere badaude antzezle taldean—, eta erabateko protagonismoa du haren pertsonaiak narrazio osoan. Emanaldiaren ostean Bergerrek azaldu zuenez, oso gogoko ditu pertsonaia batean zentratzen diren filmak, zeintzuetan «publikoa haren larruan sartzen den eta haren bidez bizitzen duen gertatzen ari den hori». Eta zehaztu zuen rol nagusirako Fiennes hautatu zutenean hasi zela filma zentzua hartzen. «Niretzat, oso garrantzitsua zen esaten ez den hori kontatuko zigun aktore bat aurkitzea. Pertsonaia isila da; asko behatzen du, asko pentsatzen, baina ez du askorik esaten, eta Fiennes bere ariman sartzen uzten digun aktore bat da, zer sentitzen duen ikusten uzten diguna, gardena».

Vatikanoa agertoki nagusi badu ere, filmaren gai nagusia ez da erlijioa, zuzendariak nabarmendu zuenez. «Film hau ez da erlijioari buruzkoa, baizik eta ateak ixten direnean izaten diren botere jokoen ingurukoa; berdin gerta daiteke politikan, edo enpresa munduan». Izan ere, trama bera baino garrantzitsuagoa iruditzen zaio Peter Straughanen gidoiak duen «bigarren geruza», zeina filmaren muina den, haren hitzetan. «Haren gidoietan beti badago istorio bat, baina bigarren mailakoa da; zerbait sakonagoa ere egoten da beti, eta, kasu honetan, zalantza da. Hori da film honen funtsa». ●

# Inolako ekarpenik egin gabe

**Urtzi Urkizu**

> **KRITIKA SAIL OFIZIALA**
>
> *'Soy Nevenka'*
>
> **Zuzendaria:** Iciar Bollain.
> **Aktoreak:** Mireia Oriol, Urko Olazabal.
> **Herrialdea:** Espainia.
> **Iraupena:** 110 minutu.

Duela 24 urte gertatu zen, Espainiako Ponferrada herrian: hango alkatea —PP alderdikoa— 24 urteko zinegotzi gazte bat jazarri zitzaion, sexu erasoak eta lan arloko bidegabekeriak tarteko. Nevenka Fernandez zuen izena emakume horrek, eta duela hiru urte bere istorioa kontatu zuen hiru ataleko dokumental batean: Netflix plataforman ikus daiteke *Nevenka* lana. Denbora gutxiren buruan iritsi da fikziozko filma, baina ez dio inolako ekarpenik egin dokumentalari. Lehendik jakina zen hori ageri da pantailan, eta horrez gain, antzematen da pelikula mimo handirik gabe egindakoa dela. Batzuetan ematen du dokumentalaren pasarteak platoan kalkatu direla, baina aparteko graziarik gabe.

Filmak hutsuneak ditu irudi eta errealizazio aldetik, eta nahiz eta kameren atzean Iciar Bollain eskarmentuduna aritu, gehiago du erdipurdiko telefilm batetik, zinema jaialdi batean lehian den pelikula batetik baino. Gidoi aldetik ere ez du funtzionatzen: batzuetan, morbo hutsera gerturatzen dela dirudi, errealitatean gertaera tragiko eta esanguratsu bat izan bazen ere. Agerikoa da istorioa beste zinemagile batek hartu izan balu beste toki batera eramango lukeela eta zinematografikoki beste eskaintza bat egingo lukeela, baina Bollainek errazkeriara jo du. Eta azken emaitza ez dago Nevenka Fernandezen istorioak mereziko lukeen tokian.

Filmaren bertute bakanetakoa Mireia Oriol eta Urko Olazabal aktore protagonisten lana da. Publiko zabalarentzat ezezaguna da Oriol, eta txukun jokatzen du emakume protagonistaren rola. Olazabalek, bestalde alkate matxista jazartzailearena egiten du; Bilbon jaiotako aktore horrek lortzen du pertsonaiak sorrarazi behar duen higuina ikusleari transmititzea. Baina Olazabalek eginak ditu lan hobeak azkeneko urteetan: esate baterako, Bollainek berak zuzendutako *Maixabel* filmean (2021). Bigarren mailako aktoreen artean, gorabeherak badira, eta ez dute denek lortzen pertsonaiak sinesgarri egitea. Edonola ere, film honen kalitatearen errua ez da nagusiki haiena.

Aipatzekoa da egileek inpunitatearen aurkako «ekintza politiko» gisa aurkeztu dutela *Soy Nevenka*, eta baliteke ikusle batzuengana ondo iristea, baina, forman ere, ekintzak indarra izan behar du, eta ausardia. Pelikula datorren astean iritsiko da Hego Euskal Herriko aretoetara, eta ondotik Movistar Plus plataformara, baina ez da nabarmenduko 72. Donostiako Zinemaldiko lan desberdin gisa.●

# Amen, Berger: bai fedea

**Urtzi Urkizu**

> **KRITIKA SAIL OFIZIALA**
>
> *'Conclave'*
>
> **Zuzendaria:** Edward Berger. **Aktoreak:** Ralph Fiennes, Stanley Tucci, John Ligow, Isabella Rossellini, Sergio Castellitto..
> **Herrialdea:** Erresuma Batua-AEB. **Iraupena:** 118 minutu.

Bitxikeria hau ez da filmean ageri, baina euskaraz argitaratua den lehen esaldia 1513. urtean azaldu zen, Erroman, Bartolome Torres Naharroren *Comedia Tinelaria*-n: *Bai fedea*, dio testuak. Hainbat hizkuntza nahasten dira obra horretan, eta *Conclave* filmak ere nahasten ditu hizkuntzak —ingelesa nagusitu arren—. Eta Erroma eta fedea aipatzen dituenak Vatikanora egin behar du bisita. Edward Berger zinemagileak izango zuen fedea: Robert Harrisek 2016an idatzi zuen izen bereko eleberria material ona izan zitekeela pelikula baterako. Ba kontua da *Conclave* indartsu hasten dela, Volker Bertelmannen musika boteretsuarekin, eta ikuslea harrapatzen duela amaierako kredituetaraino.

Ezer gutxi esan daiteke txarra Bergerrek ondu duen filmaz. Aita Santu berriaren hautaketak askorako ematen du: kasu honetan, bi orduz gozatzeko. Hain da ona gidoia. Hain ona Ralph Fiennes Galesko aktore protagonistaren interpretazioa. Superprodukzio dibertigarrienei ere inbidia gutxi, asmoa dibertimendua baldin bada. Ez dira gutxi istorioaren barnean tartekatzen diren ezustekoak. Elkarrizketetan, gainera, umore finera jotzen dute batzuetan, eta, beste batzuetan, bada kritika soziala eta bada Eliza katolikoaren autokritika kardinal batzuen ahotan; azken puntu horretan, Stanley Tuccik bikain jokatzen duen kardinalaren kasua aipa daiteke. Hori gutxi balitz bezala, pentsa zitekeen Elizako gizonen kontua dela *Conclave*. Baina pasarte garrantzitsuetan ageri da moja bat, Isabella Rossellini interpretazioaren maistrak hezurmamitua. Ozena da haren ahotsa.

Vatikano barneko dibertimendu eta liturgia guztien erdian, Fiennesek jokatzen duen kardinalak hitzaldi mamitsu bat ere egiten du. Ziurtasunaz ari da, erabateko ziurtasunak izan ditzakeen eragin kaltegarriez. Aniztasunaz ari da, nahiz eta ikusleak badakien Eliza katolikoaren barneko aniztasunak zer-nolako bidea duen. Pertsonaia, gainera, barne borrokan ari da. Bai, fedea...

Bergerrek lau Oscar sari irabazi zituen *All Quiet on the Western Front* (2022) lan beliko zoragarriarekin. Ez litzateke harritzekoa izango *Conclave*-k ere makina bat sari jasotzea. Amen, Berger.●

# Oskolaren babespetik atera ezinean



*Stop motion* animazioa erabili du zuzendariak.
BERRIA

**KRITIKA**
**Perlak**

*Memoir of a Snail*

**Zuzendaria:** Adam Elliott. **Herrialdea:** Australia. **Iraupena:** 94 minutu.

**Uxue Arzelus Lasa**

Grace Pudel behar zuen baino lehenago irten zen amaren sabeletik, eta, haren hitzetan, gutxi egina gelditu zen, ezpaina bitan banatuta baitzeukan. Laster batuko zitzaion Gilbert anaia bikia, baina amak ezin izan zuen erditzearekin, eta hil egin zen. Anai-arrebei ondoren gertatuko zaizkienak, Gracek flashback eran eta off-eko ahotsean narratuta, dramarik gogor eta sinesgaitzenen mailan egongo dira: auto batek harrapatuta tetraplegiko gelditu eta alkoholiko bilakatuko den aita, eskolan jasan beharreko amaigabeko isekak, tristurarik handienean murgilduko dituen banantzea, heriotzak, gaixotasun mentalak eta sekta erlijiosoak. Ezbeharrez beteriko bizitzak.

Gracek, amak bezala, barraskiloak ditu gustuko. Barraskiloekin harremana duen edozer erosten du, eta haren etxea bizirik dauden barraskiloen eta buztinezkoen santutegi bilakatu du. Sylvia Plathen izena jaso duen barraskilo horietako bati kontatzen dion istorioari esker ezagutuko dugu haren bizitza, eta nola ezbehar horien guztien artean Pinky izeneko emakume xelebre samarra ezagutzeak lagundu zion aurrera egiten.

Adam Elliot australiarrak *stop motion* teknika erabili du Graceren istorioa kontatzeko. Haren bizitza ilunari kolore eta testura ilunagoak gehitu dizkio plastilinaz eginiko animazioaren bidez, eta umore beltzez beteriko uneekin borobildu du kontakizuna. Baina batzuetan desgrazia zerrenda luze bat dirudien film honek detaile txikietan aurkitzen ditu arnasguneak. Eta beharrezkoak dira arnasgune horiek; izan ere, Grace bezala barraskilo baten oskolean babestu eta ekaitza pasatu arte gordetzeko tentazioa ez da txikia.

Mundu ikuskera berezi bat erakusten digu *Memoir of a Snail*-ek. Inozentziaz eta imajinazioz beteriko begirada batetik biziko dugu kontakizuna, eta, beharbada horregatik, Graceren eta ingurukoen zauriek min handiagoa emango digute. Haurraren bizitzan (eta, nire iritziz, filmean) beranduegi iristen den Pinky da atsekabeak arinduko dituena, iluntasuna apur bat hautsiko baitu bere bizinahiaren distirarekin. Eta ezbeharren zerrenda emakumearen etorrerarekin amaitzen ez bada ere, aurrera egiteko adorea emango digu; astiro baina ziur. ●



# Iristear dena

**KRITIKA**
**Horizontes Latinos**

*Cuando las nubes esconden las sombras*

**Zuzendaria:** Jose Luis Torres Leiva. **Herrialdeak:** Txile, Argentina, Hego Korea. **Iraupena:** 71 minutu.

**Uxue Arzelus Lasa**

Maria aktorea da, eta film proiektu bat du esku artean. Grabaketa Puerto Williamsen izango da, Navarino irlan dagoen hiri batean, Txile hegoaldean. Maria filmaren lantaldea baino lehenago iritsiko da hara, barkuz, eta laster jakingo du bakarrik igaro beharko dituela lehen egunak, eguraldia dela-eta gainontzeko kideek ezin baitute irlara bidaiatu.

Autobusik, taxirik eta Uberrik ez dagoen hiri batean, Mariak lekua, inguruak eta bertako jendea deskubritzen igaroko ditu egunak. Alde batetik bestera mugitzeko autoa utziko dion emakumea, xomorroak aztertzen ari den zientzialaria, biolina jotzen duen haurra. Herriko gazteei antzerki ikastaro bat ere emango die. Gutxinaka, eta bertakoen laguntzarekin, herriari buruz —eta bere buruari buruz— ikasiz joango da Maria, inoiz heltzen ez den zerbaiten zain dagoen bitartean.

Ezagutza eta deskubrimendu bidaia bat proposatzen digu Jose Luis Torres Leiva zinemagile txiletarrak. Istorioko protagonistak egiten du bidaia, baina ikuslea eskutik hartu eta harekin batera kuxkuxeatzera gonbidatuko du. Horrela, prestakuntza handirik gabeak diruditen elkarrizketen bidez, herria osatzen duten pertsonen bizitza zatiak ezagutuko ditugu, eta piezaz pieza, istorioz istorio, munduaren ertz hura eraikiz joango gara.

Bidaiak, hala ere, Maria ez du soilik Puerto Williams eta hango biztanleak ezagutzera eramango. Bere burua ezagutu eta bizkarreko min eran agertzen diren iraganeko atsekabeetan sakondu beharko du aktoreak. Horrela, iristen ez den lantaldearen zain egote hori ustez atzean utzitako dolu prozesu bilakatuko da emakumearentzat. Eta Torres Leivak prozesu horren zati txiki baten lekuko, era batean aktibo, egiten gaitu: xumea eta garrantzi gutxikoa dela pentsa liteke, baina bide luze batean egiten den geldialdi baten pare ulertu dut nik; arnasa hartu, eta atzean utzitakoari erreparatuz, aurretik datorkigunari emandako begiratu bat. ●












## ARTEA + ERAKUSKETAK

### ELKARRIZKETA BAT: CHILLIDA ETA ARTEAK. 1950-1970
**San Telmo Museoa**
Irailaren 29a arte
AZKEN EGUNAK


### LUIS MARTÍN-SANTOS. ASKATASUN GARAIA
**San Telmo Museoa**
Urtarrilaren 12a arte





### GOYA-HELLBOY
STÉPHANE LEVALLOIS
**FANTASIAZKO ETA BELDURREZKO ZINEMAREN 35. ASTEA**
**Okendo K.E., Aiete K.E.**
Azaroaren 3a arte

### ARITZ TRUEBA
ILUSTRATZAILEAREN TXOKOA
**Aiete K.E.**
Abenduaren 8a arte
AZKEN EGUNA


### BANG! BANG! ZINEMA: 10 URTE KARTELERAN
10 AÑOS EN CARTEL
**Ernest Lluch K.E.**
Irailak **30** - Urriak **26**



## MUSIKA



### ISMAEL SERRANO: LA CANCIÓN DE NUESTRA VIDA
**Victoria Eugenia**
Urriak **10. 19:30**



### DONOSTIKLUBA FESTIBALA
**Intxaurrondo K.E.**
Urriak **11-12. 21:00**

**11**
**PARKINEOS + GIIOVAAZ DJ**

**12**
**REBE + LAMIA MARI DJ**

### XABI SAN SEBASTIAN: BETAZALAK
**Imanol Larzabal (Lugaritz)**
Urriak **18. 19:30**
euskara

## IKASTAROAK

### 2024-2025 MATRIKULAZIOA
**donostiakultura.eus/ikastaroak**

Gaztelaniazko ikastaroak:
**Irailaren 29a arte**


## HAURRAK

### SOLO
CIA. BORRALLAS
ANTZERKIA
**Gazteszena (Egia)**
Irailak **28. 17:30**
keinu bidezkoa

## ANTZERKIA

### NININI
ANTTON TELLERIA
**Imanol Larzabal (Lugaritz)**
Urriak **04-05. 19:30**
euskara
AGORTUTA

### EL SHOW DE EDÉN SERRANO
**Imanol Larzabal (Lugaritz)**
Urriak **11. 19:30**
gaztelania




### POLVO SERÁN, MAS POLVO ENAMORADO
MORFEO TEATRO
**Victoria Eugenia**
Urriak **12. 19:30**
gaztelania

### EUKALYPTUS
**Imanol Larzabal (Lugaritz)**
Urriak **20. 19:00**
euskara



### ZORRETAN
HIKA TEATROA
**Gazteszena (Egia)**
Urriak **25-26. 19:30**
euskara

## DANTZA



### ITURRITIK DANTZA JAIALDIA
**Victoria Eugenia, Okendo plaza**
Urriak **15-20** Octubre

**17**
**REL I GRAPA**
VÍCTOR & RAÚL PÉREZ ARMERO
**Victoria Eugenia Club. 19:30**

**18**
**NIRE TXOKOTIK**
KUKAI DANTZA
**Victoria Eugenia Club. 19:30**

**19**
**20 URTE GERO-AGO, MÁS GERO QUE NUNCA**
GERO AXULAR
**Victoria Eugenia. 19:30**

**20**
**MAXKA´ROA**
BERRITZA DANTZA
**Victoria Eugenia. 19:00**

### HALLEY
LED SILHOUETTE
**Gazteszena (Egia)**
Urriak **19. 19:30**

D.: www.tga.eus


**DONOSTIAKULTURA.EUS/SARREREK**

**Victoria Eugenia Antzokia: 943 48 18 18**
**Antzoki Zaharra: 943 48 19 70**


-%10 **DONOSTIA KULTURA TXARTELAREKIN**

3€ **ORDU GAZTEA**




*La Infiltrada* filmaren iragarkia. JON URBE/FOKU

# Albo kalteak



ILUNPEKO OHARRAK
Garbine Ubeda

Zinemaldian bete-betean sartzen denak munduan besterik ez dela pentsatzeko joera izaten du (bereziki berriemaile izendatuta gaudenok eta txartela lepotik dinbili-danbala daramaten gainontzeko profesionalek). Baina Zinemaldia film parrastada baten erakustokia baino gehiago da. Eta pantailetako izar urrunak hurre, kasik etxeko ezkaratzean topatu, eta haiekin amets errealagoak egiteko esperantza baino gehiago ere bada.

Zinemaldia, izatekotan, Donostia da, ezer baino gehiago; eta, batez ere, eguneroko errepikakorrak halabeharrez ipinitako betaurrekoak erantzi, eta hiriari bestela begiratzeko estakuru on bat: nola argitzen duen eguna, kontrasterik baden, zer ageri den (edo, alderantzira, zer ez den ageri), paisaiak nolako hotsak eskaintzen dituen (gutxitan euskaraz), ustez amiñi bat behintzat zureak ere badiren kale horiek nola hartzen zaituzten, edota nor dagoen ekitaldi arranditsu horren ifrentzuan, nori ez zaion deus handirik axola. Ez da zail asmatzen. Pare bat kale barrurago daude adibideak: itzaletan aparkatu dituzten zahar ezinduak eta haien gurpil aulkiari helduta doazen zaindariak, gehienetan emakumezko, gehienetan sakelako telefonoa eskuan eta begirada han nonbait, urrun. Anestesiatuta dirudite batzuek eta besteek. Haien inguru-minguruan dabiltza haurtzaindegitik jolas parkera atera diren neskato-mutikoak ere, bakarren bat negarrez, arrantzaka kasik, eta besteak garrasika, olgetan. Haiei ere bost axola nazioarteko ekitaldiak zer ekar lezakeen: norbere pelikulan itsatsita daude, ondo itsatsita ere, izen bera duen pelikulako protagonisten antzean.

Nire arreta osoa, baina, Kursaalaren aurrean eta Viktoria Eugenia antzokiaren inguruan paratu dituzten iragarkiek eraman dute halabeharrez. Amuak baino gehiago, albo kalteak dirudite, burdinazko panel sendoetan tente eta goitika, burutik behera ariko balitzaizkigu bezala. Hortxe, *Euskadi The Bike Country* eta Audi autoak irudikatu nahi duen ihes betea, biak lerro-lerroan, batak besteari kontrastea egin ordez, elkarri sinesgarritasuna kentzen diotela. Hortxe *Emmanuelle* filmaren iragarkia ere, lau hitz besterik ez euskaraz, eta horietarik erdiak gaizki idatziak. Eta denetan ikusgarriena, alde handiz erraldoiena (etxe baten aurrealde osoa hartzen baitu), kurioski Zinemaldiak emango ez duen film batena: *La Infiltrada*.

Hitz iradokitzailea da; eta nire egin nahiko nukeen kontzeptua. Gehienetan halaxe sentitzen baikara gu ere —euskaraz bizi nahi dugunok eta gurea besteena bezain unibertsala dela sentitzen dugunok, alegia—, tamalez, infiltratuta, ardatza Espainian jarria duen zinemaldi honetan. ●



## Gaurko egitaraua

### SAIL OFIZIALA

**08:30 • LOS DESTELLOS / GLIMMERS.** Zuz: Pilar Palomero (Espainia). Viktoria Eugenia.

**08:30 • QUAND VIENT L'AUTOMNE / WHEN FALL IS COMING.** Zuz: François Ozon (Frantzia). Kursaala, 1.

**11:30 • LOS DESTELLOS / GLIMMERS.** Zuz: Pilar Palomero (Espainia). Kursaala, 1. [EAE].

**11:30 • THE END.** Zuz: Joshua Oppenheimer (Danimarka - Alemania - Irlanda - Italia). Antzoki Zaharra.

**16:00 • HEBI NO MICHI / SERPENT'S PATH.** Zuz: Kiyoshi Kurosawa (Japonia - Frantzia). Kursaala, 1.

**17:00 • SOY NEVENKA / I AM NEVENKA.** Zuz: Iciar Bollain (Espainia). Antiguo Berri, 2.

**17:45 • LUMIÈRE!, L'AVENTURE CONTINUE / LUMIERE! THE ADVENTURE CONTINUES.** Zuz: Thierry Fremaux (Frantzia). Trueba, 2.

**19:00 • LOS DESTELLOS / GLIMMERS.** Zuz: Pilar Palomero (Espainia). Kursaala, 1. [EAE].

**19:30 • CONCLAVE.** Zuz: Edward Berger (Erresuma Batua - AEB). Antiguo Berri, 2.

**19:30 • EL LUGAR DE LA OTRA.** Zuz: Maite Alberdi (Txile). Antzoki Zaharra.

**19:30 • SOY NEVENKA / I AM NEVENKA.** Zuz: Iciar Bollain (Espainia). Principe, 7.

**21:45 • QUAND VIENT L'AUTOMNE / WHEN FALL IS COMING.** Zuz: François Ozon (Frantzia). Kursaala, 1.

**22:00 • CONCLAVE.** Zuz: Edward Berger (Erresuma Batua - AEB). Antiguo Berri, 2.

**22:30 • LA VIRGEN ROJA / THE RED VIRGIN.** Zuz: Paula Ortiz (AEB - Espainia). Viktoria Eugenia.

### ZINEMIRA

**16:00 • ESE MUNDO QUE NO TE DA NADA / THAT WORLD THAT GIVES YOU NOTHING.**
Zuz: Ernesto del Río (Euskal Herria). Principe, 2.

**19:15 • CIENTO VOLANDO.** Zuz: Arantxa Agirre (Euskal Herria). Principe, 3. [EB].

**20:00 • ESTO NO ES HOLLYWOOD (LA HISTORIA INACABADA DE LOS HERMANOS IBARRETXE) / THIS IS NOT HOLLYWOOD (THE UNFINISHED STORY OF THE IBAR.** Zuz: Jone Ibarretxe de la Cal, Nere Falagan Martin (Euskal Herria). Trueba, 2.

**20:00 • INDARKERIAREN OI(H)ARTZUNAK / LET IT KNOW.** Zuz: Amaia Merino, Ander Iriarte (Euskal Herria). Antiguo Berri, 7. [EAE].

**21:45 • LOS PODERES DE LOLO.** Zuz: Miguel Alba Rico, Nino Fontan Allen, Itziar Bernaola Serrano (Euskal Herria). Principe, 9.

### ZABALTEGI-TABAKALERA

**16:00 • TO A LAND UNKNOWN.** Zuz: Mahdi Fleifel (Erresuma Batua - Palestina - Frantzia - Grezia - Herbehereak - Alemania - Qatar - Arabiar Emirerri Batuak). Tabakalera-1. aretoa.

**18:15 • ACROSS THE WATERS.** Zuz: Viv Li (Frantzia). Antiguo Berri, 8.

**18:15 • LAS NOVIAS DEL SUR / SOUTHERN BRIDES.** Zuz: Elena Lopez Riera (Espainia - Suitza). Antiguo Berri, 8.

**18:15 • SADAC DRO IDGA / WHERE TIME STOOD STILL.** Zuz: Nino Benashvili (Georgia - AEB - Kanada). Antiguo Berri, 8.

**18:15 • YAO YUAN DE XIA WU / HERE COMES THE SUN.** Zuz: Wu Lang (Txina). Antiguo Berri, 8.

**20:00 • BOKU NO OHISAMA / MY SUNSHINE.** Zuz: Hiroshi Okuyama (Japonia - Frantzia). Trueba, 1.

**22:00 • CÓMO SER PEHUÉN PEDRE / HOW TO BE PEHUÉN PEDRE.** Zuz: Federico Luis (Argentina - Alemania). Tabakalera-1. aretoa.

**22:00 • ETORRIKO DA (ETA ZURE BEGIAK IZANGO DITU) / WHEN IT COMES (IT WILL HAVE YOUR EYES).** Zuz: Izibene Oñederra (Euskal Herria). Tabakalera-1. aretoa.

**22:00 • GIMN CHUME / HYMN OF THE PLAGUE.** Zuz: Ataka51 - (Alemania - Errusia). Tabakalera-1. aretoa.

**22:00 • LEELA.** Zuz: Tanmay Chowdhary (India). Tabakalera-1. aretoa.

**22:00 • NAI NIU / MILKY WHITE.** Zuz: YoYo Liu (Txina). Tabakalera-1. aretoa.

**22:15 • BOKU NO OHISAMA / MY SUNSHINE.** Zuz: Hiroshi Okuyama (Japonia - Frantzia). Trueba, 1. [EAE].

### ZUZENDARI BERRIAK

**09:00 • LA LLEGADA DEL HIJO / SURFACING.** Zuz: Cecilia Atan, Valeria Pivato (Espainia - Argentina). Kursaala, 2.

**12:00 • STARS AND THE MOON.** Zuz: Yongkang Tang (Txina). Kursaala, 2.

**16:00 • GÜLIZAR / GULIZAR.** Zuz: Belkis Bayrak (Turkia - Kosovo). Trueba, 1. [EAE].

**17:00 • MIN EVIGE SOMMER / MY ETERNAL SUMMER.** Zuz: Sylvia Le Fanu (Danimarka). Antzoki Zaharra.

**19:15 • LA LLEGADA DEL HIJO / SURFACING.** Zuz: Cecilia Atan, Valeria Pivato (Espainia - Argentina). Kursaala, 2.

**22:30 • BRÛLE LE SANG / IN THE NAME OF BLOOD.** Zuz: Akaki Popkhadze (Frantzia - Belgika - Austria). Antiguo Berri, 8. [EAE].

### ATZERA BEGIRAKOA

**12:00 • GOMORRA / GOMORRAH.** Zuz: Matteo Garrone (Italia). Tabakalera-1. aretoa.

**15:45 • UN MALEDETTO IMBROGLIO / THE FACTS OF MURDER.** Zuz: Pietro Germi (Italia). Principe, 5.

**18:15 • MAFIOSO.** Zuz: Alberto Lattuada (Italia). Principe, 6.

**20:30 • MILANO ODIA: LA POLIZIA NON PUÒ SPARARE / ALMOST HUMAN.** Zuz: Umberto Lenzi (Italia). Principe, 5.

**22:30 • BANDITI A MILANO / THE VIOLENT FOUR.** Zuz: Carlo Lizzani (Italia). Principe, 6.

### HAURRENTZAKO ZINEMA

**12:00 • BOO KWAI ETA MUSEOAREN LAPURRETA / CRAZY KWAI BOO: SANXINGDUI SPIRITED AWAY.** Zuz: Yunfei Wang (Txina). Principe, 10.

**16:00 • ABENTURA ERRALDOIA / A GIANT ADVENTURE.** Zuz: Eduardo Schuldt (Peru). Principe, 10.

### HORIZONTES LATINOS

**16:00 • CUANDO LAS NUBES ESCONDEN LAS SOMBRAS / WHEN CLOUDS HIDE THE SHADOW.** Zuz: Jose Luis Torres Leiva (Txile - Argentina - Hego Korea). Trueba, 2.

**16:15 • ZAFARI.** Zuz: Mariana Rondon (Peru - Venezuela - Mexiko - Frantzia - Brasil - Txile - Dominikar Errepublika). Kursaala, 2.

**18:00 • SIMÓN DE LA MONTAÑA / SIMON OF THE MOUNTAIN.** Zuz: Federico Luis (Argentina - Txile - Uruguai - Mexiko). Principe, 10.

**20:15 • EL JOCKEY / KILL THE JOCKEY.** Zuz: Luis Ortega (Argentina - Mexiko - Espainia - Danimarka - AEB). Antiguo Berri, 8.

**20:15 • SIMÓN DE LA MONTAÑA / SIMON OF THE MOUNTAIN.** Zuz: Federico Luis (Argentina - Txile - Uruguai - Mexiko). Principe, 10.

**22:00 • CIDADE; CAMPO.** Zuz: Juliana Rojas (Brasil - Alemania - Frantzia). Kursaala, 2.

**22:00 • EL JOCKEY / KILL THE JOCKEY.** Zuz: Luis Ortega (Argentina - Mexiko - Espainia - Danimarka - AEB). Trueba, 2.

**22:30 • ZAFARI.** Zuz: Mariana Rondon (Peru - Venezuela - Mexiko - Frantzia - Brasil - Txile - Dominikar Errepublika). Principe, 10.

### KLASIKOAK

**16:00 • SHA FU / THE WOMAN OF WRATH.** Zuz: Tseng Chuang-hsiang (Taiwan). Antiguo Berri, 8.

**19:00 • THE PIANO.** Zuz: Jane Campion (Australia). Tabakalera-1. aretoa.

### MADE IN SPAIN

**16:00 • LA CASA.** Zuz: Alex Montoya (Espainia). Antiguo Berri, 7.

**16:00 • NINA.** Zuz: Andrea Jaurrieta (Euskal Herria). Principe, 9.

**18:00 • NORBERTA.** Zuz: Sonia Escolano, Belen Lopez Albert (Espainia). Antiguo Berri, 7.

**19:00 • JUSTICIA ARTIFICIAL.** Zuz: Simon Casal (Espainia - Portugal). Principe, 9.

**21:30 • LA ABADESA / HOLY MOTHER .** Zuz: Antonio Chavarrias (Espainia - Belgika). Principe, 2.

**21:30 • SEGUNDO PREMIO / SATURN RETURN.** Zuz: Isaki Lacuesta, Pol Rodríguez (Espainia - Frantzia). Antiguo Berri, 7.

### PERLAK

**08:45 • ALL WE IMAGINE AS LIGHT.** Zuz: Payal Kapadia (Frantzia - India - Herbehereak - Luxenburgo). Antzoki Zaharra.

**11:30 • YEOHAENGJAUI PILYO / A TRAVELER'S NEEDS.** Zuz: Hong Sangsoo (Hego Korea). Viktoria Eugenia.

**16:15 • AINDA ESTOU AQUI / I'M STILL HERE.** Zuz: Walter Salles (Brasil - Frantzia). Principe, 3.

**16:15 • THE SUBSTANCE.** Zuz: Coralie Fargeat (Erresuma Batua). Antiguo Berri, 6.

**16:45 • BIRD.** Zuz: Andrea Arnold (Erresuma Batua). Viktoria Eugenia.

**19:15 • ALL WE IMAGINE AS LIGHT.** Zuz: Payal Kapadia (Frantzia - India - Herbehereak - Luxenburgo). Antiguo Berri, 6.

**19:45 • THE WILD ROBOT.** Zuz: Chris Sanders (AEB). Viktoria Eugenia. [LK].

**21:45 • THE SUBSTANCE.** Zuz: Coralie Fargeat (Erresuma Batua). Antiguo Berri, 6.

**22:00 • DANEY ANJIR MAABED / THE SEED OF THE SACRED FIG.** Zuz: Mohammad Rasoulof (Iran - Alemania - Frantzia). Antzoki Zaharra.

**22:15 • BIRD.** Zuz: Andrea Arnold (Erresuma Batua). Principe, 3.

### BELODROMOA

**18:00 • CELESTE.** Zuz: Elena Trape (Espainia). Belodromoa.

### BESTE HAINBAT JARDUERA

**18:15 • 120 BATTEMENTS PAR MINUTE / 120 BEATS PER MINUTE.** Zuz: Robin Campillo (Frantzia). Principe, 2.

### DONOSTIA SARIAREN EMANALDIAK

**17:00 • RUMOURS.** Zuz: Guy Maddin, Evan Johnson, Galen Johnson (Kanada - Alemania). Principe, 7.

**22:00 • RUMOURS.** Zuz: Guy Maddin, Evan Johnson, Galen Johnson (Kanada - Alemania). Principe, 7.

### RTVE GALAK

**14:15 • LAS CHICAS DE LA ESTACIÓN / THE GIRLS AT THE STATION.** Zuz: Juana Macias (Espainia). Principe, 7. [*].

---

[*] Prentsa eta kreditatuak

[ZB] Zuzendari Berriak saria.

[LK] Lehiaketatik kanpo.

[EAE] Euskarazko azpidatzi elektronikoak.

[EB] Euskarazko bertsioa.

# Pop-a eta emozioak

'Palacio' diskoa kaleratu du **Elsa y Elmar** musikariak. Hainbat generotako hamabi kanta ditu lanak, eta emozioak nabarmentzen dira.

**Urko Iridoy Alzelai**



Elsa Carvajal musikariaren promozio argazki bat. BERRIA

Bere jaioterria, Kolonbia, atzean utzi, eta AEBetara zuzendu zen Elsa Carvajal musikaria, bere ibilbidea handitzeko asmoz. Kalifornian (AEB) ez zuen arrakastarik lortu, eta azkenean, Mexikora mugitu zen. Zortzi urte baino gehiago darama Mexiko hirian, eta orain, bere seigarren bilduma kaleratu du, Elsa y Elmar izenpean: *Palacio*. Latinoamerikako poparen ikur handietako bat bilakatu da Carvajal azken hamarkadan, 2014. urtean John Lennon sarietan musika latinoaren sari handiena irabazi zuenetik. Pop espirituala interpretatzen du musikariak bere ustez, genero hori berak asmatu duela esateraino.

Hamabi kantaz osatutako lana da *Palacio*. «Kanta bakoitzak bere generoa dauka. Eguzki sistema baten modukoa da bilduma, eta erdigunean nik neure burua ezagutzeko, esploratzeko eta hobetzeko dudan gogoa dago», azaldu du Carvajalek. Kanta guztiek badute zerbait komuna: musikariaren emozioak asko nabarmentzen dira. Hori bera argi geratzen da diskoaren lehen kantan (*Drogada de emociones*), non maitasuna den oinarri, maitasunak eragin dezakeen melankolia, ezegonkortzea eta antsietatea zehazki.

Ahotsaren nagusitasuna nabarmena da, instrumentalarekin alderatuz, eta horrela letren eta mezuaren garrantzia goraipatzen du. «Nire disko esperimentalena da, ez soilik musika aldetik, baita sentitutakoagatik ere». Grammy Latinoetan saritutako Julian Bernal ekoizlearekin elkarlanean egin du bilduma, eta, haien lehen lana izanik, bere soinua hedatzeko eta aspektu berriak aurkitzeko balio izan dio Carvajali. Elkarlanaren harira, Alvaro de Luna abeslari espainiarrarekin batera kaleratu du *Visto* kanta. Soinuari dagokionez, zenbait genero entzun daitezke, hala nola *Lento Violento* kantan erabiltzen den house balearra, *Querer así* eta *Policarpa* abestietan nabaritzen den balada eta gitarraren bidez folk ukituak dituen *Gigante*.

### Askatasuna helburu

Hala deskribatu du diskoa Carvajalek: «*Palacio* bizitzan, sormenean eta artean dugun konfiantzan oinarritzen den bilduma bat da. Era berean, gaur egun musikaren industrian dauden estruktura eta betebeharren aurkako matxinada bat dela uste dut». Hainbat gai jorratzen ditu musikariak: edertasuna eta okertasuna, seriotasuna eta jokoa, alaitasuna eta tristura, maitasuna eta desamodioa... baina musikariarentzat askatasuna da garrantzitsuena, norberaren askatasuna, eta bereziki emakumeen askatasuna. Feminismoa aldarrikatzeko lekua ere aurkitu du Carvajalek bere abestien artean.

Musikarekin ez ezik, kanta bakoitza aurkezteko sortu dituen bideoklipekin ere bilatu du diskoaren kohesioa. ●



**'Palacio'**
**Musikaria:** Elsa y Elmar.
**Diskoetxea:** Sony Music.
**Urtea:** 2024.

# Tresna



**BI AHOTSETARA**
Jon Urzelai

*Jolifanto bambla ô falli bambla / grossiga m'pfa habla horem / égiga goramen / higo bloiko russula huju.* 1916, Zurich, Suitza, Hugo Ball alemaniarra Cabaret Voltaire klubeko eszenatokira igo da, eta hitzok errezitatzen hasi. *Karawane* du poemak izena, esanahirik gabeko hitza, testuko beste guztiak bezala. Amaitu duenerako, Ball trantzean dago oholtzan eta bertatik atera behar izan dute; publikoak hartu du berak utzitako tokia.

Gertakari hura gogoan sortu dute Za! rock talde kataluniar martzianoak —ez duzue haiena baino zuzeneko dibertigarriagorik topatuko inguruotan— eta Perrate flamenko kantari sevillarrak *Jolifanto* izeneko diskoa, Hugo Ballen poesiaren lehen hitzari erreferentzia eginez. *Rave* kutsuko elektronika, *quejío*-ak, jazz esperimentazioa, *kraut* ukituak, txaloak, polirritmoak eta molde guztietako rock egiturak nahasi dituzte, zuzena, etereoa, indartsua eta askea ere baden disko eder batean. Oso freskoa da emaitza, asko baitu esperimentaziotik, jolasa ere baden esperimentaziotik: aukera posibleak irudikatzen dituen hori, mugarik ez balego bezala aritu nahi duena. Nabari da gozatu dutela bilaketa horretan, zehazten zaila baina agerikoa den energia bat dario diskoari. Iñaki Segurolak zioen: badago *dena*, dagoen guztia, baina *ez dena* ere badago. Segurola hitzekin jolasten zen, Hugo Ballek hitzen hertsiduretatik askatu nahi zuen, haietatik harago eta honago joan. *Ez den* hura zuen helmuga eta antzera, nik uste, Za! onomatopeikoek eta Perratek ere. Horretarako, ezinbestekoak dira sena, intuizioa eta, zergatik ez, baita magia ere. Lilura galdu duen gizarte honetan, hori guztia artean baitago, inon izatekotan. Hala behar luke, behintzat.

Artea tresna bat dela entzuten dudan bakoitzean oroitzen naiz *Jolifanto* diskoaren azalaz. Gailu arraro bat ageri da bertan: badu biratzeko heldulekua, zanpatu daitekeen malguki parea, gitarra puska, balantza batena izandako neurgailu baten zatia. Bihurritu, kolpatu, iradoki, eraldatu, txunditu egiteko gai den trastea dirudi, zail da igartzen beste zenbait kontutarako ere balio lezakeen zera horrek. Mailua? Noski, baita beste hamaika gauza ere. ●

**KRITIKA**

# Grabitazio sentsoriala

**Urko Ansa**

*Clone of the Universe* diskoa argitaratu eta sei urtera iritsi da, azkenik, kaliforniarren lan berria. Ohi bezala, kalitatea eta konposizioen pisua bereziki zaindu dituzte hamahiru kanturekin hiru ordu laurdenak aise gainditzen dituen lan honetan. Orange Countykoen zaleak Fu Manchuri eskatzen dizkion elementu guztiak biltzen ditu lan honek: stoner rock pieza mardulak, gitarra efektuak, indarra sobran eta kantu sorta bereziki gomendagarria.

*Dehumanize* eta *Loch Ness Wrecking Machine* kantuekin argi eta garbi markatzen dute beren eremua Scott Hill (gitarra, ahotsa eta taldearen etapa guztietan egon den partaide bakarra) eta bere hiru taldekideek. Brad Davis baxu joleak, adibidez, 30 urte daramatza Hill-en alboan, eta partaiderik berrienak (Scott Reeder bateria joleak), jada 23. Beraz, laukotearen elkar hartzea eta soinua guztiz konpaktuak dira aspalditik. Stoner pieza borobil eta boteretsuek ere laster egiten dute lehen agerpena. Aurreko biek ere hala egiten duten arren, *Hands of the Zodiac* kantu itzela dugu, zale guztientzat erregalu aparta. Polikiago eta astunago ere eraso dezakete, bai gitarra soloa pedal efektu bereziarekin lantzen duen *Haze the Hides* geldoarekin, zein *Roads of the Iowly* oraindik astunago eta *sabbathiarrarekin*.

Aurrekoei bi minutuko kontrapuntu azkarra eta zuzena ematen die *(Time is) Pulling You Under* kiskalgarriak. Gogortasun sendo eta bloke baten modukoaren bila dabilenak nekez topatuko du *Destroyin' Light* baino egokiagorik, errepikaren gantxoa eta wah-wah efektua ahantzi gabe. *Lifetime Waiting*-ekin berriz ere erreboluzioak jaisten dituzte, erritmo motelagoak astuntasunean inolako atzerapausorik ez dakarren arren. Dantzagarria hau ere noski, meritudun gitarra soloa ahantzi gabe. Diskoaren momenturik onenak datozkigu berehala, ordea: erritmo pisutsuak, afinazio grabeak, gitarren pedal efektuak, kantu geldoak zein azkarrak aipatu ditugu orain arte. Goazen orain stonerraren eta *desert rock* delakoaren beste osagai garrantzitsu batera: psikodeliara, space rock kutsura, giro barnerakoietara, azido eta bidaia kosmikoetara.

*Solar Baptized* flotatzailea da, dantzagarria izateari utzi gabe, erritmo eta errepika kutsakorrak edukitzeaz gain. Bukaera parteko gitarra soloa ere oso erakargarria da. Kontrasteen jokoa maisuki lantzen abilak, *What I Need* azken garaietako Fu Manchuren kantarik onenetakoa dugu. Bidaia azido bat, lehen zati indartsu batek girotzen duena, baina azken hiru minutu guztiz liluragarriek aupatzen dutena. *The Return of Tomorrow*, diskoari izena ematen dion kanta, erritmo ebakortz pizgarri baten jabe da, baina daukan garapen instrumentala gailentzen da. *Liquify* errepikakorra, jostagarria eta pieza dantzagarria da. Eta psych-rock eta oldarkortasun festari errematea emateko, *High Tide* outro instrumental zoragarria. Black Sabbathen *Solitude* liluragarriaren tradiziorik onenean, amets gozo eta transzendentala da, kosmikoa eta unibertsala, stonerraren elementu garrantzitsuenetako baten erakusgarria. ●




**FU MANCHU**
'The Return of Tomorrow'
**Diskoetxea:** At The Dojo Records.




**THE ORGAN**
'Grab That Gun & Thieves'
**Diskoetxea:** Mint Records.

The Organ Vancouverren (Kanada) eratu zen, 2001ean; handik hiru urtera, iraupen luzeko estreinako lana plazaratu zuen, *Grab That Gun*, baina, urte berean, taldeak trasteak utzi zituen, eta, 2006an, behin betiko agurra izan zen *Thieves* sei kantuko diskoa atera zuen. Mint Recordsen eskutik berrargitalpen hau iritsi zaigu, zeinak grabazio biak biltzen dituen. 80ko hamarkadako post-punk itzaltsuan hazitako boskotea izan zen The Organ, poparekiko joera nabarmena ere erakusten zuen arren, batez ere Morrissey-ren antzeko ahotsa duen Katie Sketch-en manerak tarteko. Emakumezko hauen talentua nabarmen islatzen da doinu itsaskor eta jostalari hauetan. Ezusteko berantiarra. ● **Julen Azpitarte**




**JONSI**
'First Light'
**Diskoetxea:** Lakeshore Records.

Badute islandiar musikariek berezkoa duten zerbait, glaziar izoztuak, ur-jauzi izugarriak, belardi zabalak irudikatu eta isiltasuna transmititzen duena, zentzumenak aktibatzen dizkizuna. Jonsiren azken diskoko hamalau pieza hauetan ere denbora gelditu egiten da, bizi-erritmoa geldotu eta musika sentitzera eramaten zaitu, sinbiosi instrumentala —soka eta perkusio bikainez gidatua—, analogikoa, elektronikoa eta klasiko nahiz abangoardiakoa uztartuta. Entzunaldian murgiltzea norberaren buruari kalitatezko une bat oparitzea da; *First Light* Islandiako *healing music* edo sendagai-musika delakoaren aitzindari zehatza izan liteke. ● **Ihintza Orbegozo**

**KONTZERTUA**

## Gigolo Aunts / Agurreko orduan

**Non:** Bilboko Kafe Antzokian.
**Noiz:** Ostegunean, 21:30ean.



Gitarretan eta melodia itsaskorretan oinarritutako pop zaleen talde estimatua da Gigolo Aunts 1990eko hamarkadaren amaieratik. Hain zuzen ere, 1999an kaleratu zuen indie-pop eszenan ezagun egin zuen diskoa, *Minor Chords And Major Themes*, gaur egun pop klasikotzat jotzen dena. Lan hura kaleratu eta mende laurdenera, taldeak erabaki du bere ibilbideari amaiera ematea, eta horretarako lan hura ardatz izango duen bira bat prestatu du. Ostiralean Gasteizen izan ziren, Helldoradon, eta ostegunean Bilboko Kafe Antzokian izango da Gigolo Auntsen zuzenekoekin gozatzeko azken aukera. ● **Mikel Lizarralde**



Leila Guerriero idazle eta kazetaria. SERGIO ADRIAN ANGELES/ EFE

# Fantasmagoria (I)

Silvia Labayruren bahiketari buruzko ez-fikziozko lan sendoa idatzi du **Leila Guerriero** kazetari argentinarrak, eta biktimaren irudikapen konplexu bat eskaini.

Nerea Arruti

Leila Guerriero kazetari argentinarrak (Junin, Argentina, 1967) ia bi urte eman zituen, pandemia betean, diktadura garaian bahitutako Silvia Labayru elkarrizketatzen. Horrez gain, haren familiarekin, adiskideekin, bikotekideekin, maitaleekin eta *montonero* izandakoekin hitz egin zuen. Horren emaitza da *La llamada* kazetaritza lan sendoa (Anagrama, 2024). Buenos Airesko Eskola Nazional ospetsuko ikasle ohia zen Labayru, eta, 1976an, 20 urte zituela eta haurdun zegoela, bahitu eta ESMA tortura gunera eraman zuten. Bertan torturatua eta bortxatua izan zen, tortura muturrera eraman gabe, ez baitzuten nahi haurra galtzea —bertan jaio zen lehendabiziko haurra—.

Talde armatu guztiek dakite ezin direla torturak epe luzean jasan, eta sistematikoki ezarriz edonork informazioa ematen duela; 24 orduren ondoren ezin da traiziotzat jo. Labayruk ez zuen kiderik salatu, eta ESMAn erditu zen. Familia militarra izanik, beste tratu mota bat izan zuen, kontu jakin batzuetan konplize izatera behartua. Izenburuan aipatzen den dei hori jaso ondoren, alaba aitona-amonekin bizitzeko baimena bideratu zuten. Halakorik ez zen gertatzen; bahitutakoaren haurra lapurtzea zen ohikoa.

Guerrierok honela dio: «Bob Dylanek kantatzen du: 'zenbat aldiz du modua gizon batek atzera begiratu /eta ez ikusiarena egiteko?'. Dena esana zegoen. Entzuten jakitea besterik ez zen behar —edo nahi izatea». Eta liburu honetan eskaintzen duena entzute ariketa aktibo hori da, fikzio bihurtu gabe eta elkarrizketatuen baimenak, beldurrak eta mamuak zainduz. Kazetaritzaren deontologiari dagokionez, eredugarria da.

2015ean ireki zen ESMAko Memoria Museoa. Hasieran, ez zuten kontuan hartu genero ikuspegia. Memoria lana lokatzean gauzatzen den zeregin bat da. Emakumeek pairatutakoak tabu ziren, biktima eredu jakin bat ezarri nahi zen, eta errealitate historikoa oso bestelakoa izan zen. Azaleko memoria egitasmoetan biktimak sakralizatu egin dira. Emakumeen kasuan patriarkatuaren zama zuri-beltza dago: hots, emakumea Ama Birjina edo puta da. Oximorona bada ere, beste ezker mugimendu historikoetan bezala, *montoneroak*, iraultzaileak izanik ere, ez ziren feministak. Horiek hala, Labayru *montonero* txolin bat zen, epaiketetan ez zuen negarrik egin, gogorregia zirudien, nahi zuenarekin oheratzen zen, eta, hala, bigarren kategorian sartu zuten, haientzat ez baitzen biktima errugabea.

### Ahalduntze feminista

Argentinatik alde egin zuenean, erbesteratu gehienek ez zuten inolako harremanik izan nahi harekin. Kolaboratzaile gisa zuten, baita Maiatzeko Plazako Amonek ere. Gerra zikinaren garaiko biktimak errepresentatzean, bilakaera jakin bat dago. Hasieran, montoneroak biktima apolitiko gisa aurkezten ziren. Esate baterako, Marcelo Brosdsky argazkilariak Eskola Nazionaleko ikasleen argazkia baliatuz eginiko interbentzio artistikoa: *Buena memoria* (2003). Irudi horretan, desagertutako gazteak eskolako nerabeak dira. Memoria lanen hastapenetan, desagertuen alderdi pertsonala soilik azpimarratzen zen. Guerrierok bere ikerketa hasi zuenerako, desagertutako gazte horien aktibismo politikoa ere sartzen da memoria lanetako errepresentazio artistikoan: hau da, armak hartu zituen talde iraultzaile baten partaide izatea ez zen ezabatzen. Liburuan partaide diren askok Montoneroen estrategiaren autokritika azaltzen dute, argi utzita ezin dela inolaz ere parekatu estatuaren indarkeriarekin. Gogoratzean, belaunaldiz belaunaldi, errepresentazioak eta galdera kolektiboak aldatuz doaz. Ez da gauza bera diktadura militarra 2003an edota 2024an gogoratzea. Guerrierok ahalduntze feministaren ikuspegitik idazten du memoria ariketa hori. Horrez gain, eztabaida ideologikoari eta disidentziei lekua eskaintzen die.

Labayruren kasua konplexua denez gero, ertz guztietatik azter-

(HURRENGO ORRIALDEAN JARRAITZEN DU) →

➔ (AURREKO ORRIALDETIK DATOR)

tzen du Guerrierok. Kazetariak bizitza baten arkitektura eraikitzen du urratsez urrats: gaztetako ametsetatik zahartzaroko damuetara, torturaren traumatik askatasunak sortzen duen bertigora. Guerrieroren behaketa lana oso sistematikoa izan arren, badira azaldu ezin daitezkeen alderdiak: azken finean, idazleak dio bizitza oro misterio bat dela. Ondorio horretan kazetaritzak eta literaturak elkar ukitzen dute. Kazetaritzak garaia iker dezake baina ezin da dena erabat azaldu: azken finean, hein handi batean, norbere burua misterio bat da. Zirrikitu kontraesankor hori literaturaren lurraldea da.

Kontatutakoa lazgarria da, eta, ziur aski horregatik, liburuaren bukaera arina da: Labayru adiskideekin hitz egiten, adiskidetasunaren gorazarre da bukaera. Badu antzekotasunik Harkaitz Canoren *Twist* nobelaren bukaerarekin —estatuaren indarkeria kontatu ostean amaiera adiskideen arteko memoria argitsu bat da.

**Nola idatzi indarkeria**

*La llamada* bukatu ahala, Guerriero Costa Bravara joan zen, Truman Capotek *Odol hotzean* (1966) idatzi zuen etxera. Rodolfo Walshen *Operación masacre*-ren (1957), arestian aipaturiko Capoteren ez-fikziozko nobelaren eta Guerrieroren liburuaren arteko harremana begi bistakoa da. Hau da, nola idatzi errealitatean gertatutako indarkeria? Guerrierorena kazetaritza lana da, eta ez fikzioa, baina ez du kazetaritza jakin bateko distantziaren konbentzioa gordetzen eta bere burua argazkian sartzen du. Ez du ezabatzen Labayrurekin pandemia garaian eraiki duen harremana. Hori azaltzeko fisikari baten aipua erabiltzen du: Carlo Rovelliren hitzetan, ez dago errealitatearen errelato bakar bat, objektu baten ezaugarriek beste batekin erlazionatzean bakarrik dute izaera. Guerrierok kazetaritzara dakar Rovelliren teoria.

Argentinako mamuei buruzko lan zehatza idatzi du Guerrierok; preseski, hitzaren erabileran datza eraikitako arkitekturaren edertasuna. Hurrengo liburuak ere mamuekin zerikusia izango du. Costa Bravan Truman Capoteren mamuarekin egingo du topo, eta horretaz idatziko du. Lehen atal honen ondoren, baina, bigarren atalean azalduko da Guerrieroren azken liburua: *La dificultad del fantasma: Truman Capote en la Costa Brava*. ●

KRITIKA

# *Zuloak*

**Nagore Fernandez**

Antzerkia oturuntza bat baldin bada, duda barik, *Hau ez da gerra bat* antzezlan-seriea egiazko oturuntza bat dela esan dezakegu. Oturuntza edo banketea, latinez *convivium*, antzezlana irakurlearena ere badela adierazteko Jorge Dubattik erabili eta Irati Agirreazkuenagak erreskatatu duen metafora bat dugu, Mikel Ayllonek Piszifaktoria Ideien Laborategiarekin batera argitaratu berri duen obrari ezin hobeto ezkontzen zaiona, hain zuzen. Izan ere, espazioaren erabileratik bertatik irekia (eta berritzailea) den antzerki mota bat proposatzen digu liburuak: ikusle-aktore arteko harreman hierarkikoarekin apurtzen da, eta modu horizontalago batean performatzen. Batzuetan, aktoreak jendartetik agertzen zaizkigu; besteetan, ikusleak, eta idatzizko formatuan, irakurleak izango du sekuentziaren bukaera erabakitzeko eskumena; Mikel Ayllonek artisten eta entzule-irakurleon arteko lubakiak desegitea erabaki du oraingoan, eta guztion arteko elkarrizketa bat sortu. Proposamen ausarta, baina, arriskutsua ere bai, inondik ere: hain da esperimentala, ezen irakurleak, zenbaitetan, lerro artean galtzeko arriskua ere izan baitezake. Horra hor obraren indargunea, baina baita itzala ere.




**'Hau ez da gerra bat'**
**Egilea:** Mikel Ayllon, Piszifaktoria Ideien Laborategia.
**Argitaletxea:** Susa, Ganbila bilduma.

Egiturarekin ere jolas egiten du obrak. Hiru antzezlan buruaskiz osatutako seriea dugu liburua. Lehenengoan, *Bunker* izenekoan, tentsioz eta umorez, bikote baten gorabeherak antzeratzen zaizkigu batik bat, nahiz eta gerraren oihartzunen bat edo beste ere aurkituko dugun. Hirugarrenean, azkenengoan, *Hau gerra bat da* izenburupean, lubakiak, tiroak eta odolez betetako jazoerak nagusitzen zaizkigu, eta horien parte da, gainera, ikusle-irakurlea ere, interaktiboki deslotzen baita korapiloa. Bigarren antzezlana dugu, ostera, *Hau ez da gerra bat*, bi-biak, lehenengoa eta azkena lotzen dituen eta obra guztiari koherentzia eta biribiltasuna ematen dion konposizioa, baita liburuari izenburua ere. Bertan agertzen zaizkigu lehenengoko obrako bikotea eta euren gorabeherak, azkenengoko testuinguru eta gertaera odoltsuak, eta guztietan presente egon den soldaduaren irudia. Esan daiteke, hortaz, bigarren horretan biltzen dela obraren muina: atal guztiek zentzua hartzen dute eta gudu-zelaiak biderkatu egiten dira maitasuna eta gerra odoltsua aurrez aurre jartzen diren heinean. Bat egite horrek badu efektu estetikorik; zer da antzerki-seriea paralelismoz eraikitako metafora handi bat ez bada? Baina, batez ere, gerraren beraren izaera absolutu eta trinkoa auzitan jartzera eta horren inguruan hausnartzera gonbidatzen gaitu.

Muga guztiekin jolas egiten duen obra bat dakarkigu Piszifaktoria Ideien Laborategiak, Bertolt Brechten estilotik oso hurbilekoa; irakurleak ez du Aristotelesen hiru unitateen legerik aurkituko, ezta gerraren errepresentazio eta definizio bat eta absoluturik ere. Horren ordez, zuloak aurkituko ditu gorputzetan, bihotzetan, galdera ugari, baina, batez ere, oturuntza on batek ohi duen gisan, metaforaz mozorrotutako mokaduak, nahi beste, gainera. On egin! ●

KRITIKA

# *Sorrera eta akabera*

**Asier Urkiza**

*Itsaso amniotikoa* da Oihane Jakaren lehen liburua, Karmele Igartua bekaren bitartez argitaratua. Paratestuari erreparatuta, izenburuak zein azaleko marrazkiak, biek dakarte poema liburuan giltzarri den figura, hots, itsasoa; halaber, amniotiko hitzak eta marrazkiko orbainak ere gaztigatzen digute amatasuna, haurdunaldia eta erditzea izango direla beste gai giltzarrietako batzuk. Horiek, ordea, narratibitate handiko lanean txertatzen dira.

Izan ere, liburua ez da sinboloetan bereziki oparoa, autoreak ez baitu iruditeria ikusgarririk eta baliabide poetiko sorta ikaragarri aberatsik sortzen. Ez da, halaber, irudi leherketa etengabea, ezta harilkatu gabeko txatalen bilduma ere. Aitzitik, aski narratiboa da eta bilakaera eta garapen argia erakusten du, 11 zenbakiaren inguruan ainguratutako hiru ataletan; urteak, hilabeteak eta egunak adieraziko ditu, hurrenez hurren. Kutsu lirikoena duten poemak ere, aliteraziora jotzen duten lerro labur eta hitzen tartekatzearekin, lerro-narratibo baten barruan koka genitzake, gehienek gertaera zehatzak jasotzen dituztelako. Horiez gain, testu laburren erara daude idatzita beste batzuk, horiek bai guztiz narratiboak.




**'Itsaso amniotikoa'**
**Egilea:** Oihane Jaka.
**Argitaletxea:** Elkar.

Galera batek eta jaiotza batek mugarritzen dute liburua. Toki gehiago hartzen du aitaren galerak lehenengo atalean, baina bizitza berri baten sorrera ere agertuko da laster. Akaberaren eta sorreraren arteko norgehiagoka *ni* poetikoaren barnean, horixe izango da poema askoren oinarria. Poetak nagusiki itsasotik eratorritako sinboloen bidez arituko da bien uztarketan, hau da, galeraren minak eta sorreraren esperantzak sortzen dizkioten sentimenduez. Lehen poemako nerabearen irudian jadanik itsasoa azaltzen da bizitzaren eroale gisa, ekarri eta eramaten duen magal handiaren moduan. Itsasoaren anbibalentzia hori da bizitza berarena, hasiera eta bukaera txanpon beraren bi aldeak direnez. Harekiko elkarrizketa intimoan poetak ezin du itsasoa gorrotatu, bihotzik ez baitu.

Itsasoarekin batera, badira liburuan garrantzi handia duten bi elementu, biak ere denboraren igarotzearekin lotuak: urtemugak eta zuhaitzaren uztaiak. Itsasoak, nire irudiko, bizitzaren sortzaile eta eroaletzat funtzionatzen du neurtzaile moduan bainoago, bizitzaren beraren substantziatzat, alegia. Urtemugek eta uztaiek modu argiagoan seinalatzen dute denbora, iragana, oraina eta etorkizuna elkartuz, azkenengo poeman adierazi legez. Hori dela eta, orbaina ere bizitasun handiagoz agertzen dute, zauria izan badagoela gogorarazten. Horiek ez ezik, poetak gorputzaren beraren arrastoak ere aipatzen ditu eta jaiotza batek utzitako orbainak behinolako zauri ikusezina azaleratzeko erabili. Hain zuzen, sinboloen —itsasoa, uztaiak, bizkotxoa, kandelak— eta gorputzeko zauri eta minen arteko elkarrekintza horri deritzot liburuko ildo interesgarrietako bat. Poema kamutsen bat gorabehera, Oihane Jakak asmatzen du modu argi, zintzo eta apalean bizitzaren akaberak eta sorrerak uzten dituzten markei hitzak jartzen. ●










# Iritzia

## Alfonbra gorria



**HITZ ETZANAK**
Andoni Egaña

Larua zen. Edo urre kolorekoa. Edo purpura. Deitu nahi duzuen bezala. Baina historiako lehen alfonbra gorria ez ei zen gorria, garai hartan tinte hura oso garestia zelako, besteak beste. Eskiloren antzerki-lan batean azaltzen da lehen aldiz alfonbra gorri izatera iritsiko zena. Itzuli zen Troiatik etxera Agamenon. Emazteak gibel-asmoak zituen beretzat. Hil egin nahi zuen. Eta zerbitzariei agindu zien Agamenonek zaldia uzten zuen lekutik etxerako bidea alfonbra batez estaltzeko. Jainko-Jainkosek baino ez zezaketen zapal alfonbra gorria, eta haien haserrea tarteko, senarra hiltzen errazagoa izango zela bururatu zitzaion andreari.

Bazuen istorioak xarma. Oso gerora, alfonbra gorria bihurtu zen agintariei ongietorria egiteko era. Eta glamourretik tiraka, aktoreentzat sarbide, Oscar sarietatik hasi eta munduan zehar ospatzen diren zinemaldietan amaitu. Donostian alfonbra gorriaren astea dugu hau...

Gizakiok, ordea, zerbaiti xarma eransten bezain onak gara zerbait hori xarmaz eranzten. Norbaiti otu zitzaion munduko alfonbra gorririk luzeena egiteak onura ekonomikoak ekar zitzakeela. Almerian egin zuten. Katedralean hasi, eta Komertzialgune handi batean amaitu. Sei kilometro eta erdi guztira. Eta lehenengo iristen zirenentzat Komertzialguneak eskainitako sariak... Tokitan geratu dira Eskilo, Troia, Agamenon, erailketak... ●

## Eukaliptoaren artea



**LARREPETIT**
Iñigo Aranbarri

Duela bi urte Palas de Reiko proiektua aurkeztu zelarik, «landare-zuntzezko oihalen faktoria iraunkorra» izango zela azaldu zuen Altri enpresak. Egitasmo berde bat, milaka lanpostu sortuko dituena. Bertakoa den Jose Blanco buruzagi sozialistaren aholkularitza-enpresaren bermea zekarren (Ezker Batuko ministro ohi Alberto Garzon fitxatu dute anartean). Eta transbertsalitate politikoa osatzeko, PPren esku den Xuntak berehala arindu zituen tramiteak, ederto baten loratua guztia: «berebiziko interes estrategikoa du Galiziarentzat».

Primaderak atera zuen kaka azalera. Oihal faktoriaren oinarri, zelulosa fabrika bat, urtean 400.000 tona zelulosa eta 200.000 tona lyocell sortuko dituena. 336 hektarea lur hartuko ditu enpresak, 75 metroko tximinia izango du sufrea jaulkitzeko eta 46 milioi litro ur aterako ditu Ulla ibaitik, egunero. Ekoizpen maila horri eusteko, 1,2 milioi tona eukalipto egur behar dira. Ez omen da, baina, gehiago landatu beharko: «soberakina erabiliko dugu».

Dena fantasia ero bat, non gezur bati beste bat eransten zaion jarraian, *greenwashing* zoragarrian. Portugaleko suteen argitan, horra urtetan zeruak eta lurrak eukaliptoz josi dituen egitasmoaren erremate politikoa. Biztanleen gordean guztia, ingurumenaren hondagarri eta bakan batzuen poltsikoen pozgarri.

Ados, ez da konparagarri. Zelulosa faktoria dago baten atzean eta munduko arte fundaziorik sonatuena bestean, baina manerak, funtsean, ez dira sano diferenteak. Eta behar izatera, aski eukalipto landatu da azkenaldian Bizkaiko kostaldean halako beste eco-egitasmo estrategiko bat promozionatzeko Urdaibain. Baten bati burutzea da. Tresneria mediatikoa, bada. ●

**BERRIA** **Zuzendaria:** Amagoia Mujika Tolaretxipi **Zuzendariordea:** Eider Goenaga Lizaso
**Edizio arduraduna:** Idurre Lazkano **Argitaratzailea:** Euskal Editorea SM
**Publizitatea:** Bidera publizitatea **Lege gordailua:** SS-0662/03 **Batzorde parekidea:** 0722/84059
**Egoitza nagusia:** Martin Ugalde kultur parkea. Gudarien Etorbidea, z/g 20140 Andoain
**Telefonoa:** (0034) 943-30 40 30 **Webgunea:** www.berria.eus **Posta elektronikoa:** berria@berria.eus
**Publizitatea:** publi@bidera.eus **Harpidetza saila:** (0034) 943-30 43 45 **Date:** 22/09/2024
**Exemplaire:** 6.603 **Editeur:** Euskal Editorea SL **Directeur de publication:** Amagoia Mujika Tolaretxipi

**Comission paritaire:** 0924 C 84059 **Delegation Labourd:** Lisses 3, 64100 Baiona (0033) 559-256220. lapurdi@berria.eus
**Ordezkaritzak | Araba:** Bizenta Mogel, 6. 01008 Gasteiz. (0034) 945-15 04 52. araba@berria.eus **| Bizkaia:** Uribitarte kale 18, 3C, 48001 Bilbo. (0034) 94-435 26 00. bizkaia@berria.eus **| Lapurdi:** Lisses 3, 64100 Baiona. (0033) 559-25 62 20. lapurdi@berria.eus **| Nafarroa:** Iratxeko Monasterioa 45, 13. 31011 Iruñea. (0034) 948-36 66 22. nafarroa@berria.eus

# Bestelako ezkerra, zapatistak

Joxe Iriarte, 'Bikila'
Alternatibako kidea

Gogoan 1994. urtea. Mexiko ustez otzandu eta baretu batean, Salinas de Gortadi presidente neoliberalak sinatu berria du TLCAN-NAFTA ituna. Amaitutzat ematen da Pancho Villa eta Emiliano Zapataren iraultzaren hondarrean Lázaro Cárdenasek, baliabide energetiko eta indar produktibo nagusiak nazionalizatuta, eraikitako ongizate-estatu paternalista eta abertzalea. Kapital transnazionalei (eta bertako oligarkiei) parez pare irekitzen zaizkie ateak ondare nazionalak pribatizatzeko eta ustiatzeko.

Supituki, Emiliano Zapata ikur, Lacandona oihanetik beren buruak mozorrotuta daramaten indigenez osaturiko armada batek (EZLN) San Cristóbal de las Casas bere egiten du, *Lurra eta askatasuna!* aldarri. Armada horrek ez du zerikusirik ohiko *gerrillarekin*. Izaera indigena du eta bere helburua ez da estatu boterea bereganatzea, botereari aurre egitea baizik.

Harrezkeroztik EZLNk bidea egin du Chiapas lurraldean, komunitate indigenen autoantolakuntza babestuz eta komunitatea helburu duen filosofian oinarrituriko *obedecer mandando* (aginduz obeditu) xedez eraturiko gobernu autonomoak (*caracolak*) osatuz. Alabaina, ez da mugatu liberatutako txokoan goxo egotera. Gai izan da *La sesta* deituriko internazional sarea sustatzeko, baita egoeraren arabera Mexiko osorako ekimenak antolatzeko ere aldian-aldian. 2006an izugarrizko arrakasta izan zuen *La Otra Campaña ekimenak* Mexiko osoan, eta era askotariko komunitate eta talde desberdinen laguntza eta sostengua lortu zuen.

**2016. urtea. Berriro,** ustekabean, ohiko abstentzioa alde batera utziz, izugarrizko lurrikara politikoa eragin du EZLNk eta CNIk (Indigenen Biltzar Nazionala) hauteskundeetan parte hartuko dutela adierazi izanak; komunitate autoantolatuak oinarri, presidentegaia emakume indigena izango dute.

Eliteen erantzuna. Mespretxua, arrazakeria eta misoginia. *Castillaz* (gazteleraz, alegia) erdipurdi hitz egingo duen emakume ezjakin bat presidentegai? Galeano (lehen Marcos) subkomandanteak ohiko zuhurtziaz erantzun die: «Emakume horrek agian ez du *Castillaz* egoki hitz egingo, baina argi eta garbi bai, eta denok ulertzen dugu. Zuen erretolika ikasia, aldiz, hutsala, iluna eta ulertezina da herriarentzat. Horra diferentzia».

**Azpitik eta ezkerretik.** Beti uste izan dut, oso garbi, gurean ere ezkerreko politikak gizarte mugimenduetan errotu eta gauzatu behar duela, eta oso bigarren mailan instituzioetan. Jadanik Mexiko osoan ezaguna egin den *Politika azpitik eta ezkerretik!* aldarria askoz haratago doa. Esan nahi baitu ez dela aski *azpikoen alde egitea*: *azpikoekin eta azpikoen erara jardun behar dela* baizik. Eta hori ezkerreko alderdi gehienei ulergaitza egiten zaie, azken finean hauek ere politika ofizialaren munduan murgilduta baitaude (gaude). Gizarte horietako egungo azpikoak, ordea, beste mundu batean bizi dira eta zirkuitu oso desberdina osatzen dute. Garai bateko proletarioek osatzen zuten bezalaxe.

Gure politikarien ahotan, salbuespenak salbuespen, entzuten diren lelo gehienak, formalistak, gatz gabekoak edo erretolika hutsa bihurtzen dira. Intentzio onarekin esandakoek ere ia ez dute izaten eragin praktikorik. Horietako bat da, *politika egiteko beste modu bat* aldarria. EZLNko kideek lelo hori jarduera alternatibo bihurtu dute, borrokatzeko beste modu bat, beste parametro batzuetan jokatzeko apustua.

Eta guri ere badagokigu geure buruari galdetzea: azpikoen, zanpatuen alde egiteaz gain azpikoekin lan eta bizi egiteko gai ginateke? Hirugarren Internazionalean jatorri burgeseko edo langile aristokraziako militanteek auzo pobreetara joaten ziren politika proletarioa eginez beren burua proletarizatzeko. Gaur egun burutik ere ez zaigu pasatzen halakorik.

Mendebaldean, anarkismoa eta komunismoa izan ditugu ezkerraren muturreko ideologiak. Ideiak laburbilduz, esan genezake batak pertsonarengan oinarritzen duela gizartearen askatasuna eta besteak gizartean ikusten duela pertsonaren garapena eta benetako askatasuna. Nire uste apalean bi ikuspegiak uztartu behar lirateke.

**Lurra defendatu, komunitatea antolatu.** Lehen pausoa izan zen lur-jabe zanpatzaileei lurra desjabetu eta komunitatearen eskuetan jartzea. Hori 1994ko altxamenduari esker lortu zuten. Bigarren pausoa, *gobernu txarrak gaitzetsi eta gobernu onak ezarri*; alegia, komunitateari obeditu agintzen duen gobernuari bizitza eman. Obedituz agindu, kontraesan bat ala langile mugimendu zaharreko *kontseiluen* demokrazia zuzenenaren antzeko leloa dugu? Nik antz hori hartzen diot. Langile kontseiluak eta hasierako sobietak demokrazia zuzeneko erakunde edo antolamendu motak ziren, non asanbladetan erabakitzen zena lege edo agindu bihurtzen zen ordezkari guztientzat. Hau da, asanbladan hautatuek asanbladari zor zioten errespetua, eta agindutakoa bete behar zuten. Horretarako izaten ziren hautatuak, ez beren iritzi pertsonala emateko.

Dena den, komunitate zapatisten *aginduko agintarien* asanbladarekiko lotura hertsiagoa eta zuzenagoa da langile kontseiluen demokrazia zuzenarekiko, komunitatea baitu oinarri eta komunitatearen lana eta bizimoduari askoz lotuagoa baitago. Langilea lantegitik (produkzio gunea) at hiritar bihurtzen da, baina komunitateak lurra (lana) eta bizilekua edo udalerria (karakola) bat egiten ditu bere osotasunean: lurraren kudeaketa, artisautza eta bere komertzializazioa, hezkuntza eta osasuna, eta, halaber, etsaiarekiko autodefentsa osotasunean hartzen du. Dena da komunitate, eta denak dira komunitatekoak, hortik aparte ez dira ezer. Gainera, errotazioa oso zuhurra da, eta epeak oso motzak. Agintea hamabostean behin aldatzen da eta errotatiboa izaten da ia maila guztietan. Ez dago herdoiltzeko astirik. Gizarte konplexu batean ordezkatze eta profesionalizatze maila bat ere beharrezkoa da, baldin eta ondo kontrolatzen den, eta hori gutxitan gertatzen da. Elkarrekiko orekan, uztarketa egokian datza gakoa.

**EZLNren sorreratik** 40 urte igaro diren honetan galdera bada *pobreak eta txikiak* izanik nola iraun duten 30 urtez bizirik, erantzungo dizute herri zapatistak komunitatearen eraikuntzan bizitzea erabaki zuela eta hori dela beren lorpen nagusia. Izan ere, lurralde zapatistan ez dago gerra-tankerik, ez dago instalazio militarizaturik, ez dago bunkerrik; ez daude, halaber, garapen kapitalistaren ereduak parametro desiragarritzat ezartzen dituen elementuak.

Kapitalismoak natura merkantzia bihurtu du. Sozialismo burokratiko harroputzak edozein modutara erabili zuen natura. Beraientzat, Ama Lurra edo Pacha Mama sakratua da, sustraia. Eta horren baitan lurraren jabetzarik eza kokatzen dute. Hori da apustu zapatista:

Bizi duten prozesuan ez dute armen erabilerarik behar, baina herri zapatistei eraso egiten badiete, *euren burua defendatuko dute*.

Halaz ere, zapatistek ez dute beren burua inongo eta inorentzat eredutzat jartzen. Gainera, ez dute uste bide guztiak guztirako onak direnik. Bidean jarri dira, dakitena eginez eta ez dakitenaz galdetuz. Ez da gutxi. ●

# Betaurrekoak



**JIRA**
Maialen Akizu

Orain, betaurrekoak esanda nekez etorriko zait burura Pere Aragones, Peio Otxandiano, Mss Shunine edo Harry Potter. Betaurrekoek ikusteko modua aldatzen dute, eta betaurrekoak ikusteko modua aldatu egin da, bortxaketarekiko begirada pixka bat aldatu den bezala. Giselle Pelicotek hitz egitea erabaki du, salatzea, berrogeita hamar horien aurrean esertzea, eta konturatu gara nolabait bortxatzaile bat gizon batengandik bereizteko daturik ez dagoela, lagunak, jatorrak, harrikoa egiten dutenak direla. Eta hori dena publikoki egin du. Orain arte uste izan da biktimaren izena eta irudia zabaltzeak are gehiago biktimizatzen zuela, fokua desbideratzea zekarrela, eta juridikoki ere hala hobetsi da. Biktima bakoitzak nahi eta ahal duena egin dezala, baina iruditzen zait Gisellek horretan ere bide bat ireki duela. Egia da epaiketa publiko egiteak morboa hauspotzen duela irudiaren sisteman, baina bere melena eta pausaje, betaurrekoak jantzita agertu da orain arte Giselle; aste honetan, horiek ere kendu ditu. ●

# Autoak



**BIRA**
Onintza Enbeita

Duela ez hainbeste urte gure etxe azpiko errepide ertzetik oinez joaten ginen tren geltokira edo auzora. Marra zuriaren barruko partetik joatearekin nahikoa zen. Orain ezingo genuke. Espaloiak eta zubiak dauden lekuetan tira, baina marra zuria txitean-pitean zapaltzen dute abiadura bizian doazen milaka autok. Amaigabeko joan-etorria da. Herria zati bi egiten du errepideak eta hala ere, ez gara beti ausartzen halakoak ozen esatera. Izan ere, deseatzen daude kexa gaitzen errepide gehiago eraikitzeko, eta ez dakit nik hori den nahi duguna. Errepide gehiagok auto gehiago ekarriko dituzte; baita baserrirako lurrak gutxitu ere.

Gaur autorik gabeko eguna ei da. Goizero pentsatzen dut errepidean gurutzatzen ditudan edo goiko errepidetik behekora begiratzen dudanean ikusten ditudan gidari bakartiek elkartzeko aukera dutela. Goizero pentsatzen dut autoa gutxiago erabili beharko genukeela, baina gaur ere larri ibiliko nintzateke autorik gabe bertsotara joateko. Autoaren neurrirako bizimoduak eraiki ditugula dirudi. ●

# Zis



**BI TARTE**

Ane Labaka Mayoz
Mariñe Arbeo Astigarraga

Oldeka egin zenuen negar Estibaliz Urresolaren *20.000 especies de abejas* filma ikusi zenuenean, Maialen Lujanbioren bertsoek zirraratu zintuztenean Irunen nahiz aurrenekoz irakurri zenuenean *Mari-mutil handi baten bluesa* —sinesgaitza zaizu oraindik Leslie Feinbergek liburu hau zu jaio eta urtebetera idatzi izana— .

Iskin egin zenien haurdun zeundelarik beste ezer baino lehen neska ala mutila ote zen galdetzen zizutenei; erditu ondoren ere haurra kalean ikusi eta galdera berarekin tematzen zirenei. Jantzi diozu oinordetutako arropa, eta nahita gelditu zara isilik norbait genero-markaz *nahasi* den aldiro. Grazia egin dizu egoerak. Onartzea kosta arren, guraso gisa harrotasun puntu bat sentitu duzu barru-barruan. Inoizko argien ulertzen ari zara zenbateraino den generoa eraikia. Zenbateraino den binomiala gure begirada.

Lehenago, behin baino gehiagotan entzun izan duzu «gorputz okerrean» jaio zirenei buruzko errelatoa. Gero eta gehiagotan ikusten dituzu kalean Naizenen koloretako kamisetak ere. Antza denez, gizarteari onargarrixeago zaizkio trantsizioak ume gorputzean. Onargarrixeago zaio bide jakin bat, izateko modu zehatz bat. Mutur batetik beste muturrera igarotzea; kaxoi batetik bestera pasatu eta bertan giltzapetzea betirako. Ditxosozko passinga lortzea ahalik eta azkarren. Ez dadila ezer nabaritu.

Deseroso zaude, haatik, aurrean neska edo mutila den igarri ezin duzun norbait daukazunean. Ez zenuke nahi, baina traba egiten dizu anbiguotasunak. Bere presentziak zurea kuestionatzen duelako, *per se*. Deseroso zaude, emakume arrazializatuek interpelatzen zaituztenean bezain.

> Zu ez zara TERFa, inondik ere. Asmo onenez ari zara —ia beti—. Eta hala ere. Jarrera, pentsaera eta jokabide transfoboak dituzula onartzea dagokizu; murtxikatzea, irenstea eta digeritzea

Deseroso entzun zenuen Lier Balantzategi Errasti ere egiak zarra-zarra botatzen, *#GorputzenBurujabetza Trans borrokaren aldeko geltoki bat* izeneko podcastean.

Zu ez zara TERFa, inondik ere. Asmo onenez ari zara —ia beti—. Eta hala ere. Jarrera, pentsaera eta jokabide transfoboak dituzula onartzea dagokizu; murtxikatzea, irenstea eta digeritzea. Balantzategik zuzenean galdetzen dizu prest ote zauden zure zistasuna auzitan jartzeko. Berak azaltzen duenez, badagoelako jende bat erabaki dezakeena, potentzialitatea daukana apurtzeko eta deserosoa izateko eta, beraz, ardura hartzea dagokiona. Hain zuzen ere, badagoelako beste jende bat erabaki ezin dezakeena, bere existentzia bera inkomodoa delako jada.

Behin honetara ezkero, badakizu zu zer jende zaren. Zeinen erosoa izan daitekeen araua, azpiratzen duzun norbaitek atzamar erakusleaz seinalatzen dizun arte. Eta astea joan eta astea etorri, Balantzategiri entzundakoei bueltaka jarraitzen duzu. ●

# *Erantzukizuna, elkartasuna eta arriskua gure autogobernuaren finantzaketan*

Maria Chivite Navascués
eta Imanol Pradales Gil

Nafarroako Gobernuko presidentea
eta Eusko Jaurlaritzako lehendakaria

Kontzertu Ekonomikoa eta Hitzarmen Ekonomikoa gure gaurko autogobernuaren osagairik bereziena dira. Autonomia maila gorena dute zerga-federalismoan oinarritutako ereduaren baitan. Kontzertuak eta Hitzarmen Ekonomikoak zerga-autonomiari lotuta dauden sustrai historiko sakonak dituzte. Izan ere, Erdi Aroko erregistro juridiko historikoak ere eskuragarri daude. Demokraziara igarotzeko trantsizio-prozesua eta foru-lurraldeen Eskubide Historikoen onarpen konstituzionala dira egun duten formulazioaren iturriak. Kontzertuak eta Hitzarmenak Gernikako Estatutuan eta Foru Hobekuntzan dute bere lege-esparrua, eta erabateko egonkortasun eta segurtasun juridikoa dute.

Gainera, indar handiena duten Espainiako eta Europako auzitegien onarpena dute. Hau da, Justizia Auzitegi Nagusiek, Auzitegi Gorenak, Konstituzio Auzitegiak eta Europar Batasuneko Justizia Auzitegiak babesten dituzte. Hori horrela izanik, Luxenburgoko Auzitegiak Azore uharteen auzian baliatu zuen doktrina bera aplikatuz, Auzitegi horiek guztiek ondorioztatu dutenez, autonomia instituzionala, prozedura autonomia eta autonomia ekonomikoa dute foru-lurraldeek; eta, beraz, funtsezko zeregina betetzen dute enpresen ingurune politiko eta ekonomikoa zehazterakoan; horren ondorioz, Kontzertu Ekonomikoa eta Hitzarmen Ekonomikoa guztiz bateragarritzat jotzen dira Europar Batasuneko Zuzenbidearekin.

Kontzertu Ekonomikoa eta Hitzarmen Ekonomikoa, hortaz, foru-tradizio historiko horren jarraipena dira, eta, gaur egungo legedian erabateko babesa dute juridikoki, politikoki eta jurisprudentziari dagokionez; hala eta guztiz ere, aldian-aldian araubide hauek kritikatu egiten dira, eta erabilera alderdikoia jasaten dute. Kritika horiek guztiak agerian uzten dute Zuzenbide Konparatuan bereziak direla eta ezaugarri zeharo desberdinak dituztela araubide komuneko autonomia-erkidegoen finantzaketa-erregimenaren aldean.

1980. urtetik hona, Autonomia Erkidegoak Finantzatzearen gaineko Lege Organikoa (AEFLO) onartu zenetik, oraindik, ezin izan da Autonomia Erkidego guztien finantzaketa egokia ahalbidetuko lukeen formularik aurkitu, eta, benetan, horixe da arazoaren muina; izan ere, batik bat, azkenengo bi hamarkadetan, gastuaren ikuspegitik begiratuta, Autonomia Erkidegoak zerbitzu publiko garrantzitsuenen emaile bihurtu dira, besteak beste, osasunaren, hezkuntzaren edo gizarte-zerbitzuen kasuan.

Europako jurisprudentziak eta Espainiako Konstituzio Auzitegiak argi utzi dutenez, Europaren, Konstituzioaren, legeen, politikaren eta ekonomiaren babes gorena dute Kontzertu Ekonomikoak eta Hitzarmen Ekonomikoak. Babes- eta segurtasun- juridikoko hori foru-lurraldeei bakarrik aitortu zaie, hau da, Arabari, Bizkaiari, Gipuzkoari eta Nafarroari. Horrek ez du esan nahi, ordea, araubide erkideko Autonomia Erkidegoen, araubide aldeanitza duten erkidegoen edo aldebikotasun-maila handiago edo txikiagoa duten erkidego horien finantzaketa-sisteman mekanismorik egituratu ezin denik, gure eredu bereziaren ezaugarri batzuk imitatuta edo gure ereduaren antza hartuta; edozein kasutan, beste horiek ez lukete izango foraltasun ukiezinaren berme instituzionalak Kontzertuari eta Hitzarmenari denboraren joanean eskaintzen dien segurtasuna eta egonkortasuna.

Kontzertu Ekonomikoak eta Hitzarmenak beren lurraldeetarako autonomia-araubide bat egituratzen dute. Horri esker, lurralde hauetan Estatuarena ez bezalako zerga-politika propioa garatu daiteke zuzeneko zergapetzeari eta udal-zergei dagokienez, bai eta zeharkako zergapetzearen figura zehatz batzuetan ere. Hala, normalean Estatuen Administrazio Orokorren esku bakarrik egon ohi den politika fiskaleko tresna hori eskura dute erakundeek. Hain justu ere, Espainiako Estatuaren barruan bost zerga-sistema orokor eta bost zerga-administrazio oso egotea dakar Kontzertu Ekonomikoaren eta Hitzarmenaren ereduak; nazioarteko testuinguruan ez dago gisa honetako adibide gehiagorik.
Sistema hauei esker, lurralde hauetan zerga-politika propioa garatu ahal da; eta, hortaz, zerga-tresna hori lurralde bakoitzaren idiosinkrasiara egokitu daiteke, eta tarte handiagoa eduki, jarduera ekonomikoa dinamizatzeko eta hazkunde ekonomikoa bultzatzeko. Hortaz, gizarte-politika gehiago garatu daitezke. Honek herritarren ongizatea hobetzea dakar eta sistema jasangarria izatea bermatzen da.

Bigarrenik, Kontzertuak eta Hitzarmenak zerga-administrazio integraltzat jotzen dituzte Foru Ogasunak; zentzu horretan, Zerga-administrazio modernoak eraiki dira, guztiz informatizatuta daudenak; horretaz gain, hurbilekoak dira, eta ahalegin guztiak egiten dituzte zergadunei eta eragile ekonomikoei segurtasun juridikoa eskaintzeko. Era berean, herritarrei laguntza hobea emateko edo iruzur fiskalaren aurka borrokatzeko apustu irmoa egin da; horri esker, denek aitortzen diete zerga-administrazioei fidagarriak, seguruak, gardenak, bizkorrak eta gertuak direla. Horrek guztiak jarduera ekonomikoa indartzeko eta herrialdearen aberastasuna handitzeko aurrera eraman diren era bateko edo besteko zerga-politikako neurriak osatzen ditu.

Hirugarrenik, komeni da Kontzertu Ekonomikoaren eta Hitzarmenaren ezaugarri nagusi bat nabarmentzea, alegia, alde bakarreko arriskua. Foru Ogasunek Estatuko zerga-sistemaren parte diren zerga guztiak biltzen dituzte, inportaziorako zergak izan ezik. Bitarteko horiek erabiliz, eta arriskua alde bakarrekoa dela, Estatuko Administrazio Orokorrarekin dituzten betebeharrei erantzuten diete (Kupoa, Ekarpena eta bestelako finantza-fluxu batzuk), bai eta gastu publiko propio osoari ere. Hori horrela izanik, beti azaltzen dugu Ogasun propioa aurrera eramateak, kudeaketari begira, erantzukizun, zorroztasun eta autoexijentzia handia eskatzen dituela.

Eta oraindik beharrezkoa den pedagogiaren ildotik, gogora dezagun, era berean, Kupoak eta Ekarpenak ez dutela zerikusirik Foru Ogasunek bilketa gehiago edo gutxiago egitearekin, ez baita kalkulatzen bildutako baliabideen zati alikuota modura; horren ordez, Estatuko Aurrekontu Orokorretan Erkidego bakoitzak bereganatu gabeko eskumenekin bat datozen gastu publikoko partida guztiak identifikatuz kalkulatzen da. Horrela, bereganatu ez dituen eskumen horietan Estatuak gastatu nahi dituen guztizko zenbatekoak hartzen dira, eta Erkidego bakoitzak Estatu osoan duen pisua islatzen duen egozpen-indizea aplikatzen da. Euskal Autonomia Erkidegoaren kasuan, indize hori % 6,24 da; eta Nafarroako Foru Komunitatearen kasuan, % 1,6. Bi ehuneko horiek EAEko eta Nafarroako biztanleek Estatu osoko biztanleen barruan duten portzentajea baino handiagoak dira.

Laugarrenik, Estatuarekin finantza-harremanak izateko moduarengatik, Estatuko gainerako autonomia-erkidegoekin solidarioak dira kontzertuaren eta hitzarmenaren araubideak. Izan ere, Estatuarekiko elkartasuna elikatzeko norabide horretan, elkarren osagarri diren lau elementu daude: lehenik, Estatuak Lurralde arteko Konpentsazio Funtserako zuzkidura gisa ezartzen duen urteko ekarpena; bigarrenik, Estatuak jaulkitako zor publiko guztiaren finantza-kargari egindako ekarpena, 2008. urtetik Likidezia Funts Autonomiko garrantzitsuei atxikitako erregimen komuneko autonomia-erkidegoen gastuak finantzatzeko jaulki dena barne hartuta; hirugarrenik, EAEko edo Nafarroako erakundeek ez dugu aparteko finantzaketarik jasotzen krisi ekonomikoko garaietan, horren ordez, alde bakarretik, geure gain hartzen ditugu zerga-sarreren murrizketaren ondorioak; eta, azkenik, laugarrenik, kupoaren eta ekarpenaren egozpen-indizea, funtsean, lurralde bakoitzak Estatuarekiko duen errentaren arabera zehazten dira, hor diferentzia bat dago, eta, beraz, alde horrek esan nahi du EAEk eta Nafarroak baliabide ekonomiko gehiago transferitzen dizkiotela Estatuko Administrazio Zentralari, Administrazio Zentralak gainerako Autonomia Erkidegoetan gastu publikoak finantza ditzan.

Bukatzeko, nabarmendu behar da Kontzertuaren eta Hitzarmenaren araubideek modu zehatz batean konpontzen dituztela zerga-jurisdikzio desberdinen arteko harreman-arauei lotutako gai unibertsalak, batik bat merkatu bakar baten barruan garatzen badira edo ekoizpen-faktoreen mugimendu- edo zirkulazio-askatasunak errespetatzen dituen unitate handiago baten barruan garatzen badira. Era berean, zergapeko beraren edo enpresa-talde beraren gainean dihardute jurisdikzio desberdinen arteko eztabaidak konpontzeko mekanismoak jasotzen dituzte; horretaz gain, Administrazioen arteko elkarrizketarako eta harremanetarako irtenbideak eta ereduaren elementu dinamikoei buruzko akordio-betebeharrak eskaintzen dituzte, eta, horrela, denboraren eta inguruabar juridiko, politiko, ekonomiko edo sozialen bilakaerara erabat egokitzen direla bermatzen da.

Zentzu horretan, federalismo fiskalaren esparruan bi eredu hauek onartzen dira; eta, hain justu ere, biak ala biak aitzindariak izan dira une honetan nazioarteko foroetan edo Europar Batasuneko erakundeetan jorratzen ari diren zenbait arazori irtenbideak ezartzeko orduan.

Kontzertua eta Hitzarmena, beraz, gure politika publikoak aurrera eramateko aukera ematen diguten funtsezko elementuak dira EAEko eta Nafarroako erakundeentzat; izan ere, araubide horiei esker, Foru Ogasunek normaltasunez bete ditzakete beren eginkizunak, eta harreman-esparru egokia ezarri Estatuaren eta beste herrialde batzuen zerga-administrazioekin. Araubide hau Historiak babesten du, bai eta Estatuaren eta Europar Batasunaren egungo egitura juridiko-politikoa arautzen duten funtsezko legeek ere; era berean, maila goreneko onarpen judiziala du; eta, hain justu ere, araubide honek duen egonkortasunari eta segurtasun judizialari esker eraiki ahal izan dugu gaur egun bizi dugun ongizatearen gizartea.

Azken batean, kudeaketari dagokionez, eredu honek erantzukizun eta konpromiso handia eskatzen ditu; era berean, guztiz ezinbestekoa da fiskalitatean ere ardura handiz jokatzea. Sistema hau ez da inola ere inoren aurka egituratzen, aitzitik, osagai solidario sakona du, eta bere lege-babesak instituzioen arteko harremanak indartzen ditu, izan ere, Konstituzioan bertan ainguratuta dago. Beraz, araubide hauek lekua dute gure estatu-ereduaren barruan, edozein delarik ere araubide erkideko autonomia-erkidegoen finantzaketa-eredua egungoa ez den beste eredu batera eramateko prozesuaren hausnarketaren ondorioa.

Horregatik guztiagatik, bidezkoa da araubide hauek balioestea, errespetatzea eta defendatzeko konpromisoa berrestea, gure Autogobernuaren giltzarria eta Eskubide historikoa baitira. ●

# Zozketak

BERRIA ekonomikoki babesten duen komunitatearentzako zozketak

PARTE HARTZEKO: igandetik asteartera
***Berria.eus/komunitatea***
edo **943-30 43 47**

Parte hartzeko azken eguna, **irailaren 24a**, asteartea
SARIDUNAK **ostegunean** argitaratuko dira.



**01 · Sagarlore**

Bi lagunentzako
egonaldia eta gosaria



**02 · Getaria apartamentuak**

Lau lagunentzako gaua apartamentu
batean, igandetik ostegunera



**03 · Nekatur**
**Euskadiko landa ostatuen elkartea**

Bi lagunentzako
egonaldia eta gosaria



**04 · Antsotegi hotela**

Bi lagunentzako
egonaldia eta gosaria




**05 · Baskeyrentals**

Asteburu-pasa bat
(jende kopurua etxearen arabera)



**06 · Hotel balneario areatza**

Bi lagunentzako egonaldia, gosaria
eta zikuitu termalerako sarrerak



**07 · Arantzako atepetxea**

Bi lagunentzako
egonaldia eta gosaria



**08 · Altzibar Berri nekazal etxea**

Bi lagunentzako bi gaueko
egonaldia eta gosaria



**09 · Artaza Urederra**

Bi lagunentzako bi gaueko
egonaldia etxola batean



**10 · Armañon aterpetxea**

Aterpetxean
egonaldia

# Sarrerak



**Erroiz bisita gidatua**

Hamar lagunentzako bina sarrera

Irailak 28 • 11:00
Erroiz olioak • LANTZIEGO




**Non dira haurrak? - Aurrestreinaldia**

Bi sarrera bikoitz

Irailak 27 • 19:30
BBK aretoa • BILBO




**Bardoak - Finalaurrea**

Bi lagunentzako bina sarrera
asteburuko edozein finalaurrekorako

# Golik gabe ez dago susperraldirik

→ Reala **ezinean** aritu da berriz ate aurrean, eta puntu bakarrarekin itzuli da Valladolidetik.

→ Luzapenak kontuan hartu gabe, txuri-urdinek **417 minutu** daramatzate golik sartu gabe.

→ «Gosea, oldarkor aritzea eta asmatzea falta izan zaigu; **pena da**», esan du Imanolek.




VALLADOLID REALA

**Julen Etxeberria**

Reala suspertu ezinik dabil oraindik. Irabazi egin behar du gora egiteko, baina irabazteko, golak sartu behar derrigorrez, eta ezinean ari da ate aurrean. Estatistikak argigarriak dira: lehen zazpi jardunaldiak jokatu eta gero, hiru gol baino ez ditu sartu. Hori gutxi ez, eta aspaldi sartu zuen azkena, hirugarren jardunaldian, Anoetan, Alavesen aurkako derbian. Brais Mendezek sartu zuen, 33. minutuan. Ordutik ez da gai izan berriro gola sartzeko. Epaileek ezarritako luzapenak kontuan hartu gabe, 417 minutu daramatza aurkariaren atea zulatu gabe.

Uste ezaguna da, futbolean, barkatzen duenak garesti ordaintzen duela gero. Horixe gertatzen ari zaio Realari: garesti ordaintzen ari da. Aurkariak ez baitaude barkatzeko. Eta hau da ondorioa: bost puntu bakarrik bildu, eta sailkapenaren azken postuetan dago talde txuri-urdina. Imanol Alguacilek seigarren urtea du Reala hasieratik zuzentzen, eta taldea inoiz ez da horren gaizki aritu.

Egoera kezkagarria da, eta atzo Valladoliden (Espainia) gertatutakoak kezka handitu besterik ez du egingo. Reala ezinean aritu zen berriro ate aurrean. Oraingoan, ordea, ez zuen ordaindu, Valladolidek ez baitzuen asmatu. Horri esker, puntu bat lortu zuen Realak. Baina garratza da puntua. Irabazi beharra zuen, suspertzeko eta zalantzak uxatzeko. Ez zuen egin, ordea, eta zalantzaz beteta jarraituko du. Ez da Europa ligari ekiteko modurik onena.

### Oskarssonekin ere ez

Galdu egin zuen arren, Reala Real Madrilen aurka aritu da ondoen denboraldi honetan. Egun horretan zelairatu zuen antzeko hamaikakoaren alde egin zuen Imanolek atzo: talde horretako bederatzi jokalari aritu ziren berriro. Bi aldaketa bakarrik egin zituen: batetik, Turrientesek Javi Lopez ordezkatu zuen, eta Sergio Gomez lehen aldiz aritu zen defentsaren ezker hegalean; bestetik, Oskarssonek Sadiqen tokia hartu zuen, eta aurrenekoz jokatu zuen hasieratik.



**ETSITA.** Sheraldo Becker, haserre, aukera bat huts egin ondoren. R. GARCIA / EFE

Hain zuzen, Oskarssonek izan zuen lehen aukera, hamargarren minutuan. Kubo ezkerretik sartu zen areara, erdiratu egin zuen, eta Oskarssonnek errematatu. Baina Cenkek ate aurrean urrundu zuen baloia. Aramburuk jaso zuen aldaratzea, eta atera jaurti, baina bisitarien atezainak, Heinek, baloia harrapatu zuen.

Aukera garbiagoa izan zuen Realak ordu laurden geroago, 27. minutuan. Kubok baloia berreskuratu zuen bere arean, pase luzea egin zuen aurrera, eta Beckerrek bere abiadura baliatu zuen, baloia jaso eta aurkariaren areara bakarrik iristeko. Baina gehiegi pentsatu zuen errematatzeko orduan, eta, jaurti zuenerako, Amallahk baloia ukitu zuen, eta Heinek urrundu.

Lehen zatia amaitzear zela bisitariek beste aukera bat izan zuten, eta hura ere oso garbia izan zen. Becker eta Hein izan ziren berriro protagonista. Realeko aurrelariak buruz errematatu zuen Aramburuk eskuinetik egindako erdiraketa, baina Valladolideko atezainak geldiketa bikaina egin zion. Halaxe amaitu zen lehen zatia. Nagusi zen Reala, baina ezin izan zuen nagusitasun hori gola sartuz indartu.

### Sufritzen bukatu du

Atsedenaldiak mesede egin zion Valladolidi. Indartsu ekin zion, eta bi aukera argi izan zituen lehen ordu laurdenean: Aramburuk Latasarena zapuztu zuen, eta Remirok Mororena. Sufritzen ari zen Reala. Imanoli ez zitzaion gustatu ikusten ari zen hori, eta bi aldaketa egin zituen 61. minutuan: Oiartzabal eta Olasagasti zelairatu zituen Oskarssonen eta Sucicen ordez. Zerbait aldatu nahi zuen.

Nahi bai, eta lortu ere bai, Realak gainetik kendu baitzuen Valladoliden presioa, eta berriro arriskua sortzen hasi. Oiartzabalek izan zuen aurreneko aukera, eta Zubimendik bigarrena. 66. minutuan, Oiartzabalek gola sartu zuen, baina epaileak baliogabetu egin zion, jokoz kanpo zegoelako.

Bost minutu geroago, Becker asmatzear izan zen, baina haren jaurtiketak langa jo zuen. Handik gutxira, Oiartzabalek gora errematatu zuen buruz. Imanolek azken ahalegina egin zuen, eta 81. minutuan, Sadiq zelairatu zuen Kuboren ordez. Aldi berean, Pacheco irten zen, Aguerdek min hartu baitzuen. Aldaketek, ordea, ez zuten ezer aldatu. Are gehiago, Reala ez zen gai izan berriro arriskua sortzeko. Valladolid, aldiz, kapaz izan zen azken minutuetan bisitariak estu hartzeko. Sufritzen bukatu zuten donostiarrek. Seinale txarra da. Beste bat.

Atsekabetuta zegoen Imanol: «Gosea, oldarkor aritzea, asmatzea falta izan zaigu: denetarik pixka bat. 80 minutuan oso ondo aritu gara, baina azken minutuetan antsietateak erasan digu, eta galtzear egon gara. Pena da». ●

## Realak irabazi egin du, eta Eibarrek galdu

**● Joerak irauli ziren atzo: lehen bi partidak galdu eta gero, irabazi egin zuen Realak, Levanteren zelaian: 1-2. Erika Gonzalezek aurretik jarri zituen etxekoak, hasi eta gutxira, baina txuri-urdinek emaitza irauli zuten bigarren zatian, Amaiur Sarriegik sartutako bi golei esker.**

**Eibarri, aldiz, bolada ona eten zaio. Lehen bi neurketak irabazi eta gero, galdu egin zuen atzo, Granadan (Espainia): 2-0. Eibartarrei azken hamar minutuetan sartu zizkieten bi golak: Edna Imadek biak.**

**Athleticeko bi talde nagusiek gaur jokatuko dute: emakumezkoenak Real Madrilen zelaian jokatuko du (19:00, DAZN); gizonezkoenak, berriz, San Mamesen, Celtaren aurka (16:15, Movistar La Liga).**




**POZA.** Osasunako jokalariak, Aimar Orozek sartutako gola ospatzen. IÑIGO URIZ / FOKU

# Merituak, beste baterako

→ Osasunak **hirugarren partida irabazi du jarraian** Sadarren, Las Palmasen aurka.
→ Gorritxoak hainbestean aritu dira, eta larrien zeudenean sartu du gola Aimarrek.

**2—1**

| OSASUNA | LAS PALMAS |
|---|---|

**1-0.** Budimirrek, penaltiz (39. min.).
**1-1.** Moleirok (41. min.).
**2-1.** Aimarrek (60. min.).

**Eñaut Agirrebengoa**

Gutxirekin asko lortu zuen atzo Osasunak, Las Palmasen aurka. Joko aldetik makal aritu zen, baina emaitzarik onena lortu zuen: garaipena. Jada hiru kateatu ditu Sadarren, aurrez Mallorca eta Celta azpiratu ostean. Gorritxoek hamar puntu dituzte, denak zaleen beroan eskuratuak. Etxetik kanpo hotz egiten du, baina Iruñean dena nahieran irteten ari zaie. Hainbeste, ezen atzo askorik egin behar izan gabe irabazi baitzuten. Denbora askoan partidari neurria hartu ezinik aritu ziren, eta hala ere, gainditu egin zuten Las Palmas, Ante Budimirrek eta Aimar Orozek sartutako golei esker.

Kanariarrak bolada txarrean dira, eta letagin kamutsak izan zituzten atzo. Ez zuten probestu beren alde izandako abagune andana. Nafarrek, ordea, oso zorrotz jardun zuten: lau jaurtiketa egin zituzten aurkariaren atera, eta horietako bik sareetan bukatu zuten. Budimir izan zen asmatzen lehena, 39. minutuan, berak eragindako penaltia baliatuta. Osasunaren bristada bakarretako bat izan zen lehen zatian. Nafarrak ez ziren gai izan erritmo bizian jokatzeko, eta nekez artegatu zuten Las Palmas. Geldikako jokoan asmatu zuten bakarrik. Gero, atezuan egon ziren bigarren zatian. Harik eta Ruben Garciak eta Aimarrek eskuaira eta kartaboia atera zituzten arte. Batak pase ederra marraztu zuen areara bidean, eta besteak sinadura ederra jarri zion jokaldiari.

Gol horren ondotik iritsi ziren Osasunaren minuturik onenak. Lerroak elkartu, eta area inguruan gotortu: sariari eustea izan zuten lehentasun, eta bete zuten helburua. Gainera, bi aukera paregabe izan zituzten 3-1ekoa egiteko. Zigor handiegia zatekeen Las Palmasentzat, gutxienez puntu bat patrikaratzeko ahalegina egin baitzuen. Etxekoak baino gehiago izan zen denbora gehienean. Lehen zatian, min handia egin zion Osasunari trantsizioetan, eta lerro artean aise zabaldu zizkion zuloak. Alabaina, kanariarrek Sergio Herrerarekin topo egin zuten. Atezainak, besteak beste, ezerezean utzi zuen Moleiroren buruz buruko aukera. Eta, halako batean, Budimirri elastikotik heldu zioten area barruan. Falta adierazi zuen epaileak, eta penaltia gero, VARaren esku hartzea tarteko. Kroaziarrak ez zuen huts egin. Pozak, baina, hiru minutu eskas iraun zien gorritxoei, Las Palmasek berdindu egin baitzuen, Moleirok gola sartuta.

### Euria eta aukerak

Luze jo zuen lehen zatiak. Gero, aldageletatik bueltan, euri zaparradak bat egin zuen Las Palmasen aukera oldearekin. Gorritxoak itota egon ziren, erauntsiari eutsi ezinik. Aurkaria alde guztietatik sartu zitzaion arean. Fabio Silva izan zen mehatxu nagusia: gol bat baliogabetu zioten, eta segidan, gutxigatik kanpora jaurti zuen. Ez zegoen Osasunaren arrastorik ere, baina partidak, sarri, kalitateak eta talentu teknikoak ebazten dituzte. Atzo, Ruben Garciaren eta Aimarren konexioa izan zen giltza. Azken txanpan garaipena segurtatzeko moduan izan ziren Raul Garcia eta Pablo Ibañez, baina ez zuten asmatu. Hala ere, garaipenak ez zion ihes egin Osasunari.

Pozik zegoen Vicente Moreno neurketa amaitu zenean. «Ez gara aritu etxean jokatutako aurreko partidetan bezain ondo, baina lehian ibili, sufritzen jakin, eta irabazi egin dugu. Hori da garrantzitsuena. Lehen Mailan zaila da etxean hiru partida jarraian irabaztea». ●




## Ansa ariko da Barrenetxearen aurka finalean

**ERREMONTEA**— Imanol Ansak eta Endika Barrenetxeak jokatuko dute Buruz Buruko Txapelketako finala, datorren larunbatean, Galarretan. Ansa II.a atzo sailkatu zen finalerako, finalerdian Javier Urrizari 30-22 irabazita. Partidaren lehen erdia oso parekatua izan zen (15-15), baina egungo txapeldunak lehia desorekatu zuen azken txanpan.

## Chourraut irabazle Munduko Kopako proban

**PIRAGUISMOA**— Maialen Chourrautek beste garaipen handi bat gehitu dio bere palmares ikusgarriari. Piraguista lasartearrak Munduko Kopako K1 mailako proba irabazi zuen atzo, La Seu d'Urgellen (Herrialde Katalanak). Bi segundoko zigorra jaso arren, bi segundo baino gehiagoren aldea atera zien bigarren eta hirugarren sailkatuei.

## Osertz Aldai beste urtebetez ariko da Isuntzan

**ARRAUNA**— Osertz Aldaik eta Isuntza klubak akordioa lortu dute, eta entrenatzaile hondarribiarra beste urtebetez arituko da Lekeitioko (Bizkaia) trainerua zuzentzen; hamargarren urtea du jarraian. Isuntza zazpigarren izan da aurten Eusko Label ligan.

# Puntualtasuna, ezinbestekoa

**Munduko Txirrindularitza Txapelketa gaur hasiko da, Suitzan. Erlojupekoak jokatuko dituzte asteazkenera arte: Evenepoel eta Dygert berriro irabazten saiatuko dira, baina aurkari gogorrak izango dituzte.**





**DYGERT ETA EVENEPOEL.** Estatubatuarra eta flandriarra, erlojupekoan. B. CZERWINSKI-T. SUAREZ / EFE

**E. Agirrebengoa**

Bakarrik eta arineketan, etengabe ordulariari begira. Errutina hertsagarri baten laburpena izan daiteke. Baita txirrindularitzako erlojupeko saioena ere. Ziklistek desafio egiten diote denborari, jantzi aerodinamikoak soinean eta bizikleta adardunaren gainean. Garaiz iristea dute helburu, orratzak ahalik eta azkarren gelditutа. Bada, puntualtasun zorrotza izan beharko dute aurtengo Munduko Txapelketan, Suitzan ariko baitira, erlojurik zehatzenen herrialdean. Erlojupekoak gaurtik asteazkenera egingo dituzte; horren ondoren, errepideko proben txanda izango da, igandera bitarte.

Suitzako erlojuek zehaztasuna baino are handiagoa dute prezioa. Luxuaren erakusgarri dira, egunotan lehiatuko den txirrindulari multzoa bezalaxe. Erlojuaren kontrako saioei dagokienez, munduko espezialistarik onenen bilgune izango dira Zurich inguruan jokatuko diren probak —UCIk hiri horretan antolatu du txapelketa—. Sei izango dira guztira: gaur, elite mailako gizonezko eta emakumezkoek jardungo dute, 12:00etan eta 14:45ean; bihar, 23 urtez azpiko eta junior mailako gizonezkoek, 09:15ean eta 14:45ean; etzi, junior mailako emakumezkoek, 08:30ean; eta asteazkenean, berriz, taldekako erlojupeko mistoaren txanda izango da, 14:00etan.

Maila nagusiko emakumezkoek ekingo diote lehiari, gaur. 30 kilometroko ibilbidea osatu beharko dute: gorabeheratsua da hasieran, eta guztiz etzana bukaeran. Aldapen eraginez, baliteke espezialista petoen eta bestelako txirrindularien arteko desoreka berdintzea. Adituen saileаn dago Chloe Dygert (AEBak), iazko txapelduna. Garaipena berritu nahi du, eta era berean, Olinpiar Jokoetako arantza atera. Parisen Grace Brownek (Australia) kolkoratu zuen urrea, eta ortzadar maillota bereganatzen saiatuko da gaur. Ellen van Dijk (Herbehereak) ere ezinbestean aipatu behar da, hiru bider izan baita munduko txapeldun.

Haiei aurre egiten saiatuko dira Demi Vollering (Herbehereak) eta Lotte Kopecky (Belgika), ibilbideko lehen kilometro malkartsuak baliatuz. Vollering iaz lehiatu zen estreinakoz erlojupeko proban, eta seigarren finitu zuen. Kopecky Belgikako Txapelketako azken sei erlojupekoetan gailendu da, baina hark ere bigarren aldia izango du Munduko Txapelketan —bederatzigarren izan zen 2022an—.



# 11

**EUSKAL ZIKLISTAK MUNDUKO TXAPELKETAN.** Euskal Herriko 11 txirrindulari izango dira Munduko Txapelketan: Alex Aranburu, Pello Bilbao, Mikel Landa, Usoa Ostolaza, Eneritz Vadillo, Markel Beloki, Iker Mintegi, Igor Arrieta, Paula Ostiz, Irati Aranguren eta Ayala Serrano.

## Urrezko erronka

Emakumezkoetan bezala, elite mailako gizonezkoen erlojupekoan ere ez da euskal ziklistarik izango. Iaz Remco Evenepoel (Belgika) izan zen puntualena, eta aurten ere erlojua orduan jartzen saiatuko da. Parisen urrezko bi domina lortu zituen, eta Munduko Txapelketan balentria egin nahi du berriro. Gaur saiatuko da lehen garaipena lortzen, 46 kilometroko ibilbidean. Laua da oro har, baina zenbait koska ditu erdialdean. Hobe Evenepoelentzat, baita Primoz Roglicentzat ere (Eslovenia). Bolada oso onean da, Espainiako Vuelta irabazi ondotik. Stefan Kueng (Suitza) ere sasoiko dago, eta dominarik preziatuena lortzen saiatuko da etxean

Filippo Ganna (Italia) bi aldiz izan da munduko txapeldun, baina ordularia atzeratu egin zaio azkenaldian. Gora doa, berriz, Joshua Tarling (Britainia Handia), baina baliteke maldan gora ibiltzeak kalte egitea. Haiekin batera, beste hautagai ugari daude: Joao Almeida (Portugal), Brandon McNulty (AEBak), Edoardo Affini (Italia), Jay Vine (Australia)...

Azpiko mailetan, hiru euskal ziklista lehiatuko dira bakarka: Markel Beloki 23 urtez azpikoetan, eta Paula Ostiz eta Irati Aranguren juniorretan. Horren ondoren, Belokik ez du egingo iraupen proba; Ostizek eta Arangurenek, ordea, bai, beste zortzi euskal ziklistarekin batera. ●

## Irratixe



**IRRATIA**
Arantza Gutierrez Paz

Santa Eufemia ospatu zuten astelehenean Bermeon, eta egun hori aukeratu zuten Itsuki irratia berriro kaleratzeko; lau egun lehenago, udalak eta Kostarri kultur elkarteak martxan jartzeko hitzarmena sinatu zuten. Arazo ekonomikoak direla medio, 2022an isildu zituen mikrofonoak, 37 urtez ia egunero bermeotarren ahotsa izan eta gero. Urte hartako urtarrilaren azken egunean *Goizero* magazinak adio esan bazuen ere, gaur, berriz, zorioneko albistea da uhinetara itzultzea, indarberrituta eta gaztetuta.

Nik neuk lerro hauetatik behin baino gehiagotan nabarmendu dut tokiko komunikabideek —eta bereziki irratiek— errotuta dauden komunitatea kohesionatzeko duten ahalmena, udal administrazioa herritarrengana hurbiltzekoa, zerbitzu publikoa eskaintzeko balioa eta bizitza kulturala eta komertziala suspertzeko funtzioa. Itsukiren kasuan, gainera, bertako euskaraz mintzo ohi dira, eta horrek plus bat ematen dio, ez baita oso ohikoa Bermeoko euskara hedabideetan entzutea, ezta ikasle izan nituen Ilaski Serrano edo Xabi Casado aurkezle gisa ari direnean ere.

Itxaron beharko dugu programazio berria entzun arte, baina bultzatzailek diote «eraberrituta» itzuli direla eta, formatu berritzailea ekarri arren, «lehengo kutsua» mantenduko dutela. Dirudienez, Josu Urkidi Elortegi, Jon Guarrotxena Layuno eta Ane Gangoiti Fradua daude berpizte honen atzean; hiru gazte horiek 2023an irabazi zuten Busturialdeko gazte ekintzaileei zuzendutako Ü-BAI saria, eskualdea promozionatzea helburu zuen *Urdaibai Euskarri* izeneko podcast baten ideiarekin. Ez dut aurkitu saritutriko saioa, baina ziur nago halako aitortza jasotzeak bultzada eman diela erraza izango ez den bideari ekiteko. Zorterik onena opa diet. Bermeorekiko loturak estutu ditudanez, ziur egon entzungo dudala, apur bat nirea den herria hobeto ezagutzeko.

Itsuki ez da Busturialdeko irrati euskaldun bakarra, Gernikako Astran sortu baitzen Biztu Irratixe. Horren kasuan, berriz, zalantza gehiago ditut ikasturte honetan jarraituko duen ala ez. Izan ere, susmoa dut eskualdeak eta bereziki Urdaibaik herri-bozgorailuak behar dituela bertan egin nahi duten Guggenheim museoaren zentzugabekeria eta horrek ekar dezakeen hondamen urbanistikoa salatu, eta hango altxor ekologikoari eta sozialari balioa ematen dioten ahotsak entzun daitezen. ●

# ‘Maitexa eta Miraila’ igorriko du Kanaldudek

→ Haurrentzako ekoitzitako emankizun berria **datorren urtean** emitituko dute.

→ Kanaldudek eduki berriak iragarri ditu denboraldi hasierarako.

**MAITEXA.** Maiana Etxeberri, Maitexaren papera egiten, lehen ataleko fotograma batean. KANALDUDE

**Nerea Intxausti Castiñeira**

«Erdi Aroko fantasiazko mundu batean bizi da Maitexa. Egun batean, ispilu magiko bat deskubrituko du; hori piztu, eta jabetuko da beste errealitate batzuk erakutsiko dizkiola». Horixe kontatzen du *Maitexa eta Miraila* emankizunak. 30 minutuko hamar atalez osatutako haurrentzako eduki berria da, eta datorren urtean hedatuko du Kanaldude telebistak.

Teknologia berriak ardatz, naturarekiko atxikimendua, eskulanak, kultura eta musika uztartuko ditu telesail berriak. Proposamen berri horrekin, jakintza orokorrak partekatu eta eduki pedagogikoak hedatzea du asmo Kanaldudek.

Ekoizpen lanetan ari dira orain: maiatzean grabatu zituzten lehen lau atalak, Senpereko Larraldea etxean (Lapurdi). Datorren urtearen hasieran filmatuko dituzte geratzen zaizkien sei atalak. Istorioa Maryse Urruti antzezleak idatzitako gidoian oinarrituta dago; Urruti Itzuli antzerki konpainiaren sortzailea da. Maitexa pertsonaiari Maiana Etxeberrik ematen dio bizia, Parisko Arte Drama kontserbatorioan trebatutako antzezle gazteak.

*Maitexa eta Miraila* Kanaldude telebistan ikusi ahal izango da, baina baita Ipar Euskal Herri inguruko telebistetan ere: Orange 358 katean, Bouygues 339 katean, Free 948 katean eta SFR 496 katean. Gainontzekoek *Kanaldude.eus* web atarian zuzenean zein beste edozein momentutan ikusteko aukera izango dute, baita sakelako aplikazioaren bidez ere.

### Eduki gehiago

*Maitexa eta Mirailaz* gain, Kanaldude telebistak eduki berri gehiago iragarri ditu irailerako, denboraldi hasierarako. Atzo *Begi Erreak* film laburra estreinatu zuten —halere, telebistaren webgunean ikus daiteke, nahieran—. Kanaldudek berak ekoitzi du Azkarateko (Nafarroa) Frank Harrietek zuzendu duen bere lehen film laburra.

Gaur gauean, 20:00etan, *Xixtuka Kolegioak Kantuz* musika emanaldia eskainiko dute. Asteartean, berriz, 19:00etan, *Harri Salda talk show*-ren denboraldi berriko lehen atala igorriko dute. Battitt Crouspeyrek gidatuko du, eta gonbidatuak izango ditu saioan.

Astelehenetan, hitzaldiak emango dituzte; astearteetan, *Harri Salda* edo *Herenegun* saioak; asteazkenetan, telesailak; ostegunetan, dokumentalak; ostiraletan, musika; larunbatetan, fikzioak; eta igandeetan, eduki ikusgarriak. Eduki guztiak izango dira webgunean eta aplikazioan, nahi bezala ikusteko. Eguberrietara begira programazio berezi bat egingo dutela ere aurreratu dute. ●

## France Bleun tarte bat izango du telebistak

**● Kanaldudek tarte bat izango du France Bleu irratiak Euskal Herrian igortzen duen seinalean. Bi astetik behin, asteazkenetan, Kanaldude telebistaren «barneko eta inguruko» gaiez hitz egiteko tartea izango dute. Lauzpabost minutuko tartea izango da, euskaraz. Lehen saioan Xexili Foix kazetariak Mattin Troitiño Kanaldudeko komunikazio arduraduna elkarrizketatu du, eta, aurrerantzean, Kanaldudeko edukiekin zerikusia duten pertsonek egingo dituzte ekarpenak.**

# DENBORA-PASAK

## BAT ETA BAT EZ DA BETI BI

Lerro edo ilara bakoitzean, bi erantzunen anagrama duzu hirugarren definizioaren emaitza.
Anagrama: hitz baten letrak lekuz aldatzean sortzen den hitz berria (ABEGI - BEGIA)



1. Irri + Bihi, garau = Hirietan, bazterreko auzoa, aldiria
2. Txori bidaiaria + Arrazoi = Baratzeko landare
3. Gatza duena + Erdi, hitz elkarketan = Gazte jendea
4. Ertza, bazterra + Behar = Ahalegin
5. Jauzi, salto + Hitz, solas = Bizkaiko udalerria, Lea-Artibai eskualdean
6. Itsasontzietan, albo bakoitzaren goialde + Sarrera = Bazkuna, elkargoa
7. Lakarra + Noka, da = Ferekatu
8. Bizkaieraz, martxo + Edo = Ateak eta leihoak ixteko erabiltzen den pieza
9. Perretxiko mota + Jardun = Frantziako departamendua
10. Ostra batzuen maskorraren barnean eratzen den nakarrezko ale modukoa + Bururatu = Zerbaiten erantzukizuna egotzi
11. Maiz, askotan + Lizarratik igarotzen den ibaia = Asetzen du
12. Zuhurtzia + Minerala = Nafarroako udalerria, Lizarrako Merindadean

## KONTRAPASA

Erantzunak zehaztuz joan ahala, pasa ezazu letra bakoitza dagokion laukira, eta euskal atsotitz bat azalduko zaizu.

| | | | | | | |
|---|---|---|---|---|---|---|
| 1. Belar hezearen kolorekoa | 31 | 8 | 36 | 12 | 22 | 2 |
| 2. Egun argiz | 27 | 3 | 15 | 11 | 32 | 21 |
| 3. Saski handi | 14 | 24 | 35 | 17 | 5 | |
| 4. Asiako estatua, hiriburutzat Damasko duena | 23 | 10 | 29 | 19 | 34 | |
| 5. Artez | 9 | 4 | 26 | 20 | 16 | |
| 6. Iritsi | 33 | 30 | 1 | 6 | 28 | |
| 7. Gantza, koipea | 71 | 8 | 13 | 25 | 37 | |

| | | | | | | |
|---|---|---|---|---|---|---|
| 1 | 2 | 3 | 4 | 5 | 6 | 7 |
| ■ | 8 | 9 | 10 | 11 | ■ | 12 |
| 13 | 14 | 15 | 16 | 17 | 18 | 19 |
| ■ | 20 | 21 | ■ | 22 | 23 | 24 |
| 25 | ■ | 26 | 27 | 28 | 29 | 30 |
| ■ | 31 | 32 | 33 | 34 | 35 | 36 |
| 37 • | ■ | ■ | ■ | ■ | ■ | ■ |

## SUDOKU ZAILA

| | | | | | | | | |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| 7 | 6 | | 8 | | | | | |
| | 9 | 4 | | 5 | | | 1 | 7 |
| | | | | | | | | 8 |
| 4 | 2 | | | 8 | | | 9 | |
| | | | 3 | | 7 | | 2 | 5 |
| | | 3 | 1 | | | | | |
| 6 | | 2 | | | | | | |
| 5 | | | 7 | 1 | | 9 | | |
| | | | | | | 5 | | |

## AURREKO ERANTZUNAK

| | | | | | | | | | | |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| I | K | O | N | O | K | L | A | S | T | A |
| B | I | P | E | R | A | ■ | M | A | S | A |
| I | R | A | G | A | R | M | E | N | ■ | I |
| L | U | K | U | ■ | G | A | N | T | Z | U |
| I | R | A | T | O | A | K | ■ | S | E | N |
| A | G | ■ | E | S | K | U | K | O | A | ■ |
| K | I | M | A | K | ■ | R | A | L | L | Y |
| ■ | K | A | K | A | Z | T | U | ■ | D | E |
| I | O | I | ■ | R | E | U | N | I | O | N |
| G | A | R | A | B | I | ■ | A | S | K | A |
| O | ■ | U | R | I | N | T | S | U | A | K |

BISKATSU
BISUTSA
BISSAU
ABISU
BUIA
BAI
IBAR
BEIRA
KARIBE
BEROKIA
ABERKOIA

| | | | | | | | | |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| 7 | 5 | 1 | 3 | 2 | 8 | 6 | 4 | 9 |
| 6 | 3 | 9 | 1 | 4 | 5 | 7 | 2 | 8 |
| 8 | 4 | 2 | 7 | 6 | 9 | 3 | 1 | 5 |
| 5 | 6 | 3 | 2 | 9 | 4 | 1 | 8 | 7 |
| 1 | 2 | 8 | 5 | 7 | 6 | 9 | 3 | 4 |
| 9 | 7 | 4 | 8 | 1 | 3 | 2 | 5 | 6 |
| 2 | 9 | 6 | 4 | 5 | 1 | 8 | 7 | 3 |
| 3 | 1 | 5 | 6 | 8 | 7 | 4 | 9 | 2 |
| 4 | 8 | 7 | 9 | 3 | 2 | 5 | 6 | 1 |

| | | | | | | | | |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| 6 | 8 | 7 | 4 | 2 | 9 | 5 | 3 | 1 |
| 1 | 3 | 2 | 6 | 5 | 8 | 4 | 9 | 7 |
| 4 | 5 | 9 | 3 | 1 | 7 | 8 | 6 | 2 |
| 5 | 2 | 3 | 7 | 4 | 1 | 9 | 8 | 6 |
| 9 | 1 | 4 | 5 | 8 | 6 | 2 | 7 | 3 |
| 8 | 7 | 6 | 9 | 3 | 2 | 1 | 5 | 4 |
| 3 | 9 | 1 | 8 | 7 | 4 | 6 | 2 | 5 |
| 7 | 4 | 8 | 2 | 6 | 5 | 3 | 1 | 9 |
| 2 | 6 | 5 | 1 | 9 | 3 | 7 | 4 | 8 |

# EKITALDIAK

**Agoitz** Antzerkia: *Ezkaba*. Gaur, 19:00etan, Agoizko kultur etxean.

**Arrosa** Mugi-Muga. Gaur, 18:00etan, trinketean.

**Barakaldo** Rataplan 2024: *Noeud*. Gaur, 19:30ean, Eskulturen parkean.

**Bilbo** *I love Rock and Roll*. Rock Familian. Gaur, 12:00etan, Campos Eliseos antzokian.

**Bilbo** Saltapatras. Gaur, 18:00etan, BBK aretoan.

**Bilbo** Ronnie Romero. Gaur, 19:30ean, Bilboko Kafe Antzokian.

**Dulantzi** Antzerkia: *Harreman*. Zirkozaurre. Gaur, 18:00etan, herriko plazan.

**Elorrio** Antzerkia: *Geometría del Alma*. Plus teatroa. Gaur, 17:00etan, Arriola antzokian.

**Eskoriatza** Demode Quartet. Gaur, 13:00etan, Fernando Eskoriatza plazan.

**Gernika-Lumo** Antzerkia: *Check out*. Gaur, 13:00etan, Fuente de Mercurion.

**Getxo** Galerna, Mcenroe eta Los Brazos. Gaur, 17:15ean, Portu Zaharrean.

**Getxo** Antzerkia: *Arrain bat bezala*. Producciones maestras. Gaur, 18:00etan, Muxikebarrin.

**Iruñea** Antzerkia: *Antsietateak ez du hiltzen, baina nekatzen zaitu*. Gaur, 19:00etan, Baluarte auditoriumean.

**Irun** Antzerkia: *Izarren hartza*. Panta Rhei. Gaur, 12:30ean, Soroxarta parkean.

**Oiartzun** *Deserriko kantua*. Entrebescant. Gaur, 11:30ean, udaletxeko areto nagusian.

**Urretxu** Puro Relajo. Gaur, 23:30ean, Gernikako Arbola plazan.

**Usurbil** Antzerkia: *Eukalyptus*. Jon Ander Urresti. Gaur, 19:30ean, plazan.

**Zarautz** Iraun taldea. Gaur, 16:00etan, Salbide parkean.

# EKITALDIAK


1

## **Bertso saioa:** Minbiziari kantari

*Tabuen kutxatik oholtzara* bertsoaldi musikatu solidarioa eginen du Izan Inurri elkarteak gaur, Pasai Donibanen (Gipuzkoa). Minbiziak gordetzen duenaz arituko dira kantuan.

**Saio solidarioa.** Alaia Martin, Ane Labaka, Onintza Enbeita eta Uxue Alberdi, gaur, Juanba Berastegin, Pasai Donibanen (Gipuzkoa).


2

## **Musika:** Krakatekoen diskoa

Maite Larburuk bere *Krak* diskoaren kontzertua eginen du gaur Gasteizen. Artistaren laugarren lana da, eta, bertan, pitzaduren inguruan kantatzen du, musikaren bidez indarra biltzeko. Hiru kide ditu taldeak.

**Kontzertua.** Maite Larbururen kontzertua, gaur, 19:00etan Montehermoson, Gasteizen.



3

## **Bisita:** Euskal Museoaren ondarea

Gaur izanen da Baionako Euskal Museoan *Ondarearen Europar egunak* bisitatzeko azken eguna. Bisita librea 10:00etatik 18:00etara egin ahal izanen da, eta hiru bisita gidatu eginen dituzte egunean.

**Erakusketa.** Ondare Europarrak ikusteko aukera, gaur, Baionako Euskal Museoan.



Emaguzu zure inguruko ekitaldien berri:
**agenda@berria.eus**
Euskal Herriko kultur ekitaldien agenda:
**berria.eus/zerbitzuak/agenda**



# EGURALDIA




## Euria tarteka

Lainotuta egongo da, eta zaparradak egingo ditu noizbehinka. Litekeena da goizean oraindik ere ekaitzak jotzea. Iluntzean, atertuz joango da. Mendebaldeko haizea ibiliko da hasieran, eta ipar-mendebaldekoa sartuko da arratsaldean. Freskatu egingo du.

**JOERA**

Astelehena, 23

Asteartea, 24

Asteazkena, 25

| | Bihar | Asteartea | Asteazkena | Osteguna |
|---|---|---|---|---|
| BAIONA | 15 / 18 | 14 / 21 | 17 / 25 | 17 / 22 |
| BILBO | 13 / 21 | 12 / 23 | 17 / 27 | 15 / 22 |
| DONIBANE GARAZI | 11 / 19 | 11 / 22 | 15 / 26 | 14 / 23 |
| DONOSTIA | 14 / 19 | 13 / 22 | 18 / 26 | 16 / 22 |
| GASTEIZ | 10 / 21 | 8 / 23 | 14 / 25 | 14 / 22 |
| IRUÑEA | 12 / 19 | 11 / 19 | 16 / 23 | 17 / 24 |
| MAULE | 9 / 21 | 8 / 22 | 15 / 25 | 14 / 22 |
| TUTERA | 14 / 21 | 12 / 22 | 17 / 26 | 20 / 27 |

**ITSASOA**

Mendebaldeko haizea, 3ko indarrarekin; arratsaldean, ipar-mendebaldekoa, 4ko tarteekin. Itsaskirria, itsaskiko guneekin. Hondoko itsasoak metro erdi baino gutxiagoko olatuak altxatuko ditu.

| ITSASALDIA | ORDUA | METROAK |
|---|---|---|
| Itsasgora | 08:05 | 4,30 |
| Itsasbehera | 01:50 | 0,61 |
| Itsasgora | 20:33 | 4,20 |
| Itsasbehera | 14:14 | 0,70 |

**ISOBARA MAPA**



| EGUZKIA | SORTU | GORDE |
|---|---|---|
| | 08:00 | 20:11 |

| ILARGIA | EGUNA |
|---|---|
| Ilbehera | Irailak 24, asteazkena |
| Ilberria | Urriak 2, asteazkena |
| Ilgora | Urriak 10, osteguna |
| Ilbetea | Urriak 17, osteguna |

**BIHAR**

Hegoaldean, hodei gutxi agertuko dira; iparraldean, gehiago. Mendebaldeko haizea ibiliko da goizean, eta ipar-mendebaldekoa arratsaldean. Tenperaturak berdintsu eutsiko dio.

Enekoitz Telleria Sarriegi



# «Jendeak jakin egin behar du; jakiten bada, kontserbatu egin daiteke»



**MIKEL LORDA LOPEZ**
*Botanikaria*

Nekaezina jardunez eta umil(egi)a aldartez. Ingeniaria, irakaslea, katedraduna eta, batez ere, botanikaria da Lorda. Erreferentziazko gida. Laster barru argitaratuko du bizi osoko lana: 'Nafarroako flora baskularraren atlasa'.

IRUÑEA— Iruñeko Arrosadia auzoan bada etxabe bat urdin argi kolorekoa duena kanpoaldea, eta ezustekoz betea barrualdea. Ez esan inori, baina 24.000 landare daude bertan apailatuta. Bestela esanda, Mikel Lorda Lopezen bizitza (Iruñea, 1959). Haren herbarioa. Tamaina, jatorri, klase eta kolore guztietako atlas, gida eta liburukoteen artean loratutako desordena ordenatua. Bildu gabe dauka atea, eta kirika ari da kazetaria, abisatu gabe. Lokiz mendilerroan (Nafarroa) bildutako *Damasonium polyspermum* lehortua ari da paper fin bat gainean jarrita kalkatzen, maisuki. Horixe baita bera: botanikari maisua. Betaurrekoak kendu ditu, eta bostekoa ematera jaiki da. Begi horietan bada bizia, eta izate horretan bada umiltasuna.

**Zer da hau guztia? Non dago?**
Nire herbarioa da hau. Landareak eta liburuak gordetzeko leku bat. Hemen gordetzen dut orain, lehen etxean neukan guztia. Pilatu egiten dira gauzak halakoetan, eta etxabe bat hartzea erabaki nuen. Hemen pasatzen ditut egunak. Gainera, erretiroa hartu nuenetik, denbora gehiago daukat honi eskaintzeko.
**Gehiago?**
24.000 plegu inguru daude hor atzean gordeta.
**Zenbat ordu hemen?**
Bizi oso bat. Gutxienez, zortzi ordu egunean. Baina gustura egiten diren gauzak dira.
**Nondik datorkizu grina hau?**
Txikitatik erakarri izan naute natur zientziek. Oso gustura ibili izan naiz mendian. Nerabea nintzela hasi ginen mendira irteerak egiten, eta neure buruari esaten nion: «Zergatik ez ditut irteera hauek baliatzen zerbait egiteko?». Eta hasi nintzen poliki-poliki landareekin, eta gaur arte.
**Ama omen zenuen lorezalea.**
Egia da, bai. Asko gustatzen zitzaizkion. Askotan etortzen zen nirekin batera mendira egindako irteera horietara. Gustura ibiltzen ginen landareak biltzen. Interes handia zeukan.
**Iruindarra zen?**
Ez, Erronkaribarrekoa. Ez zen oso ohikoa bere garaian, baina asko irteten zen bakarka mendira.
**Nola zuen izena?**
Anunciacion Lopez. Oso litekeena da, bai, grina hori harengandik jaso izana.
**Euskara ere bai?**
Ez, gazteagoa nintzela ikasi nuen.
**Non egin zenituen lehen ikasketak?**
Maristekin lehenbizi, institutuan gero, eta unibertsitatera handik.



**Nora?**
Ingeniaritza agronomoa ikasi nuen aurrena Atarrabian [Nafarroa], eta Ingurumen Zientzietan lizentziatu nintzen gero, UNEDen bidez. Peraltan [Nafarroa] hasi nintzen irakasle gisa, eta Iruñera aldatu nintzen gero, Nekazaritzako eta Basogintzako Ikastetxe Integratura. Katedradun egin nintzen tarte horretan, eta erretiroa hartu arte aritu naiz irakasle lanetan bertan.
**Zer eman dizu irakaskuntzak?**
Irakatsi egiten da, eta ikasi egiten da. Eta garaiak ere oso ezberdinak izan dira. Hasiera hartan, ikasleek errespetuz begiratzen zieten irakasleei; denboraren poderioz, gauzak aldatuz joan dira. Baina oso gustura aritu naiz irakaskuntzan. Saiatu izan naiz haien gustuko klaseak prestatzen, eta uste dut lortu izan dudala.
**Noiz jubilatu zinen?**
Duela bost urte.
**Jakintza zabaltzeari sekulako garrantzia ematen diozu.**
Izan ere, zertarako balio du norberak ikasi eta gordean duenak, ez bada zabaltzen? Bakoitzak dakiena zabaltzea eta konpartitzea ezinbestekoa da. Jendeak jakin egin behar du; jakiten bada, kontserbatu egin daiteke.

**Zure gidak eta liburuak ez dira, beraz, Mikel Lordak asko dakiela erakusteko?**
Ez. Nik gida, liburu eta artikulu horiek jendearen esku uzteko idazten ditut. Jendeak ikas dezan zer daukagun hemen, eta hortik etor dadin daukagunaren kudeaketa, kontserbazioa... Zertarako balio du bakoitzak dakiena, edo ikasi duena, gordetzeak?
**Baina zuk argitaratutako azken liburua autoeditatu egin duzu? Ez du jakintza horrek beste errekonozimendu edo laguntza mota bat behar?**
Bai, egia da, horretan badago hutsune bat. Natur zientzietan askotan gertatzen da hori: inportantzia handirik ez zaiola ematen egindako lanari. Eta pena da hori, badagoelako jende asko oso interesgarria dena, gauza asko egiten dituena, baina oso gutxi zabaltzen da haien lana.
**Bidean datorrenak, Nafarroako floraren atlasak, izango du laguntzarik?**
Zorionez, bai. Nafarroako Gobernuak argitaratuko du. Iaz jarri nintzen haiekin harremanetan. Erakutsi nien egindako lana, eta asko gustatu zitzaien. Ez zegoelako halako lanik argitaratuta. Horretan ari gara orain. Aurten



«Natur zientzietan askotan gertatzen da hori: inportantzia handirik ez zaiola ematen egindako lanari»

«Botanika ematen dute, baina gazteei etekin ekonomiko handiagoa ematen duten zientziak gustatzen zaizkie»



ez dakit, baina datorren urtean argitaratuko dugu. Nire partea egina dago. Maketatze eta zuzentze lanetan ari gara orain.
**Badu errekonozimendurik botanikak?**
Oinarrizko zientzia bat da, baina atentzio gutxi jartzen zaio. Ez zaio inportantziarik ematen.
**Ez duzue behar beste indar egin?**
Ziurrenik saretzea falta izan zaigu, eta ongi saltzea ere bai. Bakoitza bere kasa ibiltzen da horrelakoetan askotan. Ikerketa zentro batean lan egiten baduzu, aukera gehiago duzu zeure lana erakusteko. Nahiz eta geure artean oso



IDOIA ZABALETA / FOKU

harreman ona daukagun, oso bakarka aritu gara ziurrenik. Horregatik bildu ginen Donostian, Aranzadi zientzia elkartean, eta horregatik hasi ginen elkarrekin irteerak antolatzen: denok biltzeko, geure arazoez hitz egiteko...

**Zeintzuk izan dira zuen erreferenteak?**

Euskal botanikariontzat oso inportantea izan da Jakako Ekologia Institutu Piriniotarra. Pedro Montserrat botanikariak bertan egiten zuen lan. Hil zen arte, aita baten modukoa izan zen niretzat. Berak irakatsi zidan gauzak nola egin, eta mantendu. Oso ikuspegi zabala zeukan. Institutu hori erreferentziazkoa da botanikariontzat. Oso harreman ona daukagu haiekin, eta elkarlanean aritzen gara.

**Iñaki Aizpuru, Pello Urrutia, Pilar Catalan... 1980ko hamarkadan lan eskerga egin zenuten. Belaunaldi berriak badatoz?**

[Hasperen egin du] Hala izan bedi! Jende gazteari ez zaio asko gustatzen botanika kontuetan sartzea. Aranzadin badago gazte belaunaldi interesgarri bat, baina gazteei asko kostatzen zaie. Hor nonbait, ez dute garbi ikusten botanikak zertarako balio duen. Unibertsitatean botanika ematen dute, baina jendeari etekin ekonomiko handiagoa ematen duten zientziak gustatzen zaizkio: biologia molekularra eta halakoak. Aipatu duzun 80ko hamarkada horretan ikerketa asko-eta egiten ziren. Orain, apenas.

**Dena egina dagoelako izango da?**

Agian hori da, bai, pentsatzen dutena [barrez]. Zertarako gehiago? Baina ez da hala. Hau betiko lana da, egunero agertzen dira gauza berriak, baina horrek ez du jendea erakartzen. Botanikaren alorrean eta Europa osoan gertatzen da: ikerlari geroz eta gutxiago dago.

**Izan ere, zertarako balio du botanikak?**

Pentsa: energia eolikoko haize errotak jartzeko, errepide eta azpiegitura berriak egiteko... oinarrizko datuak behar dira. Eta oinarrizko datu horien artean dago botanika. Jakin behar da, adibidez, haize errotak jarri behar dituzten mendi magal horretan, edo errepideak zeharkatuko duen lursail horretan landare babesturen bat dagoen. Oinarrizko datu hori botanikak emango digu. Beste hainbat gauzatarako ere bai, baina interes materialari begira, hori da adibide bat.





«Gurean zeuden landare asko desagertu egin dira. Klimaren aldaketak eragiten du, baina azpiegiturek gehiago»

«Botanika bizitzeko modu bat da. Eta horixe du interegarria: ez dela sekula amaitzen. Frikiak garela? Bai, baliteke»

**Zein da hemengo botanikaren berezitasuna?**

Oso klima ezberdinak ditugula. Mendiko klima, atlantikoa, hegoaldekoa... Multzo handi bat osatzen dute denek, eta horregatik daukagu hemen halako bioaniztasuna. Oso interesgarria da eremu berean hori guztia edukitzea.

**Eta osasuntsu dago?**

Klima aldaketak eta azpiegiturek osasun hori kolokan jartzen duten arren, baietz esango nuke.

**Zerk eragiten du kalte gehien?**

Lurzoruaren erabilerak izan duen aldaketak. Duela urte asko gurean zeuden landare asko desagertu egin dira. Klimaren aldaketak eragiten du, baina azpiegiturek gehiago.

**Neurgailu apartak baitira landareak.**

Erabat.

**Zuek katalogatu dituzue daudenak. Atzetik datozenei tokatuko zaie desagertu direnen berri ematea?**

Oso litekeena da. Zaila da aurreikustea zer gertatuko den, baina norabide horretan goazela dirudi. Landareak desagertu direla agerikoa da. XVIII. mendean zeuden asko orain ezin dira aurkitu. Datozenei ere hori gertatuko zaie.

**Eta berriak badaude?**

Oraindik badago zer deskubritu, bai. Gurera landare berriak hasi dira gerturatzen, beste batzuk aldentzen...

**Lilipak «gatazkatsuak» direla diozu. Zergatik?**

Zailak izaten direlako sailkatzeko, eta eztabaida eragiten dutelako. Asko hibridatzen dira, eta identifikatzeko gakoak ez dauzkagu horren ondo eginda. Horregatik da horren interesgarria gure arteko harremana eta eztabaida. Horretan ere bada interesgarria botanika: ez da inoiz amaitzen.

**Zure lana ere ez.**

*Nafarroako flora baskularraren atlasa* prest dago; inprimategira eramatea baino ez da falta. Eta ari naiz beste bat prestatzen: Nafarroako landare mehatxatuen liburu gorria.

**Askotan gehiago erakartzen dute mehatxatuek, daudenek baino?**

Hori hala da. Daudenak inportanteak dira, baina mehatxatuak daudenak babesteko eskariak beste erakarmen bat sortzen du.

**Friki batzuk zarete?**

Eta tabernetan dabiltzanak ere bai orduan, edo mendian korrika ibiltzen direnak... Hau bizitzeko beste modu bat da. Frikiak? Bai, baliteke.

**24.000 horien artean bat aukeratzeko eskatuz gero?**

Hori seme-alaben artean aukeratzea bezalakoa da. Baina egia da oso interesgarria izan zela Belaguan [Nafarroa] egin genuen aurkikuntza: Orkidea fantasma [*Epipogium aphyllum*]. Oso orkidea berezia da. Oso urria. Duela hogei bat urte topatu genuen. Oraindik ere han jarraitzen du. Ikusi dut aurten.

**Eta gustuko zure toki hori?**

Mendialdeko landareak gustatzen zaizkit asko. Aralar, Urbasa... baina, batez ere, Pirinioak. Larra aldeko eremuak: Orhi, Otsogorrigaina, Kartxela... Horren zailak direnez iristeko, ezusteko handiak hartu ditzakezu. Ez dakit ama zena ere han ibiltzen zelako izango den. ●



2024ko irailaren 22a, igandea
**www.berria.eus**



**Egoitza nagusia:** Martin Ugalde kultur parkea. Gudarien Etorbidea, z/g 20140 Andoain
**Telefonoa:** (0034) 943 30 40 30
**Posta elektronikoa:** berria@berria.eus
**Publizitatea:** publi@bidera.eu




# Aldarri bat bera egun bihurtuta

**Ofizialtasunaren aldeko eguna egin dute Leitzan. Euskal selekzioaren, euskararen eta lurraldetasunaren aldeko aldarrikapen bateratua atera dute plazara: 'Herri libre bat'.**



Ofizialtasunaren aldeko egunaren deitzaileak eta omenduak, Leitzako plazan, atzo. E. TELLERIA SARRIEGI



ATZEKOZ AURRERA

**Enekoitz Telleria Sarriegi**

LEITZA— Ez daukanak eskatzen du. Horixe baita aldarrikatzea: berez eta izatez eskubidea izan behar lukeen hori galdegitea. Izan euskara hizkuntzaren arloan, izan selekzioa kirolean, eta izan herria munduko plazan. Berbera baita aldarria: *Herri libre bat*. Eta aldarri hori bera jaiegun bihurtu zuten atzo Leitzan, Nafarroan.

Batera denak, ofizialtasunaren alde, eta bultzaka: *Gu ere bai!*, Euskal Herrian Euskaraz, Gure Esku eta Tximutxe Leitzako euskara taldea. Mahai ingurua eguna hasteko —Ibai Zabala (*Gu ere bai!*) eta Josu Etxaburu (Gure Esku)—, kirol erakustaldiak hurrena —Leitzako karate eta gimnastika artistikoko taldeak, aizkolariak eta harri jasotzaileak—, eta olgetarako jolas berezi bat gero —garai bateko *txintxurrin* joko harrigarria, lehen aldiz Leitzako plazan—. Herri euskalduna eta kirolari askoren herria delako aukeratu dute Leitza, eta nabaritu da badutela baterako eta besterako joera eta aldartea —Kristina Urrutia eta Gabriel Saralegi herritarrak aritu dira aurkezle eta animatzaile—.



Herriko karate taldeko kideen erakustaldia. IÑIGO URIZ / FOKU

Dena prest utzi dute omenaldirako. Aukeratutako ardatz horien bueltan aski meritu egindakoak denak: Leitzako Euskal Herria Mendi Erronka lasterketa, Xabier Amuriza idazle eta bertsolaria, eta Tuterako (Nafarroa) Union Tutera kirol taldea. Xabier Euzkitze kazetaria aritu da aurkezle. Harena da sarrerakoa: «Libre izateko garaia iritsiko da menturaz, bidean herri izateari uzten ez badiogu, eta borroka horretan dihardugu: lurraldetasuna, herria, hizkuntza, kirola. Bata bestearen osagarri, eta bata bestearen indargarri».

Eki Mateorena bertsolari gazteak agurtu ditu omenduak: «Eskerrik asko, amesteko lurralde bat eman diguzuelako». Junkal Otxotorenak jaso du saria —eguzki lore eder bat— Euskal Herria Mendi Erronka lasterketako antolatzaileen izenean. Eduardo Galeano idazle uruguaitarraren aipu batekin eskertu du: «Sinistuta gaude, jende txiki askok, leku txikietan, gauza txikiak eginez, mundua alda dezaketela».

Xabier Amurizak ere jaso du bere eguzki lorea. *Euskal Herrian euskaraz* abestiaren hitzen sortzailea eta *Hitzaren kirol nazionala* kontzeptuaren asmatzailea. Euskal Herria Euskaraz-eko Intza Gurrutxagak eman dio saria, eta egoeraren diagnostiko bat egin ere bai: «Zapaltzen gaituen sistemak hor dirau. Formak aldatu badira ere, edukia bera da». Eta egin du errepasoa: Nafarroako Gobernuak ezezkoa eman izana Oibarren D ereduko haur eskola bat eraikitzeari, EAEko Auzitegi Nagusiak ebatzi izana Donostian udaltzain izateko B2 mailarik ez dela behar, eta Baionako Auzitegiak Gorka Torre EHEko kidea zigortu izana. «Arlo indibidualetik kolektibora egin behar dugu jauzi», aldarrikatu du Gurrutxagak.

**Erriberatik Leitzara**

Union Tuterako kideak aurkeztu ditu Ibai Zabala pilotariak: «Mirestekoa da haien txikitik egiten dutena. Nola ehundu daitekeen komunitate bat kiroletik abiatuz, nola lotu daitezkeen eta nola bizi daitezkeen batera halako itogune batean, dena kontra duten toki batean». Eta hartu dute hitza Union Tuterakoek, eman dituzte eskerrak, eta esan dute merezi izan duela Erriberatik Leitzara hainbeste kilometro egitea, baina ezin dutela eguna bertan igaro: «Lau ordu barru partida daukagu, eta bueltatu behar dugu». Eta egin dute balantzea ere: «Duela lau urte erabaki genuen kirola probestea euskara sustatzeko, eta denborak arrazoia eman digu».

Trikipoteoa, pilota partidak... Jarraitu du festak Leitzan. Euzkitzerena da agurrekoa: «Libertatearen bidea luzea eta malkartsua da, baina maldaz malda eta putzuz putzu goazen bitartean, ez diezaiogun utzi herri izateari». ●